


EGILEA:
**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**

Centro Penitenciario Córdoba
14015 Córdoba


Ibon Muñoa 2000ko urrian atxilotu zuten. Hainbat kartzeletan izan dute preso: Valdermoro, Kordoba, Burgos, Langraitz, Puerto I eta, 2014ko martxotik aurrera, Kordoban.

2020ko urriaren 11n irten zen kalera Kordobako espetxetik, liburu honekin batera.


AZALEKO IRUDIA:
**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**

**www.literaturakoadernoak.org**





LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL:
ISBN ZENBAKIA: 978-84-121341-1-7

*Bigune feministari eta Naluari.*

*'Argia', 'Aizu', 'Jakin', 'Bertsolari', 'Eta kitto...!' eta 'Eibar aldizkaria'ri.*

*Euskal kulturari eta euskarari.*

## **Ainara bat itzuli da**

Xabier Amuriza

*«Ametsen txokoan bizi naiz».* Nerabe baten edo bisionario liriko baten zoriona dirudi. Txoko hura ziega bat da, ordea, eta bertako biziliarra, hogei urterako espetxe-zama bizkarrean duena. Baina *«Ainarak itzuliko dira».* Ainarak aldran, multzoan etortzen dira. Ibonen metafora horretakoak oso banaka eta kostata datoz. Egon pixka batean. *«Bidean gaude».* Egongo gara. Hogei urte bere zain egin ditugunez gero, beste egun batzuk gorabehera, ez zaigu ametsa txikituko. Zein atari edo atartetan hasiko ote da habia egiten? Orduan konturatzen gara: udazkenean ere *«Udaberrian biziko gara».* Bitartean, izan ditugu *«Hamaika desio utopiarako».* Denbora luzatu egin da. Sufrimenduaren denborak luzeak izaten dira beti. *«Gure memoria gure historia».* Gure memorian, beharbada, sufrimenduak gehiago izan dira garaipenak baino. Baina hori historia unibertsala da. Edozein zapalkuntzaren aurkako ametsari, borrokari heltzen dionak badaki bideak bizitza osoa hartuko diola. Beharbada, *«Gure Ama Lur feminista»* nagusitzea lortzen denean, bidea izango da Urkora edo Kalamuara joanetorri bat egitea bezalakoa.

Zazpi libururen izenburuak aipatu ditut. Guztien artean, 1018 sorta edo poemaren izenburuak. «1018. Sorkuntzekin honaino heldu naiz, 2020ko abuztuaren 29an». Eta 1018. sorta hasten da:

> Sorkuntzan urtetan jardunda
> noizbait gertatu behar zen,
> iturburua ur barik
> etorria agortu zait,
> musak dirudi direla
> nirekin aspertu.

Ba, ondo musa pazienteak izan dira! 1018 sorta horiez gainera, baditu gehiago ere, esaterako, Eibarko Amnistiaren Aldeko Batzordeak 2009an argitaratutako liburuxka bat, *Olerkiak* izenburuz. Sorta gehienen batez bestekoa 5 ahapalditik gorakoa dela jota (banan-banan zehatz kontatzeko, hogei urte beharko nituzke), espetxean egin dituen egunak beste esan liteke. 20 × 365 = 7.300 egun = 7.300 bertso, tartean poema mordo bat dela.

2020-09-07ko BERTSOLARI aldizkarian (KARTZELAKO GAIA II] NIRE BERTSOZALETASUNAZ – IBON MUÑOA), dio: «2011ko azaroan *Ametsen*

*txokoan bizi naiz* argitaratu zidaten. Hitzaurrea Jon Etxabek idatzi zuen». Orduan atera behar da, liburuak argitaratzen hasi zenetik, eguneko portzentaia askoz handiagoa izan zela. Artikulu hartan beste kontu bat ere aipatzen du, niretzat bereziki zirraragarria:

«Nahiz politikan buru-belarri sartu, 1983an Xabier Amurizaren ikastarora joan nintzen, bertsolaritza hobeto ezagutzeko. Ikastaroan umeak, gazteak eta helduak (Eibar, Soraluze, Markina…) batu ginen hilabete batzuetan, astean behin. Umeek ikastaroa askari batekin bukatu zuten. Helduok, berriz, afari batekin Soraluzeko San Andres auzoan. Afalostean, Xabierrek bakoitzari bertso bat idazteko eskatu zigun. Ni ez nintzenez osatzeko gai izan, zeharo lotsatu nintzen. Bertsolari izateko ez nuela balio ikusita, bertsozale bihurtu nintzen».



Ba, eskerrak ez zen izan «bertso bat osatzeko gai»! Ikastaroa efektiboago gertatu izan balitz, neuk ere kartzelara joan beharko nukeen berriz, proportzio bereko hitzaurre bat egiteko. Ibonek baino askoz urte gutxiago preso egina izanik (herena bakarrik), nik ez nuen inondik ere burutu

proportzio horretako emaitzarik. Eta Eibarko ikastaroa eta San Andresko afaria aipatu dituenez gero, ezin dut neuk ere nabarmendu gabe utzi ikastaro huraxe izan zela (ume, gazte eta heldu batera) nire bertso-bizitzako esperientziarik gogoangarrienetakoa, aukera dudan guztian aipatu ohi dudana.

Ibonen azken liburu hau (*«Gure Ama Lur feminista»*), aurreko guztiak bezala, bere sentimenduen eta sentitzen edo kontrasentitzen dituen gaien hurrenkera bat bezalakoa da. Eta gertaeren kronika bat. Lehen sortaren izenburua: «*Europak Amerika konkistatu zuen*». Hona pasarte bat:

> Senak aginduta, hamasei urterekin
> militatzen arduraz hasi nintzen,
> Franco lurperatu nahi zutenek beste,
> askatasuna maite nuelako,
> gazte eta sentimentalak ginen
> solidarioak borrokalariekin.
> Militantzia bizitza izan da, eta da,
> lana, maitasuna, etxea... lez,
> maiz, ez nituen egoki uztartu,
> ez nuelako behar besteko kemenik.

Bai, Ibon! Hori ere San Andresko afarikoa bezala ulertuko beharko dugu, zeren, baterako kemenik izan ez ei zenuen bezala, besterako ez bazenuen izan "behar besteko kemenik", zer izango zen, bietarako izan bazenu?

Ibonen sorkuntza luzean, bada gauza bat hunkitzen nauena, baita harritzen ere. Hainbeste urte preso daraman batengan (eta nolako baldintzetan!), itxaron zitezkeen halako amorru, garraztasun edo desesperaziozko garraisi batzuk ere, baina, edo nik ez naiz gauzak ondo interpretatzeko gai, edo San Andresko afariko "ezina" mirari baten ifrentzua izan zen, Oteizaren hutsunea bezala. Hamaika urte preso daramatzan baten lehen liburuaren izenburua *Ametsen txokoan bizi naiz* da. Orduan, besteok non bizi ginela esan behar dugu? Gezurra al zen? Imintzioa? Ezkutatze altruista bat? Ez dut uste. Banaiz horrenbeste interpretatzeko gai. Ibonen bertso eta olerkietan, gardentasun natural bat eta benetasun noble bat nabarmentzen dira. "Eibartasun genetiko bat", esango nuke. Beti ere, sendotasun baten barruan. Eta batzuetan, naturaltasun-kolpe ustegabeak:

Auguste Rodin zena ziplo
gauean gogoratzen,
"Pentsalaria" lez nago
komunean pentsatzen.

Edo inoiz, sinestea zail den samurtasunak:

Zazpigarren ziegan naiz
poeten moduan,
musekin barneratzen
zirraren munduan.

Horrela ez da harritzekoa ondorioa: «Kartzelan zurekin esnatzen naiz». Ba, ez dituzu esnatze maitagarri gutxi izan, Ibon, 20 urtetan, 240 hilabetetan, 7.300 egunetan! Minutuak eta segundoak San Andres auzoko jatetxean kontatuko ditugu. Orain ez dakit jarraitzen duen, baina Soraluzen aurkituko dugu bazterren bat, eibartarrei gustatzeko modukoa, zubian zintzilik bada ere. Bakean utziko gaituzte, "sikatzen" ari garelakoan.

Eta bertso baten aipuarekin amaituko dut, zeina, geroan jokatu arren, dagoeneko orainaldi bihurtua baita. Noizbait, zorionez! Beste "ainara" guztien itzuleraren zain.

Bi mila eta hogei
zenbaki bitxia,
niretzat izango da
urte berezia,
gaindituko dudanez
espetxealdia,
urriaren hamaikan
Eibarra bidaia.

***Gure Ama-Lur feminista da*** Ibon Muñoaren zazpigarren liburua dugu. Espetxean idatzi dituen azkena izango da, urriaren 11n, liburu honekin batera, bera ere kaleratu egin zen-eta.



Aurretik argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (2011),
*Ainarak herrira itzuliko dira* (2014),
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016),
*Udaberrian biziko gara* (2017),
*Hamaika desio utopiarako* (2018),
*Gure memoria, gure historia* (2019).
Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara, lehen bertsoak 863. zenbakia darama;
azkenak, 1018.a. Guztira, 156 bertso berri,
2019ko ekainaren 30etik 2020ko abuztuaren 29ra artean
Kordobako espetxean idatziak.

Zazpi liburutan, 1018 bertso,
hogei urteko espetxealdian idatziak.

*863*

## Europak Amerika konkistatu zuen

1

Andres Lopez Obradorren hitz zuzenak airean
Ameriketako konkista salatzeko,
aita santuak eta monarka espainolak
indioei kalte ordaina eman diezaietela,
Europa hango herriekin ankerra izan zen,
berdin jopu egin zituen afrikarrekin,
erlijioso askok bortxa bedeinkatuta
mertzenarioek ez zuten izan kupidarik.
Espainian ustezko sozialistek
egia ergelki errefusatu dute,
Bolsonaro, Trump, Duque... harroak direlako,
kolonoek izua hedatzen jarrai dezakete,
lehen, europarrek esan zutelako,
“indigenak ez dira adimentsuak”,
gaur, Amazonia ustiatzea zilegi da,
herriak eta ingurugiroa suntsitzea.

2

Mexikon Lopez Obrador deitoratu dute,
multinazionalek berean darraitelako,
azpiegitura-tzarrekin eremuak hondatuta
indioak kaltetzen dituztelako,
Hernan Cortes makur hura, gaurkoen eredu,
arpilatzeko xumeen ondasunak,
zapatistek oroitzen dute zer zen
bertakoa lurgabetzea urrearengatik.
Europak *mea kulpa* esan dezala,
Afrikan, Asian, Ozeanian, Amerikan,
ekonomia kapitalista eraitsita,
indioen matriarkatua susper dadin,
Leonard Peltier lakotak, hauxe esan lezake
azken lau hamarkadak kartzelan emanda,
"gure adatsak erauzten segitu ordez,
gurekin bake zuzenaren pipa erre".

*2019ko ekainaren 30ean*

864
## Haizegailuari

1
Haizemailea deitu,
zein haizegailua,
ohean guretzat da
haize freskua,
udan bihurtzen denez
ziega infernua,
ezlekuak dirudi
Sahara mortua,
urdina zerua,
bero ibilgua,
urtuta zentzua,
gogoan gandua,
hemen urrun daukagu
paradisua.

2

Nahiz gailu onak duen
leuntzen sargoria,
guretzat ataka hau
maiz da gazia,
idazten uzten dugu
blai idazmahaia,
madarikatzen ozen
aro kiskalia,
ekiren ongia,
Kordoban gaizkia,
bizkarra bustia,
eta egarria,
zinez gogortzen digu
zigorraldia.

3

Espeizainei zaie
alkandora blaitu,
musua bulegotik
at izerditu,
kemena zaielako
tantaka gutxitu,
beroak ia ditu
zokoan eritu,
direnez etsitu,
gu gara ongitu,
tresnak, aldiz baitu
onura bizitu,
makurren herra dadin
behingoz urritu.

4

Haizegailu mina nork
zintuen asmatu?
Hemen ez gara zeuri
esker hondatu,
sapa net dagienez
zaitugu esnatu,
umelak geundelako
gaituzu sikatu,
gaur dizut kantatu,
bertso hau osatu,
zaitut ohoratu,
zuk nauzu ufatu,
kide bat zarela dut
maitez pentsatu.

*2019ko ekainaren 30ean*

865

**Espetxeak ez dezan izan gerorik**

1

Espe batzuek pilulekin kateatuta,
burmuina baldintzatuta daukate,
liskarretan zigorrak emendatu ahala,
askatasuna urruntzen joaten zaie,
gaizkia espetxean trebe herrestan,
bi hortz zorrotzekin pozoia ziztatzen.
Zoko ilunaren giroan estresatuta
ongia ezin da buru gaixoetan sartu,
esperantza aspaldi ostendu zitzaien
bizitza hormak eta txarrantxak eginda,
ataka basatian ahariak antzera,
gizonenak izateko muturka dabiltza.

2

Sentieraren nahia gaixoak sendatzea,
kerietatik aterata askatzea,
bihotzak hunkitzen zintzo saiatzen den arren,
ez du erdietsi xede sanoa,
etxartean drogak espetxeak xaxatzen ditu,
berdin sistemak, ez daitezen ziegak hustu.
Zentzuak, "ez irentsi pilularik", diotsu,
"ez ezazu tabakorik pipatu",
ikasi, eta kirolean aritu,
arima janzteko, gorputza zaintzeko,
zure iparrorratza duintasuna izan dadila,
espetxeek, ez dezaten izan gerorik.

*2019ko uztailaren 7an*

866
## Suge kapitalistak beza ditzagun

1
Ophidiak higitzen
dira herrestatzen,
sigi-saga natura
zorrotz arakatzen,
pozoi bakoak jator
ditut estimatzen,
pozoidunak, ostera,
naute ikaratzen,
dabiltzalako jende
xumea hertsatzen.

2
Kapitalistak oro
dira narrastiak,
bankariak bezala,
ankerrak guztiak,
eskubideen kontra
dabiltza piztiak,
bakea mintzen dute
banatzen *ostiak*,
hola maiz hil dituzte
gosez haur eztiak.

3
Soarekin limurtzen
digute gogoa,
lizunki dantzatuta
mingain bifidoa,
nahiz ederra den euren
berben jarioa,
darakutsa, ordea,
desio irmoa,
jopu izan dadila
gaztedi xaloa.



4
Arrautzak habietan
dituzte metatzen,
gaizkia gero, segi
dezaten hedatzen,
euren edenarekin
garenez kutsatzen,
elkartasuna sorgor
dugu zokoratzen,
kontsumismoan grinaz
gara kulunkatzen.

5
Handikeriak ditu
herriak hesitzen,
lurralde oparoak
bonbekin gorritzen,
ondasunak osteko
arimak etsitzen,
menderatzeko bere
hortzekin zauritzen,
Trump lez, aberatsekin
soilik da hunkitzen.

6
Herrak diost, “sugeak
kalean xehatu”,
ikusi arte dela
odola gatzatu,
kontzientziak aitzitik,
“kemenez bezatu”,
ez ditzaten gerrak ta
faxistak bazkatu,
berdintasunak dezan
ongia ziztatu.

*2019ko uztailaren 7an*

867
**Militantzia gizatiarra**

1
Gure militantzia utopiaren bidea,
Amaiur, Gernika, Itsasu... gogoan,
senak aginduta, hamasei urterekin
militatzen arduraz hasi nintzen,
Franco lurperatu nahi zutenek beste,
askatasuna maite nuelako,
gazte eta sentimentalak ginen
solidarioak borrokalariekin.
Militantzia bizitza izan da, eta da,
lana, maitasuna, etxea... lez,
maiz, ez nituen egoki uztartu,
ez nuelako behar besteko kemenik,
preso eta iheslarien alde
urtetan kalean jardun nuen,
errepresioa gainditzeko,
abaguneak eskatzen zuelako.

2
Preso hemeretzi urte daramatzat
eusten goiari kideekin batera,
ideal askatzaileak zertzeko
hurkoen taupadak hobesten ditugu,
espetxean ilusioz blai darrait
aspaldian gazte mugimenduan legez,
udalean zinegotzi izanda adina
berdin udalgintzan atxilo eraman arte.
Ziegan tristuraz gogoratzen dut,
ez nintzela zuekin beti zintzo aritu,
nire arima ona zein gaiztoa zen
estresaren mailaren arabera,
nire sendabidea sorkuntza da
egindako akatsak, ez errepikatzeko,
militante hobea izateko,
aldiro zin-zinez lagun gizatiarra.

*2019ko uztailaren 14an*

868
**Kartzelan zurekin esnatzen naiz**

1
Kartzelan nago eta,
ari naiz kantatzen,
zurekin naizelako
goizero esnatzen,
maitasunak irrikaz
gaituenez batzen,
desioak taupaka
ditugu trukatzen.



2
Etsipenak, ez nazan
ziegan ziplo ero,
nire ametsen musa
zara iluntzero,
egin nintzenez zure
irrien bezero,
bertsotan ohoratzen
zaitut igandero.

3
Kartzelako urteak
poliki joan dira,
baina zeuri esker naiz
heldu goiztirira,
gogoa hegan arin
doia jauregira,
gure zirriak hasi
ziren oasira.

4
Nire aurrean daukat
zure argazkia,
udaldian niretzat
zara izozkia,
guk landatuko dugu
sakonki ezkia,
lurralde anitzean
gal dadin gaizkia.

7
Etxean prestatuko
dugu afaria,
ohea gau beroan
izan dadin jaia,
zugaz arnastu gura
dut jaioterria,
Arrate, Kalamua,
Urko, Akondia...

8
Atertu eta gero,
zuzen kazkabarra,
ortzian agertu zen
dir-dir ostadarra,
bakean dakusagu
orain artizarra,
Euskal Herria izan
zelako azkarra.

*2019ko uztailaren 14an*

869
**Ziegak gutunen olak**

1
Espeen ziegak gutunen olak
maitasuna astero igortzeko,
sentimenduen trukaketa zertu dadin,
atsegina ederkiro lilitu,
geroa kate barik iruditzeko
egia erantzun aproposa,
ezagutzeko herriaren azken pausoak,
esperantzak zutik dirauela sumatzeko.
Espeak beharra sentitzen du
askatasunari idazteko,
lurraldea utopiekin ongarritzeko,
idealak lerroetan islatzeko,
etxekoei txera oparitzen die,
kaleko kideei, berriz, harreman zintzoa,
maiteari tarte gozo bat eskaintzen dio,
Ama Lurrari lehen lez mirespena.

2

Jendartea alfabetatu ahala
espeak idazten hasi ziren,
kartzelaldiari egoki eusteko,
itzuliko zirela esateko,
tamalez, batzuen gutuna izan zen
heriotza zigorraren atarikoa,
euren musuak ez zitezen itzali
etxekoen eta lagunen gogoetan.
Nelson Mandelak, Bobby Sandsek, Rosa Luxemburgek...
zirrara eta kemena hedatzen zuten,
euskal espeok horixe dagigu
ametsak eta desirak konpartitzeko,
bolaluma orrian pausatuta
gure esaldiak sorkuntzak dira,
espetxetik Euskal Herrira joaten gara,
idazten digutenen bihotzak hunkitzeko.

*2019ko uztailaren 21ean*

870
**11/13 gaindituko dugu**

1
11/13 deitzen
da zitalen auzia,
juez ilun batzuek zuten
eratu malezia,
Guardia Zibilak bete
zuen asmo gazia,
auziperatu bakoitzak
senti zezan izia.



2
Ez denez delitu gugaz
izatea prestuak,
gezurrik baino ez dio
auziaren testuak,
oi, Jaiki-Hadi, Herrira...
eta abokatuak!
gure artean zin-zinez
zarete maitatuak.

3
*Jaque*, *Mate*, *Pastor* gure
kontrako jokaldia,
bengantzaren jukutria
gal zedin loraldia,
ez dadin inoiz amaitu
espetxeen aldia,
ez dezagun goza horma
bako bizialdia.

4
Mahai gainean zeukaten
euren xakeko taula,
konponketa, ez genezan
eskuratu sekula,
Euskal Herrian gogotsu
jo dezagun txirula,
juezen botere gogorra
gera dadin ahula.

5

Sakon aztertu ta gero,
ataka potoloa,
eman genuen barruan,
plazetan lez, pausoa,
nahiz maiz saiatu den dena
hondatzen gorrotoa,
zuekin zertuko dugu
gerezien aroa.

6


Bilbon maiz lez, irailaren
hamalauan soinua,
manifan dauden herritar
zintzoen olatua,
Espainia zer den behingoz
ohar dadin mundua,
estatuan agintean
dagoela lupua.

7
Irailaren hamaseian
tamalez epaiketa,
Madrilen demokrazia
delako zanpaketa,
fiskal hantusteak hasi
orduko galdeketa,
aurrean ikusiko du
Bilboko elkarketa.

8
Sententzia ospatuko
dugulako taupaka,
erraz ahaztuko dugu
epaiketaren kraka,
gaurko enbata dezagun
zohardura bilaka,
gure izar gorriak has
daitezen dirdiraka.

*2019ko uztailaren 21ean*

871

## Juan Sebastian Elkano bihotzetik egotzi dut

1

*Juan Sebastian* eskola-ontzia
Espainiako itsas armadaren harrobia,
Foru Aldundiek gonbidatu dute,
Getxon eta Getarian mirets dezagun,
bostehungarren urteurrenak merezi duenez,
munduko lehen itzuliaren hasierak,
hurrengo hiru urteetan nahitaez,
Elkano pairatu beharko dugu.
Getariako Elkanon bataiatuta,
arrantzale gaztea marinel bihurtu zen,
Magallanesen espedizioan parte hartu zuen,
Asiara itsasbide berri batetik heltzeko,
hamalau euskaldun bost ontzien artean
lurrak kolonizatzeko Carlos I.aren ohorez,
lau *Victoria* ontzian ahituta itzuli ziren
beste hamalau marinelekin Elkanok gidatuta.

2

Elkano hiru urte geroago hil zen
Moluketarako bigarren espedizioan,
eskorbutoak gorputza erasanda
hilotza kareletik itsasora bota zuten,
Andres Urdaneta militarrak ordezkatu zuen
Carlos I.aren inperioa handitzeko,
monarkak Nafarroa menderatu arren,
bihotzez bere garra eskaini zion.
Juan Sebastian ez dakit zu zer izan zinen,
zure sentimendua noblea ote zen,
bakarrik dakit arrantza laga zenuela
Gaztelako monarkia bortitza zerbitzatzeko,
sorlekuan noizbehinka omentzen zaituzte
lehorreratze gordina oroitzeko,
konkistatzaileekin maiz itsasoratu zinenez
zure balentriek ez naute hunkitzen.

*2019ko uztailaren 28an*

872

**Zurekin (zuekin) gustura bizi nahi dut**

1

Gustura egoteko
behar da nahimena,
ataka esparruan
gaintzeko kemena,
kideak direlako
nire ahalmena,
jator diot merezi
dutela omena.



2

Onetik irten ordez
ergelki orroka,
gustura motz ezazu
kirioen soka,
maitasuna atea
leun ari da joka,
gorrotoa lagako
dugulako loka.

3
Gustura bizi nahi dut
barruen barruan,
pozarren estres barik
naturan moduan,
elkartzen garelako
ametsen zeruan,
zurekin esnatzen naiz
irrien ortuan.

4
Gustura zaudenean
dena da erraza,
ez zaizu iruditzen
zigorra demasa,
izan zarelako ni
ontzeko kapaza,
zu gogoratuta zait
azkartzen arnasa.

5
Nik korrika gustura
dagit patioan,
bizinahia agudo
hazten zait gogoan,
jirabiran dirudi
zaudela ondoan,
egongo garen legez,
etxeko txokoan.

6
Ziegan gustura nago
desirak zenbatzen,
askatasunarekin
ohean pentsatzen,
gogoz hasiko gara
zorian hegatzen,
gustatzen zitzaizkigun
txangoak prestatzen.

7
Ziur nago biziko
naizela gustura,
barrutik at jakina,
horixe dut gura,
nik berriro sentitu
nahi nuke azkura,
zirriekin eskaintzen
zenidan onura.

8
Aizu, gustura gaude
penak haizatuta,
hontzaren uluekin
arras xarmatuta,
hustu ditugulako
kartzelak batuta,
ortzia dakusagu
izarniatuta.

*2019ko uztailaren 28an*

873

## Donald Trump yanki ahozabala

1

Donald Trumpek aurreko presidenteek lez
mundua bere mendean hartu nahi luke.
Custer jenerala beste arrazista,
handikia, atzerakoia eta matxista,
migratzaile pobreak ituan jarrita
supremazista eta bortitza,
harresi erraldoiarekin tematuta dago,
hegoaldetik nekez sar daitezen.
Hor nonbait ahaztuta historia,
europar basati haien balentriak,
ez du esaten afrikarrak bahitu zituztela
esklabotuta saltzeko, edo kotoia ekoizteko,
indioei lurrak tiroka ostu zizkietela
urre gutiziagarriak eskuratzeko,
gaur egun, Venezuela, Ipar Korea, Iran... etsaiak,
arma olak sustatzeko aitzakiak.

2

Trump musu gorria harro Etxe Zurian,
bertatik edonon bere arauak ezartzeko,
eskuindar zaharrak xedea lortuta
ondo daki dirua boterea dela,
berarentzat mundua estatubatuarrena da,
kalbinismoaren jainkoak diolako,
inperioen sinesmen bakarra
herri ahulei ondasunak kentzea.
Trumpekin kaosa gertu dagoela diote,
gerraren hondamendia eta pobrezia,
politika liberalak sufrituta,
ez gaude paradisuan, ordea,
ile horiaren lakoak garai ditzakegu,
feminismoarekin patriarkatzak irenduta,
bizitza berdintasunean eratuta,
demokrazia eta elkartasuna mardotuta.

*2019ko abuztuaren 4an*

874
**Udan zuekin laket oporretan**

1
Uda joria hasi
denez barruetan,
zuekin atseginez
gaude oporretan,
horri esker zirriak
datoz postaletan,
zirrarak gutunetan,
lerro zintzoetan.

2
Mundua ikusita
foto ederretan,
arimak hegan hasten
dira leotzetan,
uda sua izaten
denez sanjuanetan,
zuekin kantuz ari
gara gaupasetan.

3
Oporretan gaudela
diogu txantxetan,
etzaten garenean
lastairatxoetan,
Lesakan laket gaude,
gaur, sanferminetan,
eta bihar, edozein
herriko jaietan.

4
Elkartasunak ez du
bakantzarik hartzen,
plaietan gure alde
zarete elkartzen,
zuei esker gara
txosnetan batzartzen,
ez zaigu leotzean
etsipena sartzen.

5
Zuekin goiz-argian
dugu bidaiatzen,
kartzelan udaldia
ederki pasatzen,
kafearekin hasten
gara antolatzen,
zein kirol mota egin
gustura mintzatzen.

6
Kordoban dagoenez
oskarbi zerua,
oporrak udan sarri
dira infernua,
guk egunero zaintzen
dugunez ortua,
patioak dirudi
oasi freskua.

7
Oporrak onak dira
nahiak idazteko,
giza eskubideak
herrian pizteko,
gatazkaren sastrakak
errotik mozteko,
zuekin bat eginda
barrua uzteko.

8
Noizbait abiatuko
gara lurraldera,
zuekin askamena
jator ospatzera,
maitea zugana joan
nahi dut Eibarrera,
udak erabat goza
ditzagun ostera.

*2019ko abuztuaren 4an*

875

**Kordobako uda sargoria**

1

Kordoba berrogei gradura helduta
esparruan ondoeza arimetan,
errezela leihoan jarri bezain azkar,
ziegak Urkoko koba dirudi,
termometroa labean lehertuta
sapari kemenez aurre degiot,
haizegailua piztuta jiraka hasita
larrua modu onean freskatuta,
arratsa ondo profitatu dut
elkartasunaren gutunei erantzuteko.

2

Ekiaren izpiak aurrera iritsita,
bertan dagoen hormatzar grisera,
porlanaren beroa ziegan sartuta
sena giro kiskalgarriaren mende,
begien betazalak jaisten hasi ahala
mahaian sorgortzen hasten naiz,
zorionez, zuekin oroituta
infernua Arrate bihurtzen da,
haizetxo leunak esnatzen nau,
zuentzat sorkuntza idatz dezadan.

*2019ko abuztuaren 11n*

876
**Presoak eta kurloiak**

1
Kartzelan kurloien elkarrizketak
algara goiztirietan,
txioka aldiro dioskute,
“gu libre bizi baikara”,
nahiz gu lez, hormen barruan egon
etxartetik maiz alde dagite,
une horretan korrikan hasten naiz
uxatzeko etsipen petrala.
Hormaren gainean pausatuta
kurloiak airea aztertzen,
harrapari gosetuak
arriskutsuak direlako,
zeru urdina ilunduta
bakearen orduak,
gaua habian igarota
gozoro esnatzen gaituzte.

2

Presoa etengabe ametsetan,
ez ahazteko horma bako bizitza,
kurloiak hegan hasi bezain azkar,
desioa emendatzen zaio,
askatasuna irudikatuta,
udaberria izadian,
bi hego edukiko balitu,
esparrutik ihes egingo luke.
Presook eta txoriek
nahitaez porlana konpartituta,
maiteño xaloek legez,
elkarri luze begiratzen diogu,
kartzela kurloientzat egoitza,
guretzat, berriz, deserria,
horregatik ozenki diotsegu,
"etxean oroituko zaituztegu".

*2019ko abuztuaren 11n*

877
**Sinfonia, ez den usoen urruma**

1
Usoak urrumaka
siestaren orduan,
atzo agertu ziren
itsumustuan,
nahiz eurak erruteko
dauden ibilguan,
jasanezinak dira
etxarte itsuan,
kurloiak murruan,
ezohiko tonuan,
galdera buruan,
nork laga ditu sartzen
gure lekuan?

2

Usoen urrumekin
presoak kexaka,
kirioak dituzte
bor-bor jiraka,
ez dezaten jarraitu
astunek ufaka,
isildu gura dute
txistuka matraka,
baina arrak taka
darrai urrumaka,
emeaz kalaka
aldiro esaka,
“arrautza txitatuko
dugu txandaka”.

3

Bakearen ikurra
ohi den usotxoa,
urrumaka dirudi
soilik eroa,
arrastian digunez
galarazi loa,
bizipoza bihurtu
zaigu gorrotoa,
aizu, hor goikoa
ez izan zozoa,
gurekin godoa,
baizik gu lakoa,
bizitza hemen izan
dadin sanoa.

4
Kartzelak bizitzeko
toki txarrak dira,
usoak joan zaitezte
Euskal Herrira,
libre bizi nahi duten
zintzoen kabira,
noizbait helduko gara
plaza atarira,
harreran pilpira,
soetan distira,
eta gu begira
zirrara arraira,
urrumak iritsiko
dira ortzira.

*2019ko abuztuaren 11n*

878

**Eskuak betiko elkartzeko**

1

Geurean denok jasan
dugu oinaztua,
ez ginelako batu
gaintzeko murrua,
faxismoak kolpeka
piztu zuen sua,
Espainiak hobesten
darrai mendekua.



2

Gure aitormena da
izango irmoa,
zinez kontakizuna
erabat zintzoa,
sistemak ere idatz
dezala autoa,
giroa izan dadin
herrian sanoa.

3
Herrak laga dezala
ohiko desenkusa,
aldiro darabilen
kaltetuen kausa,
ken dezagun gainetik
muzinen harlauza,
bakea pausatzeko
izan dadin gauza.

4
Memoria josteko
behar da argia,
historian bakarrik
sar dadin egia,
ez dakigun, ostera,
gerta lazeria,
elkarbizitzak eman
dezala saria.

5
Gerran bihurtu zenez
bizitza bortitza,
Francoren diktaduran
zorua sasitza,
demokraziak eman
diezagula hitza,
hamaika eskubide
gal dadin zimitza.

6
Demasak jazo dira
gerratik gaurdaino,
zauriak itxi barik
daude oraindaino,
minaren mende heldu
gara honeraino,
txerak on diezagula
goitik beheraino.

7
Eskuak elkartzeko
daukagu gogoa,
gezurrak ez dezala
izorra asmoa,
plazetan izan dadin
zirrara osoa,
batera has gaitezen
prestatzen geroa.

8
Jendarteak sumatu
dezan zoriona,
“bortxak bukatu dira”,
albiriste ona,
presoak karriketan
sentimen sakona,
lokabe izango da
herri hau denona.

*2019ko abuztuaren 18an*

879

**G7 deitora dezagun**

1

G7 taldea Euskal Herrira dator
Lapurdiko Miarritzen bihotzera,
tamalez, ez dira rock musikariak,
gose eta pobreziaren errudunak baizik,
abuztuan dena aztoratu eta dirutza xahutzeaz gain,
herri turistikoa arras militarizatuta,
goi-gailurren Macron, Trump eta enparauak zainduta,
euskaldunok maiz lez, boterea zer den jakin dezagun.
Miarritzen suntsitzaileak bilduko dira,
Txina, Errusia... besteko Ama-Lurren bortxatzaileak,
ekonomia jasangaitzaren sustatzaileak,
gerra ugariren bonben saltzaileak,
Irun eta Hendaian, berriz, sentimentalak kanpalekuan
alternatiba aurkezteko mundua salbatzeko,
sistema kapitalista galtzeko lanabesak
auzolana eta elkartasuna.

2
Munduaren %10ak inposatu nahi dio
%90ari orden ekonomiko liberala,
estatu askotan euren lakoak daude, ordea,
hegoaldeko lurraldeen ondasunak osteko prest,
eurak direlako lurrikara eta itsasikara,
besteekin hantusteak adina bortitzak,
gizateria eurei begira kezkatuta esaka,
“ekidin dezagun hondamen nuklearra”.
G7koek Nazio Batuen Erakundeari sarri muzin eginez,
neurri sozial kaltegarriak edonon ezartzen,
eurentzat giza eskubideak
dirua baino gutxiago balio dute,
euskaldunok eta solidario internazionalistek
gizatasuna zer den erakutsiko diegu,
gizaki zintzoak utopikoak garela,
feministak, inperialistak bezatzeko.

*2019ko abuztuaren 18an*

880
**Ongietorrira sentiera delako**

1
AVT-k mututu
nahi du irrintzia,
eratzen diguzuen
ongietorria,
gatazkak jarrai dezan
ekoizten sasia,
ilun dadin gure zain
daudenen bisaia.



2
Loza jauna, joan zaitez
arin pikutara,
konponketaren alde
zintzo ari gara,
astero goazenez
urrun kartzelara,
itzela izaten da
joatea plazara.

3
Ez diezagula herrak
ken ilusioa,
ikusteko lokabe
herriko presoa,
sufritu duelako
zigor potoloa,
kartzela politika
erabat gaiztoa.

4
Jarri, edo ez, bere
buruan txapela,
pil-pil goza dezala
arimen epela,
azkar hustu dezagun
kartzela ustela,
ez dugu laztanduko
kidea bestela.

5
Ongietorrietan
giro atsegina,
Hernanin ta Oñatin
arindu da mina,
bengantzak deitu dio
pozari iraina,
ikusi duelako
hainbat ikurrina.

6
Ezarri nahi diote
nahiari hesia,
preso ohiari ostu
lagunen irria,
kaleetan harrera
izan zen arraia,
ondoeza bihurtu
zelako zoria.

7
Presoek eman zuten
urratsa batera,
behingoz senda genezan
hainbeste galera,
ongietorri duina
denez sentiera,
txit senti dezatela
herritarren txera.

8
Irrintziak zeharka
dezala zerua,
barruetan gogora
dezagun soinua,
Eibarren gura nuke
aditu oihua,
berdin *Zain dago ama*, [1]
kantu ospetsua.

*2019ko abuztuaren 25ean*

---

[1] *Imanol Urbieta zenak sortu zuen.*

881
**(1919-2019)**
**Ehun urte iluntasuna argitzen**

1
*Zeruko Argia*-tik *Argia*-ra,
XX. mendetik XXI.era,
sugarretik zohardira
Euskal Herri ahula suspertzen,
antzinakoa eta gaurkoa
enbor bereko bi ezpal,
ehun urte euskaraz idazten,
kultura letra larriz sustatzen.
Zaharra izan arren, gaztea,
jendarte berria ikusteko leihoa,
objektiboa artikuluen lerroetan,
elkarrizketa mamitsuetan,
ekologista, internazionalista, berdinzalea... beste,
feminista giza eskubideak lez,
gure askatasunarentzat izarra,
bakearentzat adiskidea.

2

Argia maite zintudalako
zurekin harpidetu nintzen,
Mariren deia sentituta
euskara batua hobetzeko,
zure orri leunak irakurrita
gogoan bor-bor pizkundea,
oporretan izan ezik, gu beti batera,
hain ederra zen zurekin egotea!
Tamalez, banandu gintuzten
bi milagarren urteko urrian,
nahiz zu gabe urtetan egon,
ariman zinez iraun duzu,
solidarioa zarelako,
gaur egun, ziegan astero batzen gara,
etxean gurekin biziko zara,
harmonian euskal prentsarekin.

*2019ko abuztuaren 25ean*

882
**Emozioa: estimuluak mugimendua dakar**

1
Emozioa delako
ekintzen ifrentzua,
auzolana izaten da
euskaldunon zentzua,
estimuluak duenez
zertzen mugimendua,
putz dezagun izan dezan
bakeak zimendua.



2
Emozioa sustraitu
nahi dugu jendartean,
elkartasuna gogotsu
erein mugen artean,
hesiak kentzeko gure
ta besteen artean,
arrazismoa gal dadin
Kantauriko partean.

3
Emozioa desager
daitezen pobreziak,
beregaz saihets ditzagun
gerraren maleziak,
haurrek ez ditzaten jasan
gosearen geziak,
baizik berdintasunean
jan lasai gereziak.

4
Emozioa behar da
herria eratzeko,
ongizatea lortuta,
arimak ondratzeko,
euskara eta kultura
mardulik loratzeko,
elkarbizitza plazetan
berbekin ernatzeko.

5
Zirrararik ederrena
feministen mimoa,
bizitza idealaren
gaurko sinonimoa,
ezin delako onartu
matxisten faxismoa,
patriarkatzen habea
den kapitalismoa.

6
Zirrara sentimendua,
sarritan maitasuna,
txit laguntzen digu izan
gaitezen ontasuna,
herria, berriz, da zikintzen
gaituen lohitasuna,
mendekua lez, estatu
egoisten tasuna.

7
Zirrararen eraginez
elkar dugu maitatzen,
zoragarriro plazera
naro digu opatzen,
bihotzak taupaka ohi dit
desira kitzikatzen,
leotzean naizenean
zurekin gogoratzen.

8
Zabaldu genuenean
ongiaren leihoa,
zirrara sanoa izan
baitzen sentsazioa,
ondo irten zen presoak
ekartzeko saioa,
munduak aditu zuen
hurkoen lekaioa.

*2019ko irailaren 1ean*

883
**Open Arms-ek faxismoa gainditu du**

1
Mussolini eta Salvini errima arraioa!,
lehengo eta oraingo eskuindarren gidariak,
zaharrak badakigu orduan zer egin zuen,
berriak gaur egun, auskalo zer egin dezakeen,
partisanoen xedea bigarren gerra mundialean
Italia faxista barik uzteaz gain, berdintasuna,
faxismoarena, aldiz, diktadurari eusteaz gain,

ukatzea gizateria talde bakarra dela.
Open Arms Lampedusaren aurrean
migratzaile sufrituak lehorreratu ezinik,
horren errua Salvini bihozgabearena
gizatasuna urperatzeko aginduta,
ez duenez gobernu italiarrak kanporatzen,
ezta Bruselak alternatibarik aurkezten ere,
faxistak elkartasuna hankaperatuta,
afrikarrak marinelak lez, itsasontzian kinka larrian.

2

Mussolinik faxismoa orain dela ehun urte eratu zuen
nazionalismoan, korporatibismoan... oinarrituta,
*ducea*, diktadorea, Italiako burua zen,
herritarrek obedientzia zor zioten,
Salvini oraingoz, ez da hain gora heldu,
baina faxistek, frankistek, naziek... bat egin dute,
Europako giroa usainduta
herritarrok erne egoteko beharra daukagu.
Mediterraneo itsasoa, berri txarren irudia,
Open Arms, Ocean Viking, Aita Mari... hoberena,
Lampedusako eta Siziliako hainbat alkate ongileak,
faxisten lazeria gaintzeko esperantzaren aleak,
txerak arrazismoari aurre degio,
desobedientzia kementsuak faxismoari,
Open Armsek gizakiak lehorreratu bezain azkar,
Salviniren geroa iluntzen hasi da.

*2019ko irailaren 1ean*

884

**Amorrua bezatu atsegina izateko**

1

Nortasun pipertua
nahi dut gezatu,
esateko gerora
pozik naiz esnatu,
gogoak aldaketa
dezala gidatu,
amorrua dezadan
tinko menderatu.



2

Ekaitza zaidanean
kokatzen buruan,
ez dago atseginik
nire inguruan,
mingaina bihurtzen da
iraina orduan,
aritzen naizelako
ergelen moduan.

3
Nahiz ez naizen zuekin
egoki portatu,
maite zaituztedala
nahi dut deklaratu,
makina bat aldiz
naiz ziplo ernegatu,
bizipoza sututa
dizuet pitzatu.

4
Joan zirenak nahi ditut
jator ohoratu,
eurekin ontasunez
gura nuke batu,
hurkoei arima
nahi diet xarmatu,
hitzekin onginahia
bertan leun ziztatu.

5
“Arnasa sakon hartu
hira itzaltzeko,
eztarriko orroa
garaiz estaltzeko”,
kide minek dioste
kinka gozatzeko,
jenio basatia
arin bezatzeko.

6
Ezin zara aritu
nahia inposatzen,
ideiak defendatzen
zakar oihukatzen,
horixe ohi didate
lasai deitoratzen,
nahitaez direnean
nirekin tristatzen.

7
Gera dakizulako
ospea herrena,
ez zaitez haserretu
erauzi eztena,
bihotzak sufri dezan
kartzelan herena,
ohean har dezazun
ongi atsedena.

8
Ongarritu gura dut
senaren habia,
ez dezadan, ostera,
ilun iritzia,
terapia bat izan
daiteke irria,
musuan sustrai dadin
aldarte arraia.

*2019ko irailaren 8an*

885
**Loiolako Iñazio**

1
Zu, Loiolako Iñazio, Iñigo edo Ignacio zara
herritarren sentieraren arabera,
sehaska onean jaio baitzinen,
Gaztelaren aldeko etxe loriatsuan,
Avilako Arevalon ezkutari leiala
ezpata iaiotasunez erabiltzeko,
errege katolikoen aholkulariak
jauregian aterpetu zintuen,
kristau erlijioan buru belarri sartu aurretik
gazte oldarkorra beste lizuna zinen.

Zure etxekoek lez, Gaztela handitzeko
Nafarroako konkistan parte hartu zenuen,
zuretzat frantsesak omen ziren,
zu bezalako euskaldunak,
Iruñean zaurituta Loiolan luze larri,
ohean santuen bizitzak leituta Josu miretsi,
zure etxekoen eta beste batzuen erruz,
euskara azken bostehun urteetan urritu da,
herkideok mendetan gorriak ikusi ditugu,
erbesteratu, itxi, zein hil gaituzte herria maitatzeagatik.

2

Santu izena aspaldi eman zizuten
Josuren soldadua izateagatik,
Erromara, Jerusalemera joan zinen
zure arima berria jainkoari eskaintzeko,
Josuren lagundia sortu zenuen
Xabierreko Frantzizko eta enparauekin,
munduan jendeak kristautzen aritu ziren, eta aritzen dira,
Ellakuria El Salvarroren pobreak babesteagatik hil zuten,
zuk, lazeria ezagutu arren,
Loiolan zu ondratzeko basilika luxuzkoa.

Erreformaren aurka jardun beharrean,
zergatik ez zenuen inkisizioa gaitzetsi?
Xabierreko Frantzizkok inoiz deitoratu al zizun,
Nafarroan iraganean egindakoa?
Zerk bultzatu zintuen, Karlos I.ari eta Felipe II.ari
turkiarrak azpiratzeko gerran aholkuak ematera?
Kontrarreforma sutsuki hedatzerakoan
jaioterria gogoan al zeneukan?
Hil aurretik inperialisten kide izan zinenez,
zure santutasuna zuzena baino makurra dela diotsut.

*2019ko irailaren 8an*

886
**Gure Eibar nabarra**

1
Nire eta zure Eibar
gure izan dadila,
aniztasun oparoa
gidatzeko makila,
harremana izan dadin
plazetan biribila,
goizero gosal dezagun
zoriaren opila.



2
Eibar, ez da antzinako
herri xarmant zaharra,
San Andresen kerizpetik
haziko zen meharra,
aspaldi bihurtu baita
hiri kutun nabarra,
baserriek ta kaskoak
janzten dute ibarra.

3
Arrate oro delako
eibartarron altxorra,
zintzoki zaintzea gure
betebehar jatorra,
ez dadila inor izan
pagoekin lehorra,
umeek maita dezaten
Ama-Lurren alorra.

4
Amaña, Legarre, Urki,
Urkizu, Ipurua,
Aginaga, Mandiola,
Untzaga, Markeskua...
ederki hedatzen dute
*Eibar* espiritua,
lehen legez, entzun dadin
eibartarren doinua.

5
Lantegiek laga bezain
azkar ibar txikerra,
merkatalguneek bete
dute haien bazterra,
eraldaketa zinez zait
iruditzen ugerra,
beharra izan delako
gure arte ederra.

6
Kirolak, ez diezagula
zokoratu kultura,
erabat hobe dezagun
daukagun egitura,
sorkuntza izan dadila
futbola lez, aztura,
euskararekin batera
herritarron lotura.

7
Eibarren, ez dezagun utz
hazten arrazismoa,
faxismoak, ez diezagun
izorratu geroa,
feministen ideala
ongiaren hostoa,
bat eginda isiltzeko
matxistaren laidoa.

8
Eibar, ontasuna beste
zara elkartasuna,
herritar duinen arteko
adiskidetasuna,
izan zaitez auzolana
xaloki euskalduna,
ongizate naturala
zertzeko ahalduna.

*2019ko irailaren 15ean*

887

**Gure ideologia konparti dezagun**

1

Laino hezeek Urko estali dute,
mendebalarekin euria ari du,
ezkortasunean amilduta,
ideia ilunetan galdu naiz,
bat batean atsekabetuta esan dut,
“euskaldunok ez dugu zereginik”.
Arratera egun argietan igotzen naiz
eguzkiaren izpiekin hausnartzera,
kinka larriaren zioak ulertzeko,
arima zaurituak sendatzeko asmoz,
deserriko minek lez, estatuen mende darraigu,
kemenez eurekin berriro batuko gara.

2

“Gure ideologia egokia da”,
hurkoei kale kantoietan diotset,
indibidualismoa hazi delako,
herritar asko, ez da gugana hurbiltzen,
kapitalismo basa gainditzeko
auzolanean sinesten darrait, ordea.
Arraten sarri lez, pentsatu dut,
“komunikatzeko mintzatzea falta zaigu”,
“ideiak hobeto trukatzeko herritarrekin
plazak atseginez konpartitu behar ditugu”,
hiri aldera soa zuzenduta,
Untzagara jaisteko oinez hasi naiz.

*2019ko irailaren 15ean*

888
**Errefuxiatuen drama Europako ertzetan**

1
Europak gizatasuna lurperatuta
errefuxiatuak zokoratuta dauzka,
negu gorrian eskas jantzita,
muga blindatuetan trabatuta,
gerratik ihesik joandako jendeak
gosea eta hotza pairatzen.
Kanpalekuetan gizakiak basatzaren mende,
hustutako oletan, berriz, osasuna galtzen,
goizero zerura dardarka begira
ekiaren printzak sentitzeko zain,
*Zaporeak*-ek, *Aita Mari*-k... artatzen dituzte
otorduak, jantziak... musu-truk banatzen.

2
Irudi gordinak ikusita
ikaratuta geratu zara,
dramarekin bihotza uzkurtuta,
“kartzelan hobeto nago”, esan duzu,
asaben nekeak sarri entzunda
orain ziegatik dakuskizu.
Iheslariak azken bi mendeetan izanda,
eta gaur egun, nahitaez garelako,
kinka bidegabea iraultzeko,
“eskuak luza ditzagun”, diozu,
“gerrak eragindako zauriak
txerarekin senda diezazkiegun”.

*2019ko irailaren 15ean*

889

**G7aren hobenak**

1

G7 boteretsua
Miarritzen da bildu,
ankerrek alternatibak
nahi dituzte maspildu,
ez dugunez nahi Lapurdi
dezatela kikildu,
ez gara euren aurrean
bihoztunak isildu.



2

Ekonomia makurrak
hondatzen du natura,
bidegabe barreiatzen
edonon kutsadura,
ekologia landuta
zer dezagun onura,
ez deizaion Ama-Lurri
zatar bere itxura.

3
Kapitalismoa denez
betidanik eria,
utopikook nahi dugu
konpondu aberia,
ihintzak blaitu dezala
gure gizateria,
berdintasunak ekinez
gal dezan lazeria.

4
G7, G20 eta
halako enparauak,
eraldatzen ari dira
feministen mezuak,
hauek soilik direlako
matxisten ereduak
moreok haiza ditzagun
patriarken arauak.

5

G-Zazpiki, ez zaitzala
petrolioak ero,
ez gaitzala berriz zure
indarkeriak bero,
jendarte lar egoista
senda dezagun gero,
kontsumitzen has gaitezen
tink kilometro zero.

6

Kapitalismoak ditu
faxismoak bazkatzen,
herriñoen ondasunak
lapurtzeko sustatzen,
Hitlerrek zoru oparoak
hasi zen seinalatzen,
diruak laguntzen zion
besteak akabatzen.

7
Gerrak du kapitalisten
nortasuna islatzen,
armak ekoitzita dute
fortuna emendatzen,
misil guztien auzia
has gaitezen zerratzen,
gaizkiaren industriak
banaka deuseztatzen.

8
G7, zank, bihur zaitez,
txit solidarioa,
zinez bestea betiko
izan dadin hurkoa,
gosea gaindi dezagun
halaber gorrotoa,
pobreziaren zioa
den kapitalismoa.

*2019ko irailaren 22an*

890

## Ongietorriak espe eta iheslarientzat

1

“Espeok askatasunaren eguna iruditzen dugu”,
*Gara*-n espe ohi batek idatzi zuen,
“plazan herritar zahar eta gazteak agurtuta,
senti dezakeguna sumatzeko”.
Ongietorriak zirrarak kitzikatzen ditu
deserritik itzulitakoak ikusita,
joan ziren minak hunkitzen,

gure bihotzetan bizi direlako.
Espea zein iheslaria herriratuta
hurkoen bizipoza naturala,
ikurrinak haizeak kulunkatuta
txaloek giro goria janzten dute,
ez ditu nahi inork biktimak umiliatu,
biktima izatea zer den dakigulako,
estatu espainolak maltzurki darabiltza
gatazkaren demokratizazioa ekiditeko.

2

Erakundeak borroka utzi arte
ongietorriak arazo barik genegitzan,
Aieteko bide-orria adostu bezain azkar,
AVT une ederrak salatzen hasi zen,
azken harrera duinekin gezurretan ari da
haserrea antzeztuta debekua lortzeko,
aitzakiak asmatu barik gorrotoari eusteko
enpatia lant dezala zauriak osa daitezen.
Sentimendua ezin da isilarazi
urtetako arimen nahia pitzatzeko,
espeak eta iheslariak zokoratuta
elkarbizitza eta bakea urruti,
ongietorria, ez delako bortizkeria,
kaixo esan sufritu duenari baizik,
inoren ohorea zikindu barik
gutarrei irri eztiak oparituko dizkiegu.

*2019ko irailaren 22an*

891
**(1975). Irailak hogeita zazpi**

1
Irailak hogeita zazpi,
zuekin naiz oroitu,
memorian lez, zaitezten
historian sustraitu,
zuen izenak hegoak
murmurikatu ditu,
krabelinen usain onak
arimak txit hunkitu.



2
Gudari Eguna oro
baita sentimendua,
konpromisoa isurtzen
ohi duen ekandua,
zuen heriotzak senti
ditzagun momentua,
bake zuzena zelako
zinez zuen itua.

3
Ondraren egun duinean
zuekin zutituta,
irrintziarekin gure
bihotzak gorituta,
herria ia dugunez
laga ongarrituta,
dakuskigu zuen izar
gorriak bizituta.

4
Sarritan diotsuegu,
"zuekin bizi gara",
trintxeratik hausnartuta
heldu gara plazara,
zuen ideologiak
jantzi zigun ganbara,
pilpiraka iristeko
independentziara.

5
Gu zuekin hasi gara
bidean aurreratzen,
urratsak sendo emanez
ataka oneratzen,
nahiz apustua zaila den,
ez baikara trabatzen,
herra gaintzeko gabiltza
hesiak ezabatzen.

6

Demokrazian uztartuz
gatazkaren afera,
ezbai barik joango gara
hurbiltzen erpinera,
kalean izan dezaten
idealek harrera,
eman eta hartu izan
dadila jokaera.

7
Izan zinetenez, ez da
galdu Euskal Herria,
noizbait gurekin duzue
adituko berria,
“bengantza hustu dugula,
espetxe mingarria,
giza eskubidez bete
zapalkuntza larria”.

8
Amaiurren arnastu dut
arbasoen auhena,
Gernikan, Angelun... egin
zinarik zintzoena,
“buka dadin mendetako
jazarpen alaena,
zuekin zertuko dugu
herririk askeena”.

*2019ko irailaren 29an*

892

**Gure *Getariko* Juanita Goikoetxeari**

1

Juanita, zu Getarian mardul jaiota,
Goikoetxea sendian enegarren lilia,
umetan pozarren osteratxoetan
berdela, antxoa, hegaluzea... usainduta,
kontzientzia gaztetan ernatuta
Euskal Herria askatzea zure xedea.
Gerora guardia zibilek atxilotuta
tortura latzak pairatu,
libre geratu bezain azkar
duintasunez salatu prentsaren aurrean,
preso eta iheslarien alde buru belarri
bidea egiten jarraituko zenuen.
Juanita, Eibarren bizi izan zinen,
Elgoibarren Danobaten beharrean aritu,
nik Untzagan ezagutu zintudan
elkarretaratzeetan, manifetan...,
torturen kontra beti jarduteko prest
zure testigantza zirraraz eman zenigun.

2

Juanita, sasoi betean zeundenean,
San Anton, Kaia, Makorbe, San Prudentzio... leku kutunak,
Elkano eta Balentziagaren herrian
arrantzaleak eta baserritarrak bezain getariarra,
orain zahartzaroan ajeekin,
sendatzeko asmoz Donostian zaude.
Plazan deserriko minen aldekoek diotsute,
"gure Juanita onik itzul zaitezela",
altxorrak argazkietan estimatuta,
herkideak zeuri esker ezagututa,
ziegan hori bera opa diotsut.
Nire desira zu berriz ikustea,
askatasunean zurekin elkartzea,
kaiatik Kantauri itsasoa eta Zarautz agurtuta
penak eta pozak kafea hartzen konpartitu,
urrian hegoarekin oskorria dastatuta,
txakolinaz topa egiteko gero, joan zirenak omentzeko.

*2019ko irailaren 29an*

893
**Tio Ibonek iloba Iraia doktoreari**

1
Oi, Iraia *Cum laude*,
zara, doktorea,
argitaratu duzu
tesi dotorea,
liburua delako
lanaren orea,
niretzat jasotzea

baita ohorea.

2
Iraia, atzo entzun
nuen albistea,
xedea duzulako
gauzatu maitea,
hausnartzen ta idazten
emanda urtea,
zoriak jo du gure
etxeko atea.

3
Jakintza baieztatzen
une serioan,
sei katedratikoak
arretaz alboan,
ostadarra delako
piztu aretoan,
zu, aitxa, ama, Ugaitz...
pozarren Leioan.

4
Amama Antoni da
zurekin hunkitu,
joan zitzaizkigunak lez,
biziki alaitu,
zure musua baita
ederki gorritu,
niri, berriz, ziegan zait
arima lilitu.

5
Iraia ikertzaile
ta euskaltzalea,
Enekogaz gogotsu
mendigoizalea,
tesia aurkezteko
finki langilea,
etxeko ilusio
onen egilea.

6
Iraia daukazunez
garuna hezia,
buru-eskaintza egin
zaizu gerezia,
zoragarriro gaindu
duzunez tesia,
ahaztu dut kartzela
dela harresia.

7
Iraia, izan zinen
lehenen izarra,
zurekin hedatu zen
etxean aparra,
oraintxe zara gure
irrien zuztarra,
halaber eredua,
nahiaren indarra.

8
Iraia, bertso-sorta
nire oparia,
saritzeko zuk egin
duzun balentria,
ziegan zara asetzen
nauen iturria,
amets dirdaitsuetan
ñirñirka ortzia.

*2019ko urriaren 6an*

894

**11/13 auzia: berrogeita zazpi duinen eredua**

1

Bilbon irailaren hamalauan nahiaren manifa,
mendetako gatazka demokratiza dadin,
11/13 auzi makurra lurruntzeko,
ez ditzan bengantzak auzipetuak epaitu,
espaloiak eta errepidea jendez mukuru,
ez delako zilegi Espainiaren jarrera,
berrogeita zazpi zintzoak txaloak dastatzen

bat eginda epaiketari aurre egiteko.
Irailaren hamaseiko goizean, epaimahaia
ia osatuta Auzitegi Nazionalean,
auzipetuak aurrean serioski eserita,
fiskaltzari eta abokatuei begira,
konturatu orduko epaiketa bukatuta
gezurrezko hobenak onartu dituztelako,
bi izan ezik, ez duelako inork kartzela jasango,
salan guztiak sentimendu ederrez blai.

2

Zazpiretan ilun esnatu naiz irratian entzunda,
“Gaur, ETAren kontrako azken makroepaiketa”,
bidegabe epaiketa hasi aurretik
berrogeita zazpi duinak zigortu dituztelako,
kideak eguerdian, teletestua leitu bezain azkar
berarekin poza leihotik konpartitu dugu,
kazetari espainol askok, ez dute ezer aipatu,
gure berri onak eurentzat beti txarrak.
Biharamunean kideok atseginez
ostadarra etxartean ikusita,
auzipetu ohientzat jai eguna
etxekoekin ospatzeko dramaren amaiera,
auziak ekaitza bortitza zirudienean,
oskorriak oraina eta geroa hobetu ditu,
Jon! Arantza!, ildo berrian kemenez jarraituko dugu,
zuen gaurko urratsa, biharko askatasuna izan dadin.

*2019ko urriaren 6an*

895
**Gure ereintzak ekar dezan uztaroa**

1
Aizu atsekabean
zarenez amildu,
irail epelean zait
kemena hotzildu,
ezin izan dut zure
negarra isildu,
arren, txerak gaitzala
goiz-argian bildu.



2
Zu ezin lagunduta
kezkak nau kolpatzen,
estresak horrela dit
gorputza nekatzen,
ez direlako gure
desirak gauzatzen,
zer egin zure alde
ari naiz pentsatzen.

3
Gaitzagaz gaizki ari
zarenez bizitzen,
nahitaez hasten zaizu
burua etsitzen,
zure ahotsarekin
beti naiz hunkitzen,
iruditua zure
malkoak larritzen.

4
Sarri diotsut dela
kartzela tristura,
zu urruti egonda
zingiraren ura,
zugaz izadia zen
niretzat onura,
*Lagun* gugaz alboan
aisia lilura.

5
Ez zaudela bakarrik,
diotsut laztana,
moztuko diogula
gaitzari buztana,
zinez ederra izan
zelako izana,
hori da nire eta
hurkoen esana.

6

Bizigura etortzen
denean behera,
kitzikatu behar da
grinaz sentiera,
ametsetan joaten naiz
ohatze leunera,
zure bizkar mindua
maitez sendatzera.

7
Sapa gaintzeko behar
dugu abaroa,
gure bizitza bihur
dadin uztaroa,
itzul dakigun, berriz,
irrien aroa,
mardul zaitezen udan
adina garoa.

8
Datorren urtean naiz
etxean sartuko,
eser gaitezen ditut
aulkiak hartuko,
geroa eratzeko
gara batzartuko
ongizatean biok
gozo uztartuko.

*2019ko urriaren 13an*

896

**Moncloan bizi den *Ez* jaunari**

1

Espainiako *Ez* jauna, aitzakiarik ez,
herrien alde urratsak emateko,
erabakitzearen larraina ereiteko,
konstituzio zurruna malgutzeko,
bankarien boterea deuseztatzeko,
jendartean ongizatea zipriztintzeko.
Giza eskubideak ezin dira ukatu
erreformisten konstituzioaren izenean,
demokrazia, ez da trabak jartzea,
baizik herriari hitza ematea,
ezin dituzu xedeak galarazi
monarken garaipenetan oinarrituta.
Nahiz konstituzioan, ez den dena txarra,
artikulu aurrerakoiak, ez dira burutzen,
militarren sableek idatzi zutenez,
gure askatasunentzat gerruntze estua,
horrela ez dago bakean bizitzerik,
herrien arteko txera sentitzerik.

2
“Ez!”, diotsezuz, herriñoen nahiei,
armadarik, ez daukaten horiei,
zure kartak markatuta dauzkazunez,
zu beti, joko tranpatian garaile,
ez konpontzeko euskal presoen afera,
frankistek lez, Espainia inposatzeko.
*Ez* jauna, ausardiaz, *Bai* egin zaitez,
Europa herriekin zuzena izan dadin,
mehatxuak adorez haizatzeko,
gurekin gatazka demokratizatzeko,
migratzaileen beharrak asetzeko,
arrazistak lur barik lagatzeko.
Euskal Herrian zeuri begira gaude,
Euskal Bidea urratzen jarraitzeko,
Aieteko itunak zortzi urte bete ditu,
bada garaia bide-orria osa dezazun,
mendekua eta herra desager daitezen,
euskaldunok beldur barik geroa ehun dezagun.

*2019ko urriaren 13an*

897

**Grina espeak askatzeko**

1

Grinaren olatuak
murruak gaintzeko,
kideei musu-truk
poza eskaintzeko,
bengantzari indarra
behingoz erkintzeko,
lepoan gatazkaren
zama arintzeko.



2

Espetxeak husteko
pitz dezagun grina,
gaurko zirina egin
dadin atsegina,
zirrarak dir-dir laga
dezala oraina,
senda dezaten espe
minek herrimina.

3
Grina barik, ez dago
burutzerik plana,
berdin bilakatzerik
labarra harana,
espeek utz dezaten
betiko oihana,
ezin da izan gure
arima otzana.

4
Esperantza ez dadin
gera ilunkara,
euren alde grinaz blai
arituko gara,
giza kateak osa
dezala ilara,
enarak hel daitezen
libre habiara.

5
Grina eta kemena
gal dadin tristura,
bakearen ontzia
dezagun aingura,
espeak askatzea
delako ardura,
zintzoki lant dezagun
borrokaren zura.

6
Grina ta maitasuna
dabiltza batera,
herriko duinak joaten
dira ikustera,
maiz diote kalera,
espeak etxera,
gure artean bizi
daitezen atzera.

7
Astero goazenez
grinaz urrutira,
herkideak gurekin
itzuliko dira,
oro senti dezagun
plazetan pilpira,
txaloka ikus euren
begien dirdira.

8
Grinagaz diguzue
zigorra eztitu,
bisitan zuen txerak
aterpetzen gaitu,
maitez diotsuegu,
"zintzoki segitu",
udaberriak ditzan
bihotzak goritu.

*2019ko urriaren 20an*

898

**Suteak saihesteko arbasoen eredua**

1

Sua tamalez, etsai madarikatua udan,
Baso, taiga... eta oihanetan,
Siberian, Amazonian, Galizian... nonahi,
Ama-Lur garren artean garrasika.
Siberian taiga itzela urrituta,
Amazonian eremu asko kiskalita,
Galizian gaizkileen erruz hainbat mendi biluzik,

Euskal Herrian Tafallan azken erreketa handia.
Siberian ustez suteak naturalak,
ekaitz lehorren eraginez zertuta,
Amazonian, berriz, erantzuleak multinazionalak,
nahita piztu dituzte soja, zura, ganadua... ustiatzeko.
Izadiaren ondasunak erraustuta,
izarbel urdina gris bihur daiteke,
birika handiak belztu ahala,
gure birikak gaixotzen hasiko dira.

2

Amazoniak, ez du gure beharrik irauteko,
gurekin ito daiteke, ordea,
oihan oparoa hauspoa denez,
murriztuko balitz gorriak ikusiko genituzke.
Arbolek karbono dioxidoa xurgatzen dute,
berrituta gero, oxigenoa hedatzeko,
horregatik munduan bizi gaitezke,
ilargian, artizarrean... ostera, ez dira taupadak entzuten.
Bizkaian eta Gipuzkoan lehen mendiak komunalak ziren,
basoak foruen arabera kudeatzen ziren,
foruak galduta, gerrak ordaintzeko pribatizatuta,
baso anitz asko monokultibo bihurtu zituzten.
Suteak saihesteko koniferoak, fagazeoak... partekatu,
aniztasunaz zoruak hezeagoak izan daitezen,
gure arbasoen eredua baliatu,
eguratsa orain baino aratzagoa izan dadin.

*2019ko urriaren 20an*

899

**Estherren mantarena**

1

Esther furgonetan non
zenuen gogoa,
ahaztuta uzteko
manta txit gozoa?
Zuk Mirentxinen duzu
goritu giroa,
desager zedin zure
kezkaren zioa,
bila ibili dira
altxor potoloa.

2

Manta barik biluzik
zegoen ohea,
gauean hotz sentitzen
zenuen etxea,
nahiz ez zen zure nahia
astun izatea,
Mirentxini diozu
eragin nekea,
bor-bor eduki dute
senaren gunea.

3
Mantak Mirentxin batzuk
ezagutu ditu,
irriak eta penak
txeraz konpartitu,
presoen gertukoen
gorputzak bizitu,
kartzelen aurrean da
lasai zain gelditu,
bisitak bukatuta
erabat hunkitu.



4
Mantak ametsak ditu
furgonetan zaindu,
maiteñoek dezaten
mendekua gaindu,
beregaz, ez da inor
bidaian erkindu,
zure jakintza die
haurrei lurrindu,
berdin esperantzaren
ortzia urdindu.

5
Lehen manta samurra,
orain atsegina,
urritu duelako
sendien samina,
Esther logelan egin
dizu iruzkina,
horregatik kemenez
egin duzu zina,
herrira itzul dadin
kide sorta duina.

6
Ziortzak Mirentxinen
zuenez topatu,
zurekin gara Esther
sukaldean batu,
sagardoa edaten
nahi dugu ospatu,
mantarena dezagun
kantuz alabatu,
zoria diezaiogun
elkarri opatu.

*2019ko urriaren 27an*

900
**Catalunya eta Euskal Herria udazken haizetsuan**

1
Udazken haizetsuan ohi legez,
hariztiak biluzten hasi dira,
Auzitegi Gorenaren egoitzan,
zuzentzaren gunea zirinduta.
Altsasuko gazteek dakite
katalan preso politikoek adina,
Espainia inperial genozida,
ez dela inoiz galduko dirudiela.
Euskal Herria eta Catalunya
ustezko epaileekin haserretuta,
Altsasuko kuttunek eta katalan independentistek
espetxean luze jarraituko dutelako.
Pedro Sanchezek ebazpenarekin bat egin eta gero,
Europako estatuen Batzordea isilik,
komunikabideetan bi iritzi,
aurrerakoiena eta atzerakoiena.

2

Pedro Sanchez erakusten ari da,
bere boterearen oinarria errepresioa dela,
euskaldunak eta katalanak
libre nekez biziko garela.
Altsasuko gazte zigortuei
epai frankistaren esentzia berretsi diete,
katalan preso politikoei, berriz,
sedizio delitua lotsa barik leporatu.
Espainiaren batasun etikoki ustela,
demokrazia eta bakearen gainetik jarrita,
Pedro Sanchez ziplo egin da
Felipe Gonzalezen bikia.
Catalunyan kaleak mukuru eta gorituta,
Euskal Herrian elkartasunaren unea,
giza eskubideen hosto berde mardulek
udaberrian hariztiak bezti ditzaten.

*2019ko urriaren 27an*

901
**Itsasoak ez dezan Zarautz jan**

1
Kantaurik, Zarautz, Hendaia, Ea...
leunki ditu ferekatzen,
itsas kresalak du herritarren
nortasuna elikatzen,
baina mareak eta uhinak
direnean asaldatzen,
atsegina zen itsasoari
bisaia zaio aldatzen.



2
“Zarautz metro bat urpean gera
daiteke hartaratuta”,
berriarekin goizean zara
altxatu dardaratuta,
antartikoan horma lagako
bagenu beheratuta,
Kantaurik laga diezazkiguke
ametsak urperatuta.

3
Kantaurin oro dira Kontxako
estropadak historia,
ipar poloa urtuko balitz
gal dezakete loria,
Donostiak ez ditzan hondora
dirdira eta zoria,
turismo masak ez dezala utz
Parte Za(ha)rra eroria.

4
"Hegazkinetan bidaiatuta
jan gaitzake itsasoak",
manifetan ohi diosku tinko
Greta Thumberg txit xaloak,
munduan dira beregaz bildu
gazte jator aktiboak,
ez diezaien utz etorkizunik
gabe kapitalismoak.

5
Gure garaian klima hasi da
nonahi bero bilakatzen,
lehorteak ta eurite jasak
maiz ari gara pairatzen,
kontsumitzeko eredu txarrak
has gaitezen arbuiatzen,
erregai fosil kutsagarriak
kontzienteki ezeztatzen.

6
Hartz zuriak du haserre esan,
“aizue itoko gara”,
zuek eta guk zuen hobenez
jasango dugu ikara,
egoismoak ia usteldu
duenez gure ganbara,
bihotzak pil-pil senti dezala
ekologisten zirrara.

7
Euskal Herrian nahi dugulako
hil arte bizi gustura,
oreka landuz saihets dezagun
Ama-Lurraren haustura,
metanoa ez dadila lar gehi
aurrerakoien ardura,
Groenlandiak gain dezan izotz
galeraren hedadura.

8
“Ondasun barik beharko dugu
konkistatu galaxia”,
ekonomia jasangaitzaren
patriarken profezia,
bizi gaitezen nahitaezkoa
denez denon izadia,
ozen diogu, “ehun dezagun
utopiaren aldia”.

*2019ko azaroaren 3an*

902
**(2019.10.24)**
**Francoren deshobiratzearen ikuskizun iraingarria**

1
Madrilgo Cuelgamurosko Valle de los Caidosen
Francisco Franco buruzagi izan zena deshobiratu dute,
gobernuak aginduta 1.500 kg.ko granitoa altxatuta,
hobitik gorpu momifikatua aterata.
Diktadorearen ondorengoak haserretuta,
lotsa barik galdetzen, non dauden giza eskubideak?

36.go gerraren eta errepresioaren biktimen hurkoak nazkatuta
ordua zelako kanporatu zezaten.
Orain dela sei hamarkada presoek nahitaez
diktadorea ondratzeko monumentua eraiki zuten,
gerora maltzurki batera hobiratzeko
gerrako garaileen eta galtzaileen gorpuak.
Geroztik falangisten leizea izan da,
eskumako besoa jasotzeko gunea,
bertan munduko faxistak gustura,
ez dutelako inon onartzen halako irainik.

2

Iruñean, *Erorien* monumentuan *Cara al sol* kantatzen zuten,
oraindik, Valle de los Caidosen entzuten da.
Iaz, Iruñeko udalak Mola eta Sanjurjo hobietatik egotzita,
Gobernu espainolak hori oso berandu egin du.
Iruindarrek zer egin ebatziko dute
UPN-k eta PSN-k luze mantendutako eraikinarekin,
aldaketaren Asiron auzapezak ehundutakoa,
kolpisten hurbilekoek ezingo dute saretu.
Inposatutako erreformarekin bat eginda
PSOE-k eta eskuindarrek ez dute urtetan ezer egin,
gaurtik aurrera, Valle de los Caidosen, ordea,
azaroaren 20an, Franco ankerra ezingo dute gurtu.
Falangistek atzealdean hildako askok areketan lurperatuta darraitenez,
biktima haien senideek pilpiraka esan dute,
"berehala beste desioa bete dadila,
gutarren hezurdurei duintasunez lur eman diezazkiegun".

*2019ko azaroaren 3an*

903

**Urria laster alaia izango da**

1

Urrian sartu gara
nire hil tristean,
danba laga ninduten
murruen ostean,
egongo zaretenez
zain irten artean,
alaia izango da
datorren urtean.



2

Kartzelak urratu du
makina bat larru,
bengantzaren zokoa
deitzen da esparru,
gainditu eta gero
hainbeste amarru,
lokabe biziko naiz
hamabi hil barru.

3
Zuen bisitak ditut
biziki eskertu,
arima didazue
txeragaz suspertu,
postal ta letrekin dut
katea ugertu,
sorkuntzekin ederki
negarra atertu.

4
Geratuko direnak
zin-zinez lagunak,
kezkak ez dira izan
euregaz astunak,
bizinahia eskaini
digu maitasunak,
berriz ikus ditzagun
sorleku kuttunak.

5
Maitea maiz naizenez
zugaz liluratzen,
gogoz hasiko gara
geroa eratzen,
nahiz hariak dituen
kartzelak higatzen,
sentiera landuta
darraigu hegatzen,

6

Nahiz eskertuko dudan
hurkoen epela,
Eibarren ezingo dut
ahaztu kartzela,
kideen egoera
delako ustela,
ondo dakit bakea
konponketa dela.

7
Ja hogei urte ditut
itxita konplitu,
gaur, askatasuna dut
zuekin sentitu,
nahiz oraindik ez diren
ametsak hozitu,
espeen alde zaigu
kemena goritu.

8
Nik joan zirenak ditut
zuekin ondratu,
gaur, bihotzean dute
zirrara gozatu,
eurekin zoriona
dugunez dastatu,
txaloka ziplo zaigu
gogoa xarmartu.

*2019ko azaroaren 10ean*

904
**Tsunami Democratic-ri**

1
Esteladak duintasunez soinetan jantzita,
katalan zintzoak egia aldarrika,
Auzitegi Gorenaren epaiaren kontra,
preso politikoen askatasunaren alde,
independentzia helmuga izanik
*Els Segadors* ereserkiak arimak gidatzen,
"Espainia eta Frantzia zapaltzaileak", diote,

"Paisos Catalans gure aberria".
Bartzelonan, Lleidan, Gironan, Tarragonan...
desobedientzia zibila egikaritzen,
Prat aireportua eserita oztopatuz,
errepide nagusiak zutunik moztuz,
herri eta hirietan karrikak mukuru
haserrea kemenez erakusten,
ez delako zilegi estatuaren mendekua
mobilizatzeko erabakia, konpromisoa.

2

Aste osoan altxatuta *Tsunami Democratic*-gaz,
urriaren 14tik 20ra, katalanak motxila bizkarrean,
polizia ezberdinek borrak astinduz pilotak jaurtiz,
Prat aireportuan basaki kolpatu dituzte,
gerora manifa jendetsuen ostean,
hainbat herritarren erantzunak barrikadak sutzea,
Catalunya geurean berririk nagusiena,
borroka deitoratzeko edo goratzeko.
Atxiloketen, zaurituen eta kalte materialen aurrean,
gobernu Espainolaren salaketa hipokrita,
Generalitateak, herri mugimenduak... diotsote,
"gatazka politikoa politikoki konpontzeko",
hitza delako demokraziaren giltza,
Pedro Sanchezek txingarrak itzaltzeko erabil dezala,
Catalunyak bere geroa ebatzi dezan,
erresiñolak habian bakean kantatu.

*2019ko azaroaren 10ean*

905
**Nalua Eibarko talde feministari**

1
Oi, Nalua zu zara
hileko gorria!,
berdin zoragarriro
ilargialdia!,
feminismoa denez
sentimen goria,
patriarkatzak baietz
galdu besaulkia.



2
Nalua zurekin da
grina plazaratu,
hamaikatxo desio
more loreztatu,
iraultzaile gazteak
zarenez batu,
feminismoak Eibar
ia du laiatu.

3
Matxistekin zer egin
aldiro mamurtzen,
kateak dituzue
kaleetan urtzen,
jardunak dituenez
xedeak hezurtzen,
ibarra feminista
ari da bihurtzen.

4
Ametsak dituzue
zintzo abiatzen,
giza eskubideak
tinko defendatzen,
olagarro petralak
jaietan salatzen,
matxistak egiekin
irmoki bezatzen.

5
Hiriaren bazterrak
dituzue blaitu,
berdintasuna dadin
zuzenki hozitu,
Marik zuen ekintzak
txalokatzen ditu,
idealen txostena
duelako leitu.

6
Zuek txera zarete
Ama-Lur bezala,
matxismoaren bortxak
gal dezan ahala,
aniztasunarena
da zuen ezpala,
eraikitzeko denon
oasi jabala.

7
Udaberrian zara
Nalua guria,
zuen foto alaia
baita delizia,
pizkundea delako
batzarretan nahia,
ehunduko duzue
noizbait utopia.

8
Zarelako albiste
onen aierua,
ortzadarrak hobesten
du zure zerua,
arratsetan zu zara
sorgina Nalua,
iretargia beste
ederki alua.

*2019ko azaroaren 17an*

906

**(2008.03.01)**

**Mentxu Etxeberria Elortzari**

1

Oiartzungo Aritxulegi ederrean
guardia zibilak zakar sartu ziren,
salaketa makur bat zela medio,
joan ziren izar gorrien eremura.
Mendekuaren basakeria hartan,
ez zituzten soilik haritzak erauziko,
memoria ezabatzen ahalegintzeaz gain,
errautsen kutxak abaro barik lagako.
Zergatik biktima batzuek dagitena,
ezin dute gure hurkoek egin?
Aritxulegiko ekitaldi xumea,
ez zuten komunikabideetan iragartzen.
Militante hilek lagunak, senideak...
urtean behin basoan biltzen ziren,
etxeko minak batera ondratzeko,
berresteko eurekin bizi zirela.

2

Mentxu, Oiartzunen oroitzan murgilduta
zure etxekoekin zirraraz blai,
*Batallon Vasco Español* parapolizialak
Jokin eta Espe Caracasen hil zizkizun.
Zahartzaroaren ajeekin makalduta
kalean ahizpak lez, irria eskaintzen zenigun,
ez zenuten inoiz gorroto hitza ahoskatu,
zuen nahia guretzat bake zuzena zelako.
Semearen, errainaren, eta zure errautsak,
Aritxulegin hor nonbait kutxan dautza,
nahiz haritzak gaiztoki bahitu,
zelaian urtaroak dastatzen darraizkizuete.
Mentxu, gu bortitzen egintzagatik goibeldu arren,
zure xarma sumatuta adoretzen gara,
gaur zu txeraz omentzeko laztan leunenak,
Oiartzungo basoak lez, gogoan dirauzulako.

*2019ko azaroaren 17an*

907
**Katalan preso politikoei**

1
Pedro Sanchez, dirudizu
espetxearen giltza,
eskuindarrak zure erruz
oso harro dabiltza,
preso katalan zintzoak
estu hartzen zabiltza,
azkar aska itzazula
galdegiten gabiltza.



2
“Preso katalanek dute
konplituko zigorra”,
Sanchez, iruditzen zaigu
iruzkina agorra,
ez zaitez izan eurekin
orain lez, oldarkorra,
baizik eskubide denak
piztuta emankorra.

3
Epaiketan zertu dira
bidegabekeriak,
zoritxarrez, hori digu
baieztatu epaiak,
Gorenak adina agin
dezan demokraziak,
Moncloak gera ditzala
Marchenaren tirriak.

4
Abascal eta Casado
dira mendekariak,
erregea lez, bortxaren
bele mezulariak,
preso katalanak, berriz,
ongiaren haziak,
lurraldean sor daitezen
bakearen graziak.

5
Junqueras, Forcadell, Cuixart,
Turrull ta enparauak,
hautsi omen dituzue
espainolen arauak,
ez direnez izan zuen
ekintzak delituak,
zuen ausardiak ditu
hozituko ituak.

6

Gogor zigortu dituzte
preso politikoak,
gorrotoak mindu ditu
katalanen gogoak,
euskal presook dauzkagu
eurek lez desioak,
lokabe bizi daitezen
gure bi herriñoak.

7
Elkartasuna trepeta
gainditzeko malura,
bertan jaio, edo ez, da
denentzat estaldura,
zuek jende xumeentzat
nahi duzue onura,
dasta dezaten nahi beste
zoriaren gazura.

8
Urretxindorrak alaitu
dezala izadia,
halaber giza-dorreak
lor independentzia,
Catalunyan dir-dir argi
dadin egunsentia,
kantatzeko *Els segadors*
asaben eresia.

*2019ko azaroaren 24an*

908
**Gorge Orwelli, utopiak distopiak haiza ditzan**

1
*1984*-an,
George Orwellen eleberri ospetsuan
jendarte distopikoaren iragarpena,
herritarrak estatuaren mende,
ezagututa garaiko diktadurak,
gero gerta zitekeena iruditu zuen.
Zazpi hamarkada igarota
etorkizun petrala idatzi zigunetik,
Orwell biziko balitz ikusiko luke,
bere istorioa zertzen ari dela,
Anaia Handiak kontrolatzen gaituela,
gure ideologiak ohiturak... dakizkiela.
Konputagailuaren datu base erraldoian
masa uniforme bat gara,
kapitalisten eskaintzekin limurtuta
pixkanaka amildegira goaz,
kontsumismoagaz burmuinak maneiatzeko
teknologia berriak darabiltzate.

2

Interneten laionekin ikusmena ilunduta
Facebookek, Amazonek... gidatzen gaituzte,
euren nahiak luze betetzeko,
ahalik eta ordu gehien pantaila behatzeko,
gure bizierak eskasten dizkigute,
harremanak, balioak, xedeak...
Mundu birtualaren biztanleak egin gara
fikzioan ametsak asetzeko asmoz,
nahiz Apple, Netflix, Google... ez izan hurkoak,
gure desioak eta apetak dakizkite,
txanponekin boterea emanda
herrien izaerak baldintzatzeko gai dira.
Nortasuna ohartzeke zurrupatuta,
Silicon Valleyko txontxongiloak bihurtuta,
zentzuak "inperio horiek fiskaliza ditzagun", diosku,
utopiak distopiak haiza ditzan,
teknologia berriak demokratizatuta,
Orwellen arimak atseden har dezan.

*2019ko azaroaren 24an*

909
**(2019.10.29)**
**Jose Angel Otsoa de Eribe zenari**

1
Otsoa de Eribe,
zugaz gara bildu,
ez diezazuten inoiz
izana isildu,
mendekuak zizunez
gorputza abaildu,
antzigarretan gara
tristuraz hotzildu.

2
Heriotza eragin
dizu minbiziak,
kartzelaren sistemak
daukan maleziak,
juezak erabakita
poliki auziak,
hiltzeko libre laga
zintuen gaziak.

3
Noizbait nahitaez ihes
joanda Mexikora,
Madrilera ekarri
zintuzten gerora,
emanda hemeretzi
urte aldats gora,
herrak bota zintuen
sastraken hondora.

4
Ezin denez ahaztu
gertatu zaizuna,
politiko maltzurren
jarrera aizuna,
osasun arreta maiz
delako lizuna,
kartzela salatzea
erantzukizuna.

5
Ortzian izar gorri
distiranta zara,
naturan krabelina,
hurkoen zirrara,
gutarrekin diguzu
argitzen ganbara,
ez dadin inoiz honda
herriko galdara.

6
Etxean zendu zara
txera dastatuta,
kideen atsegina
gertu sumatuta,
Gorbeiako haizea
sakon arnastuta,
Urkabustaiz gogoan
maitez marraztuta.

7
Negar tantak isuri
ditu artizarrak,
heze daitezen zure
desiren zuztarrak,
laminekin egingo
dituzu batzarrak,
egokiro ditzagun
zer amets zaharrak.

8
Jose Angel begira
zaude herrixkari,
hiru hamarkadatan
desiratuari,
eskainita bizitza
askatasunari,
maiz kantatzen diozu
Euskal Herriari.

*2019ko abenduaren 1ean*

910

**(1996.05.05) (2000.10.15) (2020.10.11)**
**Gure maitasunaren kronika**

1

Maiatzak bost eguzkitsu hartan,
hitzordua euskaraz adostu genuen,
Untzagan atseginez nire zain,
Txaltxa-Zelaitik *Renault 7*-an abiatzeko,
gero Abadiñotik oinez gustura mintzatzen
erromatar harbidetik Mendiolara heltzeko,
nahiz ez aipatu elkarri sentierak
hazia mardul ernatuko zen.
Euskal Herriko izadian
gure begiak distiratuta,
nire bizitzaren garai zoriontsuenetakoa
maiatz loretsuan hasi zen,
abuztuan lehen oporrak maitasunez blai,
gorputzak ferekatzeko,
harremana egoki ehuntzeko,
pozak eta tristurak konpartitzeko.

2

Nik zurekin azken eguna libre
Urkuluko urtegian igaro nuen,
igandea lainotuta esnatu arren,
*Lagun* fidelagaz *Renault 9*-an joan ginen,
arratsean ekaitzaren mende Eibarra itzuli,
zure azken hitzak afaltzen entzuteko,
nahiz kartzelan zugandik urruti egon
nolabait batera bizi gara.
Urriak hamabost hartan lez, goia grisa,
negua jasaten darraigu,
udaberria pitz dadila,
maiatz hura, kazkabarra uxatzeko,
ametsetan ziegan maiz diot,
"zirrarak lagun diezagula",
geroa pizkundea izan dadin,
urriaren 11, orduko ilusioen jarraipena.

*2019ko abenduaren 1ean*

911
**Estatu patriarkalean udazkena beroa**

1
Estatu berekoia
delako eroa,
udazkena izaten
ari da beroa,
guretzat txarra denez
bere abaroa,
arren, irits dadila
hitzaren aroa.



2
Pentsionistak plazan
eskatzen ohikoa,
igo diezaietela
behingoz pentsioa,
zerga izan dadila
demokratikoa,
denon bizitza izan
dadin erosoa.

3
Lan munduan dutenez
onura murrizten,
arlo ezberdinetan
grebak dira pizten,
tamalez, ez dituzte
maiz zuzenki ixten
justizia delako
tantaka iristen.

4
Matxismoak dihardu
aldiro kolpatzen,
berdintasuna nekez
delako pausatzen,
feministak bidea
dabiltza urratzen,
matxista harroxkoak
irmo zokoratzen.

5
Altsasuko gazteek
darraite barruan,
eskuindarren bengantza
sufritzen larruan,
herrian hartu dute
ataka kontuan,
hurkoak laster itzul
daitezen kantuan.

6

Kartzelen drama ari
direnez luzatzen,
has gaitezen gaixoen
ametsak obratzen,
kalean dihardugu
indarrak metatzen,
has daitezen zaharrak
libre ailegatzen.

7
Monarkia delako
herrien hobia,
lokabe hegatzea
herritarren nahia
Catalunyak kemenez
hasi du bidaia,
zure desioa da
aberri joria.

8
Estatuak, ez ditzan
xedeak arraila,
pizkundea herrian
lilitu dadila,
izan ditzagun giza
eskubide pila,
katalanekin goaz
ongiaren bila.

*2019ko abenduaren 8an*

912
**Macron Sanchez demokratak izan zaitezte**

1
Sanchez eta Macron, maiz diotsuegu,
ez dugula nahi inoren mende bizitzerik,
zuena ez-demokrazia dela,
katalanek, bretoiek... guk beste dakitela,
nahiz ideologia errepublikarra izan
zuen estatuak monarken jarauntsiak,
herriei gereziak ostu zizkietenenak,

hizkuntzak zeharo zanpatu.
Konstituzioekin itotzen gaituzue
arau zurrunak inposatuta,
lehengo gobernuek gerretara eramanda
hamaika gazte hil ziguten,
zuekin kapitalismoan amilduta
auzolana ia zirtzildu zaigu,
gure nortasuna higatu ahala
munduan aniztasuna pobretzen duzue.

2

Herri txikiak zuentzat morroiak,
estatuak elikatzeko baratzeak,
ume hantusteekin bezala,
zuen apeten arabera jolas gaitezke,
monarkek ezarritako mugekin
guretzat izatea zin-zinez zaila,
lurraldeak maltzurki zatituta
bizipoza ilundu ziguten.
Zuk Sanchez, katalan independentisten nahiei
mehatxuekin erantzun dizkiezu,
zuk Macron, G-7ko anfitrioi izanik
Miarritz militarizatu zenigun,
zuentzat zer dira giza eskubideak?
Zuentzat zer da herriak geroa erabakitzea?
Guretzat mundua hobetzeko lanabesak,
bortxa zimeltzeko, bakea mardultzeko.

*2019ko abenduaren 8an*

913
**Eibarren odisearen amaiera**

1
Kordoba eta Puerto I
zigorraren barruak,
preso egotea zer den
jakiteko lekuak,
Valdemororen aurrean
diziplina estuak,
sarri gorrotoa eta
bortxaren erreinuak.

2
Valdemoron hasi nuen
lur jota odisea,
bizitza egin zitzaidan
galernaren haizea,
kideek kendu zidaten
saminen mihisea,
adorez blai laga nezan
mamu txarren leizea.

3
Gure araua denbora
oro baliatzea,
sorkuntza, ikasten edo
korrikan gozatzea,
hola lortu nuen grinen
zoruan pausatzea,
esperantzaren ortzia
izarrez loratzea.

4
Oso urrun zegoena
ari da hurreratzen,
hauskaitza omen zen haitza
txerarekin higatzen,
Eibarrekin biziguraz
has naiteke pentsatzen,
Euskal Herri naturala
ametsetan haztatzen.

5
Ia bertan dagoenez
hogeigarren urtea,
kartzelaldiari diot
zerratuko atea,
berriro ikusiko dut
barruaren ostea,
irrikaz batuko gara
kate barik maitea.

6

“Zugaz bizi nahi dut”, ozen
dudanez deklamatzen,
sentimendua hasi zait
pilpilka kitzikatzen,
gure harremana dugu
berretsiko mintzatzen,
askatasuna egoki
has dezagun prestatzen.

7
Gatazka gainditzea da
xedea ta beharra.
espe ta ekaitzik gabe
pitz dadin ostadarra,
bueltatu nahi dut irentsiz
zirrararen aparra,
zu(r)ekin ohoratzeko
gaurko Eibar nabarra.

8
Txarrantxetatik ñirñirka
agertu da ostera,
iretargiak arima
laga dit alegera,
gaur, irudimena joan zait
zure aldamenera
maiz konpartitzen genuen
zoriaren aldera.

*2019ko abenduaren 15ean*

914

**(1999.02.07)**

**Bilbon osteratxo bat**

1

Eibartik txukun jantzita Bilbora,
Lagunekin biok irriñoa musuan,
aisia gustura igarotzeko asmoz,
maitasuna egoki elikatzeko,
Gas plazan Fiat Unoa aparkatuta
otsaileko lehen larunbatean,

ohiko osteratxoaren hasiera
eguzkiaren izpiek girotuta.
Aldats behera hasi bezain azkar
Lagunek liskarra betiko katuekin,
udaletxetik errepidea gurutzatuta
Guggenheimera Ibaizabalen pasealekutik,
Zubizuri eta Salbe zubiak miretsita,
Puppy txakur loreztatua agurtzera,
jarraian Euskalduna jauregira
kafetegian kafe bana dastatzera.

2

Kasilda Iturrizarren parkea arnasgunea,
Lagunentzat urmaelean unerik onena,
bertatik Arte Ederretako museora,
gero Moiua plazara Carlton hotelera,
Diego Lopez de Haron gaude, denda handien Kale Nagusian,
ondoren Areatzako zubitik Zazpi kaleetara heltzeko.
Jaunak-en bi ogibitarteko afalduta
Tortillara Bilbori gero arte esateko.
Espainian kartzelan nagoelako,
Bilbo, ez zaitut aspaldi bisitatu,
umetan aro grisean ezagutu zintudan,
koloreztatzen hasi zinenean nahitaez laga,
bueltatuko naiz zure baldosinak laztantzera,
orduan lez, maiteagaz atseginez blai,
ea orain euskaltzaleagoa zaren,
auzoekin berdinzaleagoa.

*2019ko abenduaren 15ean*

915
**Ghettoak eskoletan uxatzeko berdintasuna**

1
Aniztasunak zer ditzan
sinergia naroak,
ez ditzagun eskoletan
sorgor sortu ghettoak,
ez dezan inoiz hausporik
jaso arrazismoak,
haur denek esan dezaten
direla hemengoak.



2
Segregazioak arras
dakartzanez hausteak,
ez daitezela haur batzuk,
arren, izan besteak,
ez ditzan jasan hezkuntza
publikoak kalteak,
ez, eizazkiezu bereiz
juzguekin ateak.

3
Ezin ditugu ergelki
ikasleak banatu,
jatorrien arabera
eskoletan kokatu,
Euskal Herria zuzenki
nahi badugu libratu,
bizilagunak beharko
ditugu inguratu.

4
Ez badugu ihinztatzen
loratégi anitza,
azkar ihartuko zaigu
Gernikako haritza,
ez dezan hirak sustraitu
karriketan sasitza,
*auzolan* izan dadila
eskoletako hitza.

5
Ez ditzala gorrotoak
haur lainoak ugertu,
sendiek mintzatzen elkar
dezatela ulertu,
gaurko joera eskasa
ezazu baztertu,
ez dadin giro sanoa
eskoletan lehertu.

6

Zuen zaintza ereduak
izan daitezen duinak,
guraso gazteak izan
zaitezte atseginak,
ez ditzagun inoiz entzun
gogoan zinkurinak,
dagokien eskolara
eraman haurtxo minak.

7
Irakasleen jarrera
ohi baita egokia,
elkartasuna delako
euren pedagogia,
ederki jorratzen dute
haurrekin enpatia,
gerora hozitu dadin
mardulik utopia.

8
Jendarterik zuzenena
nahi dugunez mamitu,
berdintasuna dezagun
eskoletan loditu,
kolore denak ditzagun
patioan arraitu,
haurrak euskaraz jolasten
daitezen eguzkitu.

*2019ko abenduaren 22an*

916
**Pertsona bat, etxe bat**

1
Etxea, beharrezko abaroa,
giza eskubidea duintasuna bermatzeko,
alokairuak garestiak direnez, ordea,
bikote gazteak maileguen mende,
konstituzioek aipatu arren,
artikulua nekez mamitzen dute,
bankuentzat salmenta mauka delako,
espekulatzaileentzat irabazpide.
Etxeen hipotekak hala-hola izenpetuta,
Kontuan hartu barik erosleen soldatak,
2008. urteko krisia dela medio,
herritar askorentzat galera itzelak,
eraikuntzaren burbuila zulatuta,
gizatasuna maltzurki zokoratuta,
zordunak zakarki kaleratzeaz gain,
bankuek zorrak kobratzen jarraitu zituzten.

2

Hego Euskal Herrian dirua barra-barra
Abiada Handiko Trenarentzat,
baina, ez dago zorurik erosteko,
etxe publikoak eraikitzeko,
zergak erabili beharrean
jendartean berdintasuna sustatzeko,
patriarken onerako darabiltzate,
ekonomia kapitalista loditzeko.
Stop kaleratzeak herri mugimenduagaz
erakunde publikoengana joan gara,
eskatzeko, *Pertsona bat etxe bat*,
ez dezan inork kalean lo egin,
etxeei prezio politikoak ezartzeko,
ez dadin inor bidegabe dirutu,
jendartean ongizatea egikaritu ahala
geurean hobeak izan gaitezen.

*2019ko abenduaren 22an*

917
**Dorreak eta Gurutze**

1
Dorreak eta Gurutze
espe lar bortitzak,
espetxean sustraitu
dituzte bizitzak,
gugaz darabiltzate
errukizko hitzak,
galtzen ditu, ordea,
sumindura gaitzak,
nahiz izan ziren juezen
zigorrak murritzak,
leotzetan darraite
zenbatzen zimitzak.

2

Patioan ergelen
arteko batzarra,
kolpeka neurtu du
nork bere indarra,
telefono txartela
izan da txingarra,
hasteko bat batean
galerna zatarra,
borroka ikusteko
zinez denez txarra,
otoiztu dugu geldi
dezaten liskarra.

3
Ez dutenez gure nahi
zuzena onartu,
axotekin zikinki
baitira oldartu,
gorputz baldarrak zakar
dituzte uztartu,
hausporik gabe gero,
bakeak hitzartu,
ez direnez espezain
alferrak ohartu,
ez dute bi espeek
oraina kaskartu.

4
Nahiz gure aholkuak
ondo konprenitu,
bulkada kontrol(a) gaitzak
menderatzen ditu,
maiz dituztenez lehen
graduan hertsitu,
eurekin esparruak
ditugu sufritu,
patuak zein sendiak
ditzala ongitu,
zentzuak diezaiela
burua eztitu.

*2019ko abenduaren 29an*

918
**Erroma inperiala galdu zen**

1
Erroman inperioa maldan behera
endekapenean luzaro etzanda egonda,
diziplina arras bigunduta,
*barbaroak* ipar aldetik lauhazka etorri ziren,
erromatarren itxura likitsa ikusita,
menderatzaileak menderatu zituzten.
Erroma migratzaileek eskuratu zuten
bortxari bortxarekin ihardetsita,
gaur egun, Afrikatik Europara datoz,
beste asko, berriz Asiatik,
bakean, bizi hobe baten bila,
gerratik zein gosetik iheska.

2

Gu Europan drogak kontsumitzen laket
erromatarren lako patriarkatza sustatzen,
Ama-Lurra burugabe suntsitzen gabiltza,
armak ekoitzita gatazkak pizten,
zanpatuz beste herrien ekonomiak eta ohiturak
munduan pobrezia emendatzen.
Ez gaitezen gera Erroma lez, galzorian,
ataka ganoraz azter dezagun,
migratzaileak txarrantxetan trabatu beharrean,
ondasunak zintzo konparti ditzagun,
*elkartasun* hitza sustraituta,
gizateriak gerorik izan dezan.

*2019ko abenduaren 29an*

919

**Gure Hamelinera eraman gaitzazue**

1

“Arratoiak kartzelan nonahi”,
irratian esatariak esan du,
oraingoa, enegarren aldia omen,
zaborren kudeaketa txarrarengatik,
hamaika presoren ohitura zikinekin
karraskariak oparotasunean,
hormatzarren erreinuan
muga barik ugaltzen dira.
Labezomorroak, kilkerrak, marasmak,
liztorrak, eltxoak, txingurriak....
kopuruz biblikoak izanik
presook pairatzen ditugu,
zigorraldia hola txartuta,
estresa emendatuta,
eskerrak noizbehinka miseriak
barrezka oroitzen ditugula.

2

Barruaren barruan itxita gauzkatenez
*Rattusak* nekez dakuskigu,
baina azken euritean bat ikusi genuen
patioan komunean babestuta,
gurekin arras izututa
eskalatuz zaingoko kamarara igo zen,
ikuskizuna zinez ikaragarria,
amesgaiztoen adinakoa.
Goitik guri urduri begira
gu berari, berriz, arretaz,
une batean lasaituta
ilaje grisa mihiaz garbitzen hasi zen,
biharamunean gu sentituta,
zakarrontzitik estoldara jo zuen,
arren, eraman gaitzazue
herraren plagatik Hamelinera.

*2019ko abenduaren 29an*

920

**Deriotik Zamorako espetxera**

1

“Ez, ez dut nahi horrelako
zibilizaziorik”,
Derion Gogor taldeak
zioen kemendurik,
ez zegoelako Franco
ankerraz aukerarik,
Euskal Herri gabetuak
iraun zezan bizirik.

2

Eliza pobrea zuten,
abadeek galdatzen,
Josuren mezua hori
zela grinaz aipatzen,
beharginekin oletan
beharra partekatzen,
zintzotasunez zituzten
idealak obratzen.

3
Borrokan aritu ziren
abade txit prestuak,
Amuriza ta Naberan
bezala, enparauak,
nahiz Francoren mende urrun
zeuden mirakuluak,
elizan blaitu zituzten
kontzientzia sikuak.

4
Valdemoron berriz entzun
nuen *Gogor* diskoa,
diktaduran banaketa
baitzen klandestinoa,
abadeek kantuekin
azalduta ildoa,
euren gainera etorri
zen errepresioa.

5

Poliziek atxilotu
zituzten abadeak,
torturak eta irainak
izan ziren legeak,
euskara bizkortu zedin
zirelako kideak,
giza eskubideen ta
bakearen aleak.

6



Zut Etxabe ta Kaltzada
Burgosko prozesuan,
frankismoa kideekin
salatzeko munduan,
militanteak zirenez
lurralde zigortuan,
espetxeratu zituzten
Zamorako neguan.

7
Abade presoek jasan
zutelako Zamora,
gure herriak dezala
letra larriz gogora,
zulotik ia ihesik
joan zirenak kanpora,
barruan hautsiko zuten
mendekua gerora.

8
Itxialdia Derion
izan zen deialdia,
zertzeko auzolanean
euskal udaberria,
utopiaren bidean
gal zedin pobrezia,
elkartasunaz herrian
oro lili ongia.

*2020ko urtarrilaren 5ean*

921
**(2008.12.10) – (2020.10.11)**
**Giza eskubideen egunetik askatasunera**

1
Sentimendua axolaz islatzen
abenduaren hamarrean,
joan ziren gurasoei eskaintzeko
giza eskubideen egunean,
ziegetan hamaika urte daramatzate,
gure bihotzetan berriz batu zirelako,
eskubide denak nahi zituzten
euskal herritar guztientzako.
Esperantzaren aroan data berezian
mahaian hunkituta idatzi dut,
"ataka gizatasunez konponduta,
gatazkaren demokratizazioa ehunduta,
giza eskubideak loraldia,
utopiara heltzeko iparrorratzak",
aitxa eta ama zuekin hau oldoztuta
bakea sustraitzea erraza iruditzen zait.

2

Abenduaren hamarretik desioz blai
urtarrilaren hamaikara,
auzolanean bidea egin dezagun
elkartasunaren taupadekin,
Baionan eta Bilbon esateko
“ez dezagun historia errepika”,
“Orain presoak Euskal Herrira”, aldarrikatuz,
espetxeak ahantz ditzagun gero.
Urtarrilaren hamaikan irudimenak
urriaren hamaikara eraman nau,
nire ametsetan bizi zaretenekin,
askatasunean esnatu naiz,
maite gaituztenekin atseginez,
Eibarko ibarrera bueltatuko gara,
giza eskubideak gogoan
kide minak azkar ekar ditzagun.

*2019ko urtarrilaren 5ean*

922
**Giza eskubideak bizipoza**

1
Giza eskubideak
zintzilik murruan,
ondoezak hartzen nau
ibilgu estuan,
tristuran amilduta
nago abenduan,
desio barik egun
esanguratsuan.

2
Zu abenduak hamar,
zakar heldu zara,
sentieran eragin
didazu ikara,
eskerrak jingo dela
hurkoen ainara,
jirabiraka ondu
diezadan ganbara.

3
Pentsamendua sartzen
denean sasian,
etsipena marrazten
ohi zait aurpegian,
zuekin susper nadin
arrats oskorrian
irrikaz pausatzen naiz
bedatse jorian.

4
Betiko buka dadin
ataka ustela,
giza eskubideak
lora daitezela,
Euskal Herrian lurpe
dezagun kartzela,
zingira araztuta
mami urmaela.

5
Aitxa, ama... gaur dugu
ekia esnatu,
egun handia hurbil
dago, deklamatu,
giza eskubideak
ditugu ondratu,
Eibarra atseginez
gaitezen bueltatu.

6
Hainbeste kontu eskas
dudanez oroitzen,
ia ohartzeke naiz
sakonki etsitzen,
zuen taupadekin dut
estresa gainditzen,
maitez nauzuelako
aldiro hunkitzen.

7
Sorkuntza izaten da
nire terapia,
pil-pil senti dezadan
bizinahi arraia,
gaumin luzea izan
dadin oasia,
ederkiro beztitu
izarrez ortzia.

8
Zohardia bizitu
gal dadin iluna,
irriak senda dezan
arima urguna,
depresio gaitzaren
kontra maitasuna,
giza eskubideen
baratze txukuna.

*2020ko urtarrilaren 12an*

923
## Azken negua kartzelan

1
Azken neguaren erpeak
bizkarrean sakon sentituta,
egun motzak nekez jasan ditzake
arima dardaratuak,
larrugorritan ohe biluzian
gau-minean orro egin dut,
ez didalako amesgaiztoak
lo egiten uzten zoko laiotzean.
Arren, ametsetan sar zaitez
nire pilpiren sorgina,
goiztirian esna gaitezen
ekiaren printzetan besarkatuta,
jaikita udaberrira joateko
eskutik oratuta biziguraz blai,
karnaben txintak gozatzeko,
laharren masustak dastatzeko.

2
Hemeretzi negu igarota
hamaika ziega hitsetan,
hogeigarrena izango da
etsipenaren heriotzarena,
arratsean liluratuta diotsut
zure argazkiei begira,
“esperantzan murgil zaitez,
halaber grinaz ihintzean”.
Ortzadarraren zain luze egonda
zinez estimatuko dugu,
nik, esparru hotzak ahaztuta
zuk, azken urteetako tamalak,
ostertz urruna gurutzatuta,
kideen xedeak konplituta,
Euskal Herrian zoriontasuna
eguneroko opila izango da.

*2020ko urtarrilaren 12an*

924
**Olentzero etorri zaigu**

1
Olentzeroren zain gaude
etxean hunkituta
urduri ta desioz blai
sarreran zutituta,
lurralde ilun laiotza
utz dezan lilituta,
euskal presoen xederik
behinena mamituta.

2
Sukaldean pozarren da
eseri ikazkina,
basotik guk eskatuta
etorri lagun mina,
mahaian garbi azaldu
diogu zeregina,
preso barik gera dadin
bengantzaren erpina.

3
Zehatz-mehatz aztertuta
gure eskakizuna,
berbarik egokiena
esan du, *batasuna*,
arbasoen auzolana
delako ontasuna,
lurtuko dugu kartzela,
malezia lizuna.

4
Olentzerok gogo handiz
gidatu du batzarra,
esanez, “ater dezagun
herraren kazkabarra”,
hobetu dadin elaien
egoera kaskarra
ez dakigula sekula
ahul gure giharra.

5
Presoak jator ditzagun
etzidamu libratu,
plazetan ta karriketan
kontzientziak bazkatu,
bihotzean joan zirenak
daitezen loriatu,
gatazka ta politika
txit demokratizatu.

6
Atxikimenduak segi
ditzagun emendatzen,
adostutako borrokak
adoretsu obratzen,
ohi lez, jarraitu dezagun
presoekin mintzatzen,
bisitetan euren bide
zuzena sostengatzen.

7
Urtarrilaren hamaikan
Bilbo ta Baionara,
preso ta iheslariak
joango gara gogara,
sentimendua garenez
sarri zuen zirrara,
gu taupadetan jauzika
ibiliko baikara.

8
Olentzero iritsi da
manifetara bero,
haurrek hainbeste opari
ez baitzuten espero,
musu-truk laztanen alde
aritu denez gero,
laster euren kopurua
ezlekuetan zero.

*2020ko urtarrilaren 19an*

925

**Azken Gabonak espetxean**

1

Azken Gabonak isolamenduan,
halaber espetxealdian,
burdin sarea leihoan ikusten,
bost metrotara dagoen horma,
ordenantzek atearen irekiduretatik
ezohiko janariak zerbitzatuta,
mahaian pausatuko ditut
afaltzeko fotoei begira.
Valdemoron, Puerto Iean lez,
kideekin jantokian afaltzen nuen,
Kordoban nahitaez ziegan ospatzen dut
*Hator-Hator* kantua abestuta,
ohean aterpetzen naiz gero,
etxean baino askoz lehenago,
txeraz mintzatzeko joan zirenekin,
amets egiteko zain daudenekin.

2
Hamaika hil barru kate barik
maitearekin afalduko dut,
ziega hitsak ahaztuta,
kide duinak oroituta,
etxea egoki girotuta,
mahaia dotore apainduta,
topa egiteko afalostean
joan ziren hurkoen omenez.
Olentzeroren opari naturalak
ezer gutxi duten umeentzat,
gabezian bizi direnentzat,
bereziki etxegabeentzat,
nik betikoa eskatuko diot,
kemena kideak ekar ditzagun,
herriarentzat hitza eta ongizatea,
munduarentzat feministen bakea.

*2020ko urtarrilaren 19an*

926

**2020 urte berezia**

1

Bi mila eta hogei
zenbaki bitxia,
niretzat izango da
urte berezia,
gaindituko dudanez
espetxealdia,
urriaren hamaikan
Eibarra bidaia.



2

Zu Urte-Berri, izan
zaitez pizkundea,
udaberri joria,
ihintz ta lorea,
libre esnatu dadin
herrixka xumea,
zertzeko kate barik
jendarte hobea.

3
Zuk osatu nahi duzu
biraka harila,
zure xedea bikain
borobil dadila,
haurrentzat izan zaitez
goizean opila,
giza eskubideak
josteko abila.

4
Egutegi berria
jarri dut zintzilik,
ibilgua baitago
oraintxe isilik,
nahiz nik, ez dakusadan
leihotik argirik,
sentimenduan ez dut
etsipen izpirik.

5
Urtea gugaz izan
dadila eztia,
arren, kide minekin
erabat guria,
euskal lurretik ondra
dezaten ortzia,
egun oskarbietan
eguzki arraia.

6

Urtats, ez zaitez izan
leotzetan gaitza,
baizik gauerdian lez,
espeen garaitza,
gerora zinez goza
dezagun bizitza,
zurekin lilitzen has
dadila gurbitza.

7
Aizu, oparo ekar
ezazu zoria,
bakean behingoz senti
dezagun loria,
berdintasunak sendo
dezan oinarria,
feminismo moreak
ase egarria.

8
Jator portatu denez
gurekin urtea,
egiten ari gara
bidea maitea,
bakarrik falta zaigu
etxean sartzea,
amesgaiztorik gabe
txera dastatzea.

*2020ko urtarrilaren 26an*

927

**Urteberrian Urkon esnatzen nintzen**

1

Urkotik Anboto ikusita,
ostertza eta hamaika tontor,
Ama-Lurra sakon arnastuta
Eibarra pozarren jaitsiko naiz,
ahalegin zoragarriak
bizinahia elikatu dit,
sentimendua kitzikatu,
esperantza oro suspertu.
Azken aldapa pikoa
Izerdiz blai gainditu dut,
Legarretik igotzen hasi naiz
Sosola eta Elorretatik segitzeko,
Gabon zaharreko eguna izanda
gaurko basari, soilik aurre egin diot,
kartzelan luzaro egonda
nire hankek igarri dute.

2
Kartzelaldian urteberrian
Urkon esnatzen nintzen,
maite gaituzten jatorrei
desio samurrak opatzeko,
gutunetan hori idazten nuen
hartzaileak kemendu zitezen,
nire taupadak sumatuta
gure askatasuna hur senti zezaten.
Bihar Urkora berriz igoko naiz
ohitura sanoa sustatzeko,
mendigoizaleekin topa egiteko
deserriko hurkoen alde,
gugaz aktiboak izan nahi dute
zertzeko gorri, berde, zuri, morea,
Euskal Herria mardul erna dadin,
gaurko goiztiria bezain ederra.

*2020ko urtarrilaren 26an*

928

**Xabierko Frantzizko euskararen zaindaria**

1

Abenduaren hirua
euskararen eguna,
euskaltzaleek diote
dela data kutuna,
Nafarroak oroitzen du
zaindari kemenduna,
Xabierko gazteluaren
seme Frantzizko deuna.



2

Frantzizko Txinan zendu zen
euskaraz xuxurlatzen,
bere izana urtero
dugu alabatzen,
Nafarroa zuelako
guk adina maitatzen,
arbasoen ondarea
lokabe desiratzen.

3
Frantzizko egun, izango
litzateke maisua,
AEKn irakasten ta
Korrikan trostan sua,
uste dut triste eukiko
lukeela musua,
zatituta ikusita
euskal paradisua.

4
Zazpi herrialdeetan
diglosia sikuak,
euskarari zakar ostu
dizkio eremuak,
Frantzizkok blaitu ditzala
plazetako zoruak,
euskaraz jolas daitezen
gure ume dontsuak.

5
Euskarak irabaz ditzan
kaleak, lantegiak...
mintza praktikagaz erein
ditzagun kontzientziak,
Frantzizkok nabarituta
pil-pil Euskaraldiak,
irrintzia bota zuen
ospatzeko graziak.

6

Frantzizkoren nahiak jarrai
ditzagun elikatzen,
joan ziren nafar zintzoen
helburuak obratzen,
Aitorren mintzo herrena
has dadin hegaldatzen,
leunki herritar jatorren
mihietan pausatzen.

7
Euskara nahi dugulako
behin betiko salbatu,
Frantzizkok diosku, “arau
makurrak eraldatu”,
egunero laztanduta
dezakegu aupatu,
enpatiaz, atseginez...
alegera ondratu.

8
Frantzizko zugaz ditugu
itxiko zauri za(ha)rrak,
euskara nonahi entzunda
poz moztuko bizarrak,
distiratuko baitira
niniak ta izarrak,
errekaldean bezala,
ilbetean lizarrak.

*2020ko otsailaren 2an*

929

**248 taupada**

1

*564 ohe huts*

Josu eta Gariren ekimena, [1]
gaur egun, zenbaki tristea
248 da,
nahiz kopurua jaisten ari den,
euskal presoen hurkoen dramak dirau,
ankerrak boteretsuak direlako,
estatuak ez-demokratak.
Giza eskubideen jazarleek
etsai-legea gogor ezarrita,
mendekua baliatzen dute,
kideek deserria paira dezaten,
garaile-galtzaile eskemarekin
zauriak nekez orbain daitezke,
gatazka demokratizatu barik
bakearen atea itxita.



---

[1] *Hertzainak taldeko kideak.*

2
Bihoztunen deialdiari esker
plazak eta kaleak mukuru,
Gabonetan musikarekin
kanta hunkigarria abesteko,
Eibarren Gabon egunaren arrastian
Toribio Etxeberria kalean,
Aitor eta Xabi zuzendariak [2]
kartzela hitza geurean gal dadin
ekitaldi arrakastatsuak
belaunaldi berriak batu ditu,
kide zahar eta gaixoak askatzeko,
gainerakoak herria hurbiltzeko,
kultura herrikoia delako
musuetan zirrara loratu da,
gazteak pilpiraka ari dira
bake zuzenaren aldaba joten.

*2020ko otsailaren 2an*

---

(2) *Su Ta Gar taldeko kideak.*

930
## **Valparaisoko *Las Tesis* taldeari**

1
Lau aldarri adoretsu
matxistak kikiltzeko,
feministen ametsak ta
xedeak hariltzeko,
patriarkatzen praktika
bortitzak amiltzeko,
euren ideologia
faxistak isiltzeko.



2
Txilen *Las Tesis* ausartak
zerrenda begietan,
matxista zitalak tinko
seinalatzen plazetan,
"bortxatzailea zu zara",
diote ekintzetan,
feminismoa sustraitu
delako arimetan.

3
Dantzatuz, antzeztuz eta
kantatuz tragedia,
edonora iritsi da
“Matxismorik ez!” nahia,
*performance* kolosala
irizten zait joria,
feminista bihurtu du
hamaika kontzientzia.

4
“Nik ere bai”, esan dute
Estatu Batuetan,
matxisten lizunkeriak
pairatuta urtetan,
ez dira ari aktore
helduak gezurretan,
jasan zituzten jauntxoen
abusuak gaztetan.

5
“Beldur barik” ibil zaitez
nonahi libre gauean,
jantzita nahi duzun eran
aisian ta lanean,
neska, ez zara biziko
gizon basen mendean,
iraultza morea piztu
delako jendartean.

6

“Nik sinisten dizut”, oihu
zinez askatzailea,
bortxatzaile sadikoa
delako gaizkilea,
arren, ez dadila izan
matxista epailea,
bortxatuen desiren ta
irrien hiltzailea.

7
Feministen pizkundea
loratu da munduan,
zohardia isladatu
atseginen musuan,
nahiz patriarkatzak zorrotz
dauzkan bere ituan,
masustak helduko dira
laharraren zoruan.

8
Feminismoa artea
eta borroka duina,
utopia mamitzeko
ideal txit bikaina,
Mariren sentimendua,
Ama-Lurren buztina,
gerezien, marrubien,
krabelinen... lurrina.

*2020ko otsailaren 9an*

931

## Errepublika Saharar Arabiar Demokratikoari. Solidarioei

1

Mendebaldeko saharar zanpatua
libre bizitzeko asmoz borrokan,
Espainiak Sahara saldu zuelako,
Marokoko monarkiak kateatu,
nahiz Nazio Batuen Erakundeak
autodeterminazioa agindu,
botere ekonomikoek trabatu dute
diplomaziaren labirintoan.
Aljeriaren babesa eskertuta,
samurtasuna sarri sentituta,
Tindufen lau hamarkada daramatzate
karpetan eta pezoizko etxoletan,
gure herritar solidarioek
sahararrak atseginez laguntzen dituzte,
udan euren umeak artatzen,
neguan kanpalekuak hornitzen.

2
ISIS Tinduf erasotzeko prest,
bertan musu-truk ari diren europarrak,
Paris eta Madrilek kiratsa hedatuta
elkartasuna murriztu nahi izan dute,
berriak beldurra sortarazi arren,
bihoztunak abenduan abiatu dira,
tamalez, seme-alabak etxean lagata,
ohiko maitasuna oparitzeko.
Mortua zuekin oasi bihurtuta,
errefuxiatuak bikain asetuta,
noizbait biziguraz buelta daitezen
ilunabar ederren itsasertzera,
sahararren adiskide minak,
utopiaren maitale zintzoak,
ureztatzen jarrai ezazue
Tinduf lorea, bigarren aberria.

*2020ko otsailaren 9an*

932
**Rafa Trumoitsu zaratatsuari**

1
Rafa Trumoitsu deitzen
baita arlotea,
maiz korrok egitea
bere artea,
erabat alferra den
pilulen zalea,

laster zapalduko du
irrikaz kalea,
ez denez, ordea,
onaren aldea,
baizik ilunpea,
drogaren popea,
atxilo dezakete
berriz dorpea.

2

Gizona dela dio
Trumoitsu altuak,
leihotik maiz tu dagi
garun sikuak,
baina mendean hartu
duenez murruak,
umeek lez dagitza
urduri oihuak,
hiltzeko izuak,
buruko mamuak,
damuen juzguak,
ekintza itsuak,
berak saldu zituen
drogen doluak.

3

Aldiro digulako
bakea ukatzen,
ez gara Trumoitsugaz
orain mintzatzen,
ase garenez bere
musika pairatzen,
isiltasunarekin
dugu kastigatzen,
gutaz trufatzen,
gaiztoki portatzen,
dantzugu kantatzen,
pareta kolpatzen,
ea sendiak dion
sena sendatzen.

4
Droga espetxean da
presoen lausoa,
bizitza hondatzeko
sarri zioa,
baina aldameneko
hau denez harroa,
uste dut okertuko
zaiola geroa,
aizu kokoloa,
gaintzeko lanbroa
bazkatu gogoa,
izan etikoa,
ez zaitezen ziegetan
izan eltxoa.

*2020ko otsailaren 16an*

933
**Rap eta Regeton zintzo daitezen**

1
Udaberriaren atarian
natura esnatzen ari da,
ibilguan aldi berean
bi preso erotuta,
leihotik orroka dantzuzkit
musika ozenki jarrita.
Ez daukagunez ziegan bakerik,
kideak zaratekin haserre,
ez dira konturatzen drogekin
askatasuna hiltzen ari direla,
nahiz egunak parrandan laburtu
zigorra luzatuko dietela.

2

Gaur borroka gertatu da
ustezko bi lagunen artean,
espetxezainak ziplo helduta
amorrua itzali zaie,
orain gandor barik geratuta
etsipenean amilduko dira.
Rap eta Regeton gabe
ohean sartzea plazera,
nahiz negua itzuli den
gu atseginez blai gustura,
udaberriaren loraldiak
preso bihurriak zintzo ditzala.

*2020ko otsailaren 16an*

934

**Herritar baten oldozpena**

1

Bi konstituzioen mende bizi gara,
bi armaden mehatxupean,
estatu zentralisten esanetara,
polizien aginduak sufritzen,
bi inperio ohien sarean trabatuta
euren eleekin diglosian.
Metropolien kulturekin blaituta
gurea anabasan lar lehortuta,
goiari eusten saiatu arren,
ezarian makaltzen ari gara,
chauvinisten banderen ordez, diogu,
“Europako herrien aniztasuna”.

2

Bi estatu boteretsuek
izainak lez xurgatzen gaituzte,
lehen ginen gutarrak, orain auskalo,
mami barik irautea zaila,
denon etxea eraiki nahi dugu
lehenbailehen gu izan gaitezen.
Ez dugu nahi gudarosterik,
gure defentsa auzolana,
horrenbeste gerra jasandakoak
munduan ahizpatasuna erein nahi du,
ongizatearekin amets dagi,
berdintasunaren bake jorian.

*2020ko otsailaren 16an*

935

**Ama-Lurrekin harmonian bizi gaitezen**

1

Artikoan izotz geruza urtzen,
itsasoak plastikoekin kutsatzen,
CO2a atmosferan hedatzen,
Australia suteekin kiskaltzen,
Siria, Yemen... gerren mende,
Errefuxiatuak Lesbosen sufritzen.
Berri txarrekin atsekabetuta,
“Mundua hausten ari gara”, diogu,
baina gure aurretik jiraka zebilen,
eta gu barik hola du segituko ere,
ingurumena kaltetuz jai daukagunez,
ekonomia jasangaitza utz dezagun.

2
Gabezia edonora heldu da,
erantzuleak ezagutzen ditugu,
kapitalismoaren sustatzaileek
geroa aspaldi baldintzatu ziguten,
tamalez, dirudi bizi nahi dugula
giza eskubideen jazarleek lez.
Lurra agortzen ari dela diote,
Marte, Jupiter... kolonizatzeko,
ondasunak zoroki kontsumitu ordez,
izadia begirunez trata dezagun,
Ama-Lurra gure sorlekua delako,
harmonian beragaz bizi gaitezen.

*2020ko otsailaren 23an*

936

**Kartzela eta zaborra**

1

Ikusita kartzela
ekoizten zaborra,
esan daiteke dela
saguen alorra,
zuzendaritza denez
gai honekin sorra,
birziklapen joria
bertan da lehorra.



2

Kartzelak du janari
ugari botatzen,
lotsa barik noizbehinka
errauts bilakatzen,
nahiz ez duten konposta
zertzeko usatzen,
haztegian txerriek
baitute tragatzen.

3
“Kartzelan jaun ta jabe
dira plastikoak”,
aldiro diosta net
haserre gogoak,
seguritatekoen
protokolotxoak,
zakarrontzian uzten
ohi ditu zorroak.

4
Ziegan dena botata
plaust zakarretara,
kontzientziak diosta,
“zu zikina zara”,
hemen ezin naizenez
izan  berdaskara,
Zabor Zerok kalean
nazala anpara.

5
Guztia nahastuta
poltsaren barruan,
ez dugu birziklatzen
ezer ibilguan,
ekologia nahia
denez sorlekuan,
kezka hori zintzilik
daukagu musuan.

6

Plastikoa, papera
Kartoia, txatarra...
guk egingo genuke
zakarraz zilarra,
zuzendariak senti
dezala beharra,
ez dakion beltz Ama
Lurrari pindarra.

7
Birziklatuta denez
aurrezten dirua,
kartzelak zain dezala
bere eremua,
presoak izan dezan
gero enplegua,
irakats diezaiola
zehatz prozesua.

8
Kartzelak zabor dena
ondo sailkatuta,
arazo bat eukiko
luke moldatuta,
plastikozko botilak
gaur birziklatuta,
presoak bihar bikain
gizarteratuta.

*2020ko otsailaren 23an*

937

**Birziklatuz erraustegiak itzaliko ditugu**

1

Zubietako lurraldean
neguaren atarian,
ardi iletsuak zelaian
belar hezea murtxikatzen,
gertu txirrindulari bat
bizikletatik jaitsita haserre,
eraikin erraldoiari beha
kearen mehatxua zertu delako.
Erraustegi madarikatua
izadi ederraren gunean,
gure zaborra erretzeko prest
politiko gezurtien erruz,
usurbildarrak saritu ordez,
birziklatzen aitzindariak direlako,
herritik hur ezarri diete
kutsaduraren amesgaiztoa.

2
Dirua nahita jartzen denean
ingurugiroaren gainetik,
osasuna kaltetzeaz gain,
jendartean gatazka pizten da,
“Erraustegirik ez!”, oihukatuz,
birzikla dezagun diogu,
gure bizitza oneratzeko,
Ama-Lur ohoratzeko.
Zubietako eremu sanoa
gaizkiak kolonizatu du,
hondamendia gera dezakegu
*Kilometro Zero* kontsumituz,
etxean sendunak izan gaitezen
birziklatuz Usurbilen beste,
ez dadin izan natura zabortegi,
baizik lehen lez, aratza.

*2020ko otsailaren 23an*

938
**Kartzelatik Zoritsuri**

1
Katutxo beltzak ditu
niniak berdeak,
bibote zuria ta
belarri tenteak,
ametsak dizkionez
opatzen oheak,
zurekin jolastea
maite du meheak.



2
Patua izan zenez
madarikatua,
kalean jaio zinen
biluzik katua,
bizitzak zirudien
estoldan mortua,
zorionez oraintxe
dirudi ortua.

3
Ekidin zenuenez
zekenen ganbara,
Urkitik heldu zinen
zu Ipuruara,
bidaiatzeko hartu
zenuen otzara,
geroztik beldur barik
lasai bizi zara.

4
Lazeriatik zinen
iritsi etxera,
egoera txarretik
oraingo hobera,
laket ibiltzen zara
goizetik gauera,
beteta urdaila ta
hamaika nahiera.

5
Gaur, laztanak esan dit
zu zarela arra,
etxea noizbait zaizu
irudiko marra,
emeekin batzera
ohi denez beharra,
naturak diezazuke
egin deiadarra.

6

Zoritsu laster zara
izango heldua,
zoritxarrez, gainean
daukagu negua,
ondo dakizu dela
hau zure lekua,
zuk gura duzun arte
zoru ta zerua.

7
Iretargi betea
zuk duzu ondratzen,
begi borobilekin
leihotik behatzen,
izartegiak sena
dizu kitzikatzen,
felidoa zarela
ñir-ñir gogoratzen.

8
Nahiz ezin dudan entzun
miau persiarra,
aurten erdietsiko
dut xede lurtarra,
Zoritsu ferekatu
nahi dizut bizkarra,
gozo egin ditzazun
urrumak izarra.

*2020ko martxoaren 1ean*

939

**Olinpiadek bakea sustrai dezaten**

1

Antzinako Greziako Olinpian
filosofia maitatzeaz gain,
ideiak abian jartzen zituzten
olinpiadetan Zeusen omenez,
jokoak hasi bezain azkar
etsaiak lagun egiten ziren,
bortxa zokoratzen zuten

aukera emateko bakeari.
Nazio Batuen Erakundea,
ez da gai greko haiena lortzeko,
New Yorken kokatu zenetik
gerrak nekez isiltzen ditu,
bi gerra mundialetan nahitaez
joko olinpikoak eten zituzten,
baina egun jaramonik egin gabe
estatuek parte hartzen dute.

2
Atenaskoetatik Riokoetaraino
jokoak ziegan ikusi ditut,
ordutik gaurdaino, bortxa dela medio,
Irak, Siria, Yemen, Libia... hautsita,
olinpiadetako espirituak,
ez daki zer den gizatasuna,
ez die arretarik jartzen
odolusten ari diren herriei.
Olinpiaden geroa bermatzeko
mundua iraul dezagun,
herrien arteko auzolanagaz
gerren sustatzaileak baztertzeko,
kirolak bakea ekar dezan,
kirolariek erein dezatela,
estatu patriarkalen ordez,
Tokion elkartasuna lehia dadin.

*2020ko martxoaren 8ean*

940
**Olinpiadetan zale sutsuen ordez sendunak**

1
Nazionalista, ez ei diren estatuak
olinpiadetan sutsuenak,
espiritu olinpikoa ahaztuta
fanatismoan harroki murgilduta.
Zaleekin auzo lotsa sentitzen dut,
halaber kazetariekin,
euren koloreak goratzen dituzte
mespretxuz irainduta besteenak.

2

Kirola senduna izan dadila,
eta ez burugabeen lubakia,
faxistek, ez dezaten balia
xenofobia bortitzki hauspotzeko.
Jokoak leialak izan daitezela,
harreman zintzoen sustatzaileak,
gizatasunak aukera izan dezan
nazionalismo arrazista bezatzeko.

*2020ko martxoaren 1ean*

941

## Zazpigarren ziegan

1

Ziegako atea da
kolorez urdina;
hormak, zuriak dira,
irina adina,
behegain gris ilunak
dirudi uzkina,
leihoko burdin sare
horiak zikina.

2

Aspaldi bihurtuta
harritza bizitza,
ziega maiz iruditzen
zait zoko bortitza,
baina zu oroituta
dirudi garaitza,
hiztegian delako
galtzen porrot hitza.

3
Mahaian aritzen naiz
zurekin mintzatzen,
maitasuna ta txera
maiz izkiriatzen,
Eibarrera naizenez
grinaz hurreratzen,
bizinahia didazu
bikain elikatzen.

4
Ziegan gordeta eta
baita patioan,
ni zorionez nago
kideen alboan,
eurek bezala, daukat
herria gogoan,
pozarren babesten naiz
abaro gozoan.

5
Ziegan dizkigutenez
jakiak banatzen,
ez gara zoritxarrez,
jatorduan batzen,
nahiz diguten hamaika
arau inposatzen,
umorea, ez zaigu
sekula sikatzen.

6

Kordoban preso nago
zigor esparruan,
barruaren barruan
lehen ibilguan,
zazpigarren ziegan naiz
poeten moduan,
musekin barneratzen
zirraren munduan.

7
Eskaintzen didazunez
maitez ahalmena,
ziegan ederki janzten
dut zure omena,
sorkuntzekin hunkitzen
dizut sentimena,
kuttuna zarelako
ta nire kemena.

8
Gauerdian hasten da
ametsen unea,
izarrak dir-dir goian,
ohea etxea,
goiztirian zurekin
ziega sukaldea,
edateko kafea
laztanka maitea.

*2020ko martxoaren 8an*

942
**Bakea gatazka demokratizatzea da**

1
Txakurrak gure mina sumatuta
ondoeza leialki konpartitzen du,
gizakiok enpatia, ordea,
ez dugu aurkariekin erabiltzen,
gatazka demokratizatu barik
herrian bananduta bizi gara.
Bakea ezin delako pausatu,
bengantzak, ez duelako nahi,
“konponketa jos dezagun”, diogu,
besteen saminak ferekatzeko,
txera geurean lora dadin
hitzari izotz geruza urtuta.

2

Azken bortxa Francorekin piztu zen,
herritarrok jasaten darraigu,
biktimak eta herra gehitzen
hamaika urte daramagu,
nahia zein den galde diezagutela,
arimen negarra irri bihur dadin.
Giza eskubideak eta oroitza,
ez dezan inork etika zapaldu,
deserrikoak itzul daitezen,
joandako hurkoak ondra ditzagun,
zauriak plazetan orbainduta
elkarbizitza hitzar dezagun.

*2020ko martxoaren 8an*

943
**(2020.01.30)**
**Euskal Herriko giza eskubideen kartari**

1
Jendarte hobea zer dezagun
greba orokorra lanabesa,
aldarrikatzeko kemenez,
“Kapitalismoa, ez da zilegi!”,
ekonomia jasangaitzaren ordez
jasangarria eratzeko,

ez dadin bihur natura mortu,
herria denda barik ilunpe.
Berekoikeria aseezina
borrokatuz geratu nahi dugu,
elkartasuna batera ehunduz
errefuxiatuak aterpetzeko,
ahizpatasuna sustatuz
arrazismoa zokoratzeko,
“Gerrarik ez!”, ozen esanez,
haurren irriekin laket gaitezen.

2
Beharginak, langabetuak,
feministak, pentsionistak, gazteak...
bizitza duina obratzeko prest
auzolanean uztartuta,
espekulazioa eta
iruzurra buka daitezen,
etxea beharra delako,
eskubide unibertsala.
Greba eguna iraultzeko,
klase sozialak lurtzeko,
aberastasuna konpartitzeko,
pobrezia gainditzeko,
kontsumismoa zentzatzeko,
ingurugiroa zaintzeko,
ongizatea hedatzeko,
utopia morez janzteko.

*2020ko martxoaren 8an*

944
**_Gerrarik ez!_ ozen esan dezagun**

1
Venezuela ta Iran
yankien etsaiak,
Caracas ta Teheran
piztien hiriak,
misilak ekoizteko
dira aitzakiak,
Donald Trump legez, pozik
daude berekoiak,
berdin kapitalistak
ta bankariak,
petrolioak zertzen
ditu gabeziak.

2
Gerra da patriarka
denen delitua,
bortxaz hartzeko herri
ahulen zorua,
inperioen arma
sarri zen izua,
bortxaketa, triskantza,
sua, mendekua...
matxistek izorratzen
digute mundua,
pobrezia ohi da haur
askoren baraua.

3

Kalera, “Gerrarik ez!”,
ozen esatera,
mehatxu basatia
tinko geratzera,
elkartasunak jaso
dezala harrera,
auzolanak birrindu
Trumpen jokaera,
ez dezaten bizitza
militarrek era,
europar moreok jo
nahi dugu bakera.

4
Botereak aldaraz
dezan izaera,
ez delako zilegi
bere jarduera,
feminismoak gerra
dezala lurpera,
utopia landuta
ekidin galera,
armak urtuta konpon
gaitzaren afera,
leunki senti dezagun
herri duinen txera.

*2020ko martxoaren 15ean*

945
**Krisi baten kontakizuna**

1
Troka ikusgarriaren gainaldean
eserita hankak dilindan,
urduri bihotza taupaka
bertigoari aurre eginez,
niniak ortzimugan iltzatuta
iragana errepasatzeko,
tamalez, erruak soilik oroitu ditut,
ondo egindakoak, berriz, ahaztu.
Lur jota eta ilunki
atseden hartzea hobetsi dut,
harkaitz zabalean etzanda
maiteekin pentsatuta suspertzeko,
bizitzari gero, zutik esan diot,
nire sentiera minduari,
"ez dut etsipena aterpetuko,
ezta burua amilduko ere".

2

Gau-minean maiz sentitzen dudanez
buruaz beste egiteko beharra,
naturan mamuak uxatzen ditut
arnastuta lurrin usain onekoak,
Ama-Lurrari zirraraz diotsot,
“hurkoak oro maite ditut.
Azken hatsa bota arte biziko naiz
eurekin lez, laztanarekin”.
Trokaren ertzetik urrunduta
iturrira iritsi naiz,
musua eta lepoa freskatuta
esperantzarekin herrira noa,
goitik amildegi itzelak,
“arren, hurbil zaitez” diosta,
bizitza maite dut, ordea,
zuekin konpartituta.

*2020ko martxoaren 15ean*

946

**Rojavari. Ocalan buruzagi presoari**

1
Kurdistan menderatuta daukate
lau estatu zeken ankerrek, (1)
bonben eztandenpean ari dira
orainari eusten izateko,
Dihardilan Aberri Eguna zirrara,
natura, ostadarra, pizkundea.
Kurduak kultura zentzuz sustatzen

nortasuna, ez dadin herdoildu,
kurduera batua hedatzeko,
euren artean hobeto ulertzeko,
fedeek, ez ditzaten banan, dabiltza,
aniztasuna zaintzen noizbait batzeko.

---

(1) *Iran, Irak, Siria eta Turkia.*

2
Rajovan arriskuan dago
konfederazio iraultzailea,
kurduak, jezidak, arabeak...
agintari genoziden sarean, [2]
nahiz miliziek ISIS garaitu zuten
boteretsuen ordaina erdeinua.
Kurdistango emakume feministak
turkiarren eta yihadisten izua,
Eguzkia eta Izar Gorria
ongizatea josteko sinboloak,
Rajovan ez diezatela os bakea,
berdintasunaren sustraia.

*2020ko martxoaren 15ean*



---

[2] *Al Assad, Erdogan, Trump, Putin...*

947
**Munduan errefuxiatuen drama**

1
Errefuxiatuena
egoera larria,
migratzaile askorena
legez, negargarria,
mediterraneoa maiz
eurentzat hilerria,
Europa oasi baino
gehiago otserria

2
Eskuindarrek, ez dituzte
maite iheslariak,
migratzaileak ohi dira
faxistentzat etsaiak,
baina sorlekutik ditu
bidali maleziak,
kapitalista zeken ta
bortitzen handinahiak.

3
Iheslariak Lesbosen
daude kanpalekuan,
giza eskubide barik
Morian infernuan,
lazerian amilduta
biluzik esparruan,
pena ta etsia zaie
nabaritzen musuan.

4
Grezia ta Turkiaren
arteko zola lotsa,
iheslariek dantzute
ozen bortxaren hotsa,
Europan sarri delako
elkartasuna motza,
errepresioa, aldiz,
Turkian lez, zorrotza.

5

Bangladeshen lez, Libian
errefuxiatuak,
sarri dirudi ahaztu
dituela munduak,
bizi-baldintzak izanik,
gordin eta estuak,
solidarioak dira
eurentzat ukenduak.

6

Ertamerikarrek ezin
dute muga pasatu,
Washingtonek zakar die
ametsa deuseztatu,
ez ditu nahi ondasunak
natural partekatu,
bere politika gaitzen
biktimak anparatu.

7
Arren, Nazio Batuen
Erakunde nagiak,
zuzenki konpon ditzala
bidegabekeriak,
oro gal daitezen gaurko
gerrak ta pobreziak,
ez ditzaten utz beldurrez
haurrek euren herriak.

8
Estatuek dezatela
erauz hipokrisia,
edonon ezarri duten
herraren harresia,
erna dadin ahizpatasun
joriaren hazia,
demokrazia garbia,
feministen grazia.

*2020ko martxoaren 22an*

948

**Gure Ama-Lurri**

1

Ama-Lur erakartzen nauzu
urtarotik urtarora,
Aturri eta Ebroren artean
ederkiro anitza zara,
baso, lautada, troka...
berdea, horia, grisa...
laztan kutuna beste maite zaitut,
zugaz eta beregaz ni laket,
haurtzaroan etxekoekin
Kalamuan ezagutu zintudan,
Arraten dotore jantzita,
zu zoriontasuna zinen.

2

Ama-Lur gizakiak zurekin
txarto portatzen gara,
zintzoak izan beharrean
basaki ustiatzen zaitugu,
ahaztu dugula dirudi
zu gabe, ez garela ezer.
Zure adiskide Mari
feminista kementsua,
patriarkatza bortxa denez
zokoratu nahi duzue,
berdintasun joria izan dadin
ingurugiroaren lurrina.

*2020ko martxoaren 22an*

949

## Eitzagan lez, beharra heriotza denean

1

Segurtasunaren aurrean
dirua hobesten denean,
olan, eraikuntzan, garraioan...
beharginak arrisku bizian,
XXI. mendean gaurdaino
kapitalista zekenen erruz,
istripuak geurean barra-barra
ondorio latz eta goibelekin.
Enpresarioak ohoratuta,
sindikatuak, berriz, gaitzetsita,
gobernuen jarrera etsigarriaz
auzoetan nahitaez atsekabea,
beharginak biluzik laga ordez
lan baldintza eskasekin,
osasuna berma diezaietela
lanaren emaitza onura izan dadin.

2
Eitzagako hondakindegian
kolapsoa iragarrita zegoen,
bi behargin eta autopista
luperiak zaborpetu zituen,
kudeaketa maltzurki burututa
Verter Reciclyng iruzurgile,
ikuskapenak nahita txarto eginda,
Eusko Jaurlaritza erantzule.
Amiantoak erakutsi du
berekoiek egindako malezia,
ke pozoitsuak salatuta gaizkia
Eibar, Ermua, Zaldibar haserre,
Alberto eta Joaquin zuen patu gaitza
bihozgabeen bidegabekeria,
zuentzat maitez ihintzaren dirdira,
Ama-Lurraren laztan eternala.

*2020ko martxoaren 22an*

950
**(2019.01.02)**
**Arrateko pago gaixoei**

1
Arrateko pagoak
arbola gaixoak,
Eibartik genituen
aditu orroak,
ezin eutsirik erro
za(ha)rrek errondoak,
ziplo bota zituen
haizaldi eroak.



2
Onddoen eraginez
moztuta pinuak,
babes barik gelditu
ziren inguruak,
bertan hola egonik
pagoen lekuak,
ekaitzak iragarri
zituen doluak.

3
Pago denak, ez dira
etorri behera,
baina Arraten txarra
baita egoera,
negargarria izan
denez gertaera
goazen azkar aldaskak
mimoz landatzera.

4
Murriztuta geratu
delako basoa,
Eibarren galera da
ekologikoa,
Arrate izan dadin
ohi lez, abaroa,
ekonomia izan
dadila sanoa.

5
Pagoen heriotza
denontzat kaltea,
gure jendartearen
argazki tristea,
arren, oroit dezagun
asaben oldea,
Arrate izan dadin
ametsen xedea.

6

“Arrate zain dezagun!”,
pagoen oihua,
ez dadin gal Eibarko
altxor preziatua,
zelaian konposatu
nahi dugu doinua,
gure umeek kanta
dezaten mezua.

7
Pagoek “Pinurik ez!”,
diote batera.
“Ustiaketa basak
tink ditzagun gera”,
mendia gura dute
anitza ostera,
Ama-Lur bizi dadin
oro alegera.

8
Entzun dugunez pago
minen erregua,
eta beste izaki
askoren kexua,
ezar dezagun euren
aldeko araua,
Arrate izan dadin
lehen lez, zerua.

*2020ko martxoaren 29an*

951
**Ahizpatasuna berdintasuna da**

1
Feminismoaren eremuan
esperantzaren izpiak,
belardi zoragarrian
gereziondoak loretan,
alboko lahardi sarrian
masustak poliki umotzen,
pizkundea udaberrian
hari moreak ehuntzen.
Androzentrismoaren sisteman
ongia gaizkiaren gatibu,
patriarkatza agintean egonik
matxismoa jaun eta jabe,
ez dago inon bakerik
botere matxistarekin,
feministok dakigulako
berdintasuna zertuko dugu.

2
Emakumeak hiltzen dituzte,
jipoitzen, iraintzen, bortxatzen...
patriarkatzak iraun dezan
bortizkeriaren tronuan,
matxistek biluzik nahi dituzte
mendetan lez, menperatuta,
mundua ustez eurena delako,
eta ez Ama-Lurrarena.
Feminizidioa da
ankerkeria totala,
gizateriaren historian
krimenik koldarrena,
gure garaian erna dadila
jendarte feministaren kimua,
martxoak zortzi garaitza izan dadin
ahizpatasunaren ospakizuna.

*2020ko martxoaren 29an*

952

**COVID-19arekin bisiten galera**

1

Kartzelan bizi garen arren,
bizitza zinez maite dugu,
COVID-19arekin, ordea
ohiko airea falta zaigu,
tamalez, bisiten galerarekin
zoria nekez arnas dezakegu.
Koronabirusak balioko du,
gaur egun, zer garen jakiteko,
jendartea berekoia den,
edo solidarioa,
gure idealak ezagututa,
ez daukagu zalantzarik.

2
Nahiz bisitena tamala den,
ohiko bizimodua dagigu,
kirola eta literatura
gorputza eta gogoa ontzeko,
kideok sentieraz blai diotsuegu,
“zuek gure hauspoa zarete”.
Telefonoan zuen taupadekin
ederkiro baretu gara,
ongia naro igorrita
suspertu gaituzue,
txera mintzatzen entzun dugu,
maitasunaren hasperena.

*2020ko martxoaren 29an*

953
**Alberto Sololuze eta Joaquin Beltrani**

1
Alberto eta Joaquin dautza
Eitzagan zaborpean,
euren hurkoek saminez
darraite ilunpean,
Jaurlaritzak, berriz, sorgor
darrai gezur hezean,
zabortegiko kea lez,
firurika haizean.



2
Verter Reciclyng, diogu,
zu zara erruduna,
baina Jaurlaritzak dauka
hor erantzukizuna,
zabortegiko jabea
eurentzat zenez jauna,
ikuskapena dirudi
izan zela biguna.

3
Egoismoak dihardu
lurraldea higatzen,
mendiak zabortegiz, zein
harrobiz degradatzen,
ez duelako asaben
ondarea prezatzen,
bertako kapitalak du
zitalki arpilatzen.

4
Jendartea gura dugu
guk demokratizatu,
ez dezaten handikiek
izadia bortxatu,
ez ditzaten behargìnek
irriak lurperatu,
segurtasuna dezagun
beharrean gauzatu.

5
Eibar, Ermua, Zaldibar...
Eitzagan ziren batu,
enpresa bezainbat zuten
Jaurlaritza salatu.
“Argitu gertatu dena,
beharginak topatu”,
hunkituta jende duinak
zuen aldarrikatu.

6

Arriolak ta Urkulluk
ez dute dimititu,
juezak, ez du enpresako
arduraduna deitu,
Eitzagan zertu delako
hamaika bat delitu,
iruzurraren tamainak
arras kaltetu gaitu.

7
Koronabirusak digu
ezkutatu gaizkia,
oroitzen dugu, ordea,
zaborren luperia,
Kondiak izendatu du
*istripu* malezia,
dirutzeko azkar bete
duenean (zabor)tegia.

8
Alberto ta Joaquin entzun
taupaden desioa,
arrats oskorrian gure
sentimendu zintzoa,
zuentzat txera, lamien
errekatxo naroa,
aterperik aratzena
Ama-Lurren altzoa.

*2020ko apirilaren 5ean*

954
**Zurekin bizi nahi dut**

1
Gogoak sentiera gidatu dit,
ez nadin irten biluzik kalera,
gaurko herria ezagut dezadan,
lehengoa, ez delako gaurkoa,
ez diezazkidan irudi kalean
ohitura berriak bitxiak.
“Zurekin bizi nahi dut”, diotsut,
egunak harmonian konpartitzeko,
neguko leizea lagata
udaberrian aterpetzeko,
hamaika urte ilun igarota
goiztiriak goza ditzagun.

2

Espetxean hogei urte emanda
urrian herrira bueltatuko naiz,
kideak nahitaez agurtuta,
ez bainaiz haren pozik irtengo,
gure kemenak auzolanean
bengantzaren gandua uxa dezala.
Zugaz maiz kideak mintzagai
bizitzaren partaide direlako,
euren txerak onik ekarri nau
zure habiara laztana,
zuk dakizu geurea mimoz blai,
maitasun joria izango dela.

*2020ko apirilaren 5ean*

955
**COVID-19ak erakutsi diguna**

1
Uholdeak edo lurrikarak
gertatzen direnean,
azalarazten ohi dira
gure sen txarrak eta onak,
COVID-19a dela medio,
herrian ikusi ditugu
jende berekoien harrokeriak,

eta solidarioen balentriak.
Krisiak erakusten dihardu
jendartearen egoera,
gaizkiaren hedadura,
etikaren sakontasuna,
ez gara haren indibidualistak,
kooperatzeko grinak zutik dirau,
gehiengoa zinez prest dago,
laguntzeko behar duenari.

2
Merkatalgunean tupust egin dute
eskuzabalak eta zekenak,
elkartasunaren ereduak,
eta harrapari lotsagabeak,
batak ohorea merezi du,
besteak berriz, errieta,
birusak ohartzeke azaldu digu
zer egin zitalak zentzatzeko.
Pandemia gogortu bezain azkar
bisita barik laga gaituzte,
beharra ulertzen dugu, ordea,
presoak herritarrak garelako,
birusari aurre egiteaz gain,
gurekin maitez mintzatzen zarete,
zuekin pozarren batuko gara
lurralde hobea obratzeko.

*2020ko apirilaren 5ean*

956
**Feminismoaren Internazionala**

1
Egun, nekez dantzugu
Internazionala,
sozialismoaren
himno mundiala,
kontsumismoa denez
gure arrakala,
Europan ezkerraren
Indarra apala.



2
Ortodoxo zurrunak
komunista txarrak,
maiz izan dira euren
emaitzak kaskarrak,
zelai iraultzailean
landatuz laharrak,
burokraziak ditu
ihartu zuztarrak.

3
Sozialdemokratak
bankuen kuttunak,
kapitalismoaren
aurkari aizunak,
eurentzat aldaketak
direnez astunak,
idealak geratu
zaizkie urgunak.

4
Utopia berria
guretzat fedea,
egikarituko dugu
bidean xedea,
auzolana zinez da
izango atea
solidaridadea
ta ongizatea.

5
Tesi, antitesi ta
sintesi, ardatza,
urratsak emateko
metodo aratza,
oskorri gura dugu
herrian arratsa,
senti dezagun bake
zuzenaren hatsa.

6
Teoria praktika
barik huts itzela,
ametsak zertzeko bat
etor daitezela,
munduan adorez jo
eginda txanbela,
ongia izango da
behingoz erregela.

7
Feminismoa gaurko
sozialismoa,
patriarkatza izan
dadin hauts multzoa,
feministen etika
delako naroa,
jendea izango da
Ama-Lur lakoa.

8
Berdintasuna izan
dadila oraina,
gure bizitza izan
dadin atsegina,
guk egin nahi dugunez
ekinez ezina,
Argala *Izar Gorri*
zu gidari mina.

*2020ko apirilaren 12an*

957
**Kafearen unetxoa**

1
Kafea kideekin hartzera
xortaka poliki edanez,
zigorraldiaren zokoan
unetxorik bereziena,
korrikan aritzeko ondoren,
edo sorkuntzan pausatzeko.
Kafe bikoitza ohiko motorra
eguna kemenez eratzeko,
ziegan goiari eusteko,
etsipenari aurre egiteko,
alternatiba ideala
pilulak zein tabakoa uzteko.

2

Kafea edabe magikoa
nagiak ateratzeko,
askatasunari buruz mintzatzeko,
utopia irudikatzeko,
askatasunari buruz mintzatzeko,
suspergarri boteretsua
maitasunaren kilimak sentitzeko.
Kafeondoaren hazi gorria
txigortuta beltza,
birrinduta eta bikain prestatuta
kikaretan usain ona zoria,
Arabiga, zein Robusta izan
bizitzak hobea dirudi.

*2020ko apirilaren 12an*

958

**Koronabirusa eta gu**

1

Gizateriaren *etsai*,
zure aurretik orain bezala,
pandemia franko mundu globalean,
Osasunerako Mundu Erakundeak
alarma gorria piztuta,
musuaurrekoen ekoizleak,
eta farmazeutikak pozik.
Wahamgo azokan agertu zara
piztien zeluletan parasitatuta,
Txinatik edonora abiatu gero,
jendeak ohartzeke garraiatuta,
orain etxetik ezin irten barik,
eta berri faltsuekin xaxatuta,
zure izena aldiro dute
ergelek madarikatzen.

2

Birus arras ñimiñoak
zuekiko maiz destaina totala,
estatuek baliatzen zaituztete,
arazo latzak ahantz ditzagun,
pobrezia eta gerrak,
errefuxiatuen ataka,
kontsumismo jasangaitza,
gatazkaren demokratizazioa.
Zuek koronabirus xumeak
guk lez, izakiak zarete,
Ama-Lurren eremuan
eboluzioaren emaitza,
arren, lagun iezaguzue
berekoikeria gaixotzen,
berdintasuna lora dadin,
klaserik gabeko feminismoa.

*2020ko apirilaren 12an*

959
**Erantzukizun zibila zer den**

1
Ogasunak gaztigua
igortzen dizunean,
ondoezak harrapatzen
zaitu amaraunean,
kartzelan arras belztuta
irteteko unean,
galernaren mende zara
hasiko arraunean.



2
Erantzukizun zibila
tramankulu zorrotza,
estutzen zaituelako
mintzen dizu bihotza,
barruan hogei urtetan
usainduta gorotza,
askatasuna hola zait
iruditiko motza.

3
Bizitza baldintzatuta
aldapa erraldoia,
noizgura gara dezake
mendekuak zikloia,
zuzentzak saka dezala
bakearen botoia,
gatazka konpon dezagun
ezabatuta lohia.

4
Ez-demokratak gaizkia
ari dira xaxatzen,
erantzukizun zibila
maltzurki inposatzen,
guk, berriz, ongia josten
dihardugu mintzatzen,
giza eskubide denak
guztirentzat obratzen.

5
Bidegabeen asmoa
denez gu txikitzea,
orain bezala, bortxaren
sastrakan segitzea,
plazetan eman dituzten
urratsak sustatzea.

6
Garaile-galtzaile denez
estatuen legea,
erantzukizun zibila
presoentzat katea,
tinko eginkarituta
solidaridadea,
Harrera elkartea da
izango garailea.

7
Ez ditzan kide zintzoak
ogasunak kikildu,
isun bihozgabeekin
gorrotoak umildu,
euren ondra babesteko
kemenez gara bildu,
faxistak ditzagun denon
onerako isildu.

8
Preso ohiak herrietan
bizi daitezen lasai,
zentzuak esango dio
proposamen honi bai,
“erantzukizun zibila
utz dezagula ezgai”,
“ta Aieteko bidea
auzolanean amai”.

*2020ko apirilaren 19an*

960

**Isolamenduen patioak**

1

Hogeita bost metro luzeran,
hamar metro zabaleran,
horma gotorrak garaiak,
txarrantxa biribilak zorrotzak,
eguna oskarbi hasi arren,
patioa beti petrala.
Esparruan patioak ia biluzik,
 teilatuaren hegala aterpe,
komuna aterik gabe,
eta mahai metaliko urdina,
kurloiak ekaitzarekin gordeta
gure hitzek porlana girotzen dute.

2

Patio hauek arras krudelak,
burmuin kriminalen obrak,
espeak atsekabe daitezen,
edo ziegan ero gero,
udaberriaren pizkundeak
goiari eusten laguntzen digu.
Patio estu aspergarrian
ortua ekinez egina,
kafearen une atseginean
ezerezak oasi dirudi,
kirola zoriaren hauspoa da,
irudimena urrea.

*2020ko apirilaren 19an*

961
**Itziar Aizpurua Egañari**

1
Itziar, zure etxarteko loreak
ziegan alaitasunak,
argazki zoragarria
mahaian edertasuna.
Petalo arrosak eta zuriak
usain oneko lurrina opatzen,
erleak nektarra gutiziatuta
Deban lorautsa hedatzen.
Itziar, zuk hamaika lore polit
gutunetan maitez bidali didazu
zigorraldia, ez da haren iluna
zure atsegina dastatuta.
Zu Deban itsasoari beha
Jokinekin, Txabirekin... txeraz mintzatzen,
berdin Malloetan krabelinak pausatuta
Aritxulegin zenegien lez.

2
Jokinekin hunkituta lehen lez,
beste era batean bizi zara,
klandestinidadean elkar ezagututa
zuen maitasuna oparoa.
Burgosko prozesuan arrisku bizian,
kartzeletan luze bananduta gero,
batzeko, berriz, ilusioz blai
Askatasunaren Ibilaldian.
Zu Itziar, beti aberriaren alde
pianoan jota lehenengo notak,
zugaz eta Jokinekin ni laket,
herri solidarioa gure nahia.
Zuek militante eredugarriak
deserriko kideak laztantzen,
zuen epela aldiro sentituta,
lore mardulak Ama-Lurraren deia.

*2020ko apirilaren 19an*

962
**Gure mina buka dadin**

1
Laztana zu adina
ari naiz sufritzen,
zure kinka larriak
sakon nau hunkitzen,
bizinahia minekin
zaizunez urritzen,
burua zait zer egin
pentsatzen goritzen,
txeraz hasiko gara
sumina gutxitzen.

2
Arren, gauean zaindu
gaitzala ortziak,
goizean izpiekin
esnatu ekiak,
arratsean dotore
agur oskorriak,
arnas ditzagun usain
oneko liliak,
zoragarriro bete
bat eginda nahiak.

3

Gaur, berriz penaz entzun
ditut zure hitzak,
arras makaldu dizu
gorputza bizitzak,
ilusio xaloa
xurgatu zimitzak,
ez diezazula ostu
irriñoa gaitzak,
gozo irents ditzagun
ametsen gurbitzak.

4
Nire xedea da zu
maitez sendatzea,
gure artetik mamu
beltza uxatzea,
enpatia sustatuz
gustura batzea,
izadia, etxea...
zugaz dastatzea,
eskutik oratuta
zintzo hegatzea.

5

Sentierak lorezta
ditzagun kemena,
aurpegian, ez dadin
heda etsipena,
saihets dezagun une
ilunen eztena,
gidaria izango
denez gure sena,
gidaria izango
denez gure sena,
hur sentituko dugu
zirrien orena.

6

Laster ailegatuko
zaigu pizkundea,
baikortasuna izan
dadila fedea,
alaitasuna, berriz,
minaren ordea,
magiaz hornituko
dugu sukaldea,
gonbidatzeko gure
talde ahaidea.

*2020ko apirilaren 26an*

963

**Koronabirusak pentsarazi digu**

1

Koronabirusarekin jendea etxean egonik
hiriak ia hutsik geratu direnez,
Iruñeko karrika lasai batean
ahatea eta kumeak ilaran,
Miarritzeko hondartza ospetsuan
flamenko dotoreak atseden hartzen.
Pentsarazi beharko liguke,
estres barik gertatzen ari dena,
kontsumismo mugagabea
izakiontzat heriotza denez,
azeleragailua galga dezagun,
ingurugiroa hobetu dadin.

2
Birusa dela medio,
luzaro etxean gordeta,
kontzientziak maiz diotsue,
“gutxiagorekin bizi zaitezkete”,
bizitza ezin daitekeelako izan
kontsumitzea dena kutsatu arte.
Kartzelan krisi hau jasanda diogu,
“zorionez blai bizi gaitezke”,
berekoikeria zokoratuta,
irrika materialista zentzatuta,
espiritualitatea hobetsita,
auzolan naturala praktikatuta.

*2020ko apirilaren 26an*

964

**Abya Yala berdintasuna izango da**

1

Txilen Sebastian Piñera presidenteak
errepresioa hobesten du,
Pinocheten garaian lez, polizia
tiroka gazte kementsuen kontra,
kikiltzeko zuzentza eskatzen dutenak,
bizitza oparoa denentzat,
zergen onuradunak goikoak direnez,
gehiengoak, ez dauka ongizaterik,
“ezin gara lazerian bizi”, diote
aberatsa den lurraldean.

Salvador Allende, Victor Jara...
Txilen grebalariek ondratu dituzte,
sozialismo hura harmonian pitz dadin
maputxeen eskubideekin batera,
*Te recuerdo Amanda* abestu dute, [1]
*El derecho de vivir en paz* gitarrekin, [2]
munduak xedea uler dezan,
klaserik gabeko jendarte berria,
Trumpek eta Piñerak jakin dezaten,
herri batuak garaituko duela.



(1) *"Amanda oroitzen zaitut"*
(2) *"Bakean bizi izateko eskubidea"*

2

Janine Añezen bandaren oldarra
indigenak baztertzeko arrazismoa,
Boliviako soldadutxoaren
kontzientzia diru petrala,
multinazionalen alde bortizki,
aurrekoek lez, herritarrak hiltzeko,
La Pazen sarri izan dira
gobernuak diktadura militarrak,
René Barrientosenak 1967ko urrian
Che Guevara erail zuen.

Simon Bolivarren oroitza amesgaiztoa
litioa ustiatu nahi dutenentzat,
"Evo Morales itzul dadila",
ketxuen, aimaren... desioa
hizkuntzei, kulturei... eusteko
kolonoen estatu kolpea gaintzeko,
inperialistak Abya Yalatik at
Bolivia behingoz denena izan dadin,
Wiphala polikromatua ortzadarra,
berdintasunaren bandera.

*2020ko apirilaren 26an*

965
**Chauvinista zein den**

1
Chauvinistak sorlekua
grinaz du goraipatzen,
baina besteenak ditu
sutsuki mespretxatzen,
gorrotoa kontzienteki
aritzen da sustatzen,
aniztasun oparoa
burugabe zulatzen.



2
Nahiz jakobinoak izan
ziren aurrerakoiak,
chauvinista batzuek maiz
dirudite naziak,
Frantziak ia itzali
ditu herri txikiak,
oilar harroxko lapurrak
manten ditzan bitxiak.

3
Chauvinistak izan ziren
inperio likitsak,
monarkiak, diktadurak,
genozida bortitzak,
herriak suntsi zituen
anker haien irritsak,
etnien oihan ugari
egun dira harritzak.

4
Pentsamendu chauvinista
bakearen etsaia,
elkartasuna gaixotzen
ohi duen minbizia,
aterpetzea kultura
guztiak terapia,
mundua herri denentzat
izan dadin habia.

5
Chauvinistak, zentralistak...
zarete berekoiak,
zuekin ugaltzen dira
gatazken sasidiak,
Utz itzazue eskuindar
makurren lubakiak,
guda barik eman ditzan
fruituak utopiak.

6
Chauvinista frantziarra
izan zaitez noblea,
kulturaniztasunaren
zolan militantea,
hizkuntzek izan dezaten
euren alde legea,
merezitu dezan zure
aberriak ospea.

7
“Chauvinista zara”, diost,
internazionalistak,
nik maite ditut, ordea,
edononongo dilistak,
nik, bera adina ditut
gaitzesten arrazistak,
patriarkatza petrala,
matxistak ta faxistak.

8
Aizu, ez naiz chauvinista,
baizik abertzalea,
konkistatu baitziguten
tiroka lurraldea,
gure nahia da herri hau
hobea izatea,
solidarioa eta
feminista, librea.

*2120ko maiatzaren 3an*

966

**2019ko abenduan Anaitasuna haurrez mukuru**

1

Pirritx, Porrotx, Marimototx... ongileak,
haur lañoak alai hezten,
kantuen hitzekin oro hunkitzen,
irriak txoriekin konparti ditzaten,
Ama-Lur, Basajaun eta Maririekin.
“Arrazismoa kaka”, diotsete.
“Aniztasuna ostadarra”,
munduko haur xaloak lagunak
berdintasunaz gerrak lurtzeko,
Euskal Herria hobea izan dadin,
pobreziarik gabe maitasunez blai.

2

Maya auzapez eskuindarraren erruz
Iruñeko haurrak goibelduta,
Baluarte bidegabe ukatuta
ikuskizunik gabe laga die,
Pirritx, Porrots, Marimototx, euskara...
gorrotatzen dituelako.
Pailazoek sudurrik gorri galantena
Maya zekenari bidali diote,
*Bizi dantza* obra zoragarria
“bai edo bai antzeztuko dugu”, esateko,
iruindar txikiak fantasian hegaldari
algaraka sorgindu daitezen.

*2020ko maiatzaren 3an*

967
## Kondia baserriko semearen zaborra

1
*Verter Reciclyng* enpresak
Eitzagan egin duena ikusita,
antzinako esaldia esan dugu,
“aberatsen aberria dirua”.
Mingarria kondiako semeak
sorlekuari egin diona,
bere zabortegiaren luperiak

eragindako hondamena.
Baserritarrak mehatxatuta
furano eta dioxinekin,
zaborpean dauden beharginen hurkoak
otsailaren seitik atsekabetuta,
errekak, basoak, izakiak, herriak...
ordutik kutsaduraren mende,
ustezko euskal oasia, berriz,
hondakindegi bihurtuta.

2

Kondiak xede ilunak lortuta,
Donostian aspalditik laket,
elitearekin elkartuta,
estatus dotorean hordituta,
aberats berriek harro dagite
geurean legez, munduan aldaketa,
euren bazterrak degradatu bezain azkar
paradisuetara joaten dira.
Kondiaren handinahi aseezina,
bere gertuko baserritarren kaltea,
politikoen ikuskapen eskasa,
euren boto-emaileen ondoeza,
Ama-Lurrek kudea dezala
berekoiaren dirutza lizuna,
Eitzaga berriro aratz izan dadin,
umetan ezagutu nuen auzo ederra.

*2020ko maiatzaren 3an*

968

**Zortzi bertso isiltasunaz**

1

Oihuka mintzatzea
ohi denez jarrera,
isilik hausnartzea
zintzotzeko era,
egin dezan harreman
eskasak hobera,
izan dezagun berriz
biltzeko aukera.



2

Senarentzat onura
da isiltasuna,
gorputz nekatuentzat
zinez osasuna,
zarata-kutsadura
delako astuna,
ekiditeko sina
dezagun ituna.

3
Isilik entzungo dut
zuen iritzia,
nire hitzak ez dezan
motz hizketaldia,
begirunea izan
dadila hazia,
ereiteko ideia
zuzenen zelaia.

4
Bakean entzun nahi dut
zuen sinfonia,
isilik sentitzeko
gertu goiztiria,
amaitu dadin gerra
legez, pobrezia,
feminismoak ekar
dezan utopia.

5
Orain hots barik lasai
dantzuzkit bertsoak,
kotxerik gabe garbi
haurren irriñoak,
atsedena ostuta
sistema eroak,
naro opatzen digu
Iratin basoak.

6
Laket zait isiltasun
leunaren soinua,
karnabaren kantua,
hontzaren ulua...
Horrela maiz dakusat
oskorri zerua,
zirrarak marrazten dit
ederki musua.

7
Oi, Ama-Lur isila
eta dotorea!
Zure altzo biguna
noizbait aterpea,
sumatzeko zurekin
pil-pil pizkundea,
lorautsa lorez-lore
hedatzen erlea.

8
Zalapartarik gabe
bizitza eztia,
nik pasatu nahi nuke
horrela aisia,
gozatzeko lehen lez,
egun oskarbia,
maitea, Urbasa zen
zurekin zoria.

*2020ko maiatzaren 10ean*

969

**Izurrian tristura eta esperantza**

1

Koronabirusa hedatuta
tristura sentimenduan,
hamaika gaixo ospitalean
hurkoen epela sentitu barik,
medikuak, erizainak... izerdiz blai
txera ia ezin eskainita.
Aitxak azken hatsa bakarrik eman du
zainketa intentsiboen unitatean,
gure eskuak ikutu nahian
laztanekin bakean joateko,
hileten aginduaren eraginez
dolua interneten gozatu dugu.

2
Izurria edonon tragedia,
txertorik gabe, maiz hilgarria,
esperantza heldulekua
aurre egiteko beldurrari,
etxean zintzoki gordetzea
diziplina eraginkorra.
arrastiro zortziretan txaloak
ospitaleko kementsuak aupatzeko,
datorren krisian egin beharko dugu
keinu hori baino askoz gehiago,
geurean handituko diren gabeziak
auzolanean osa ditzagun.

*2020ko maiatzaren 10ean*

970

**Maitemintzeko bi paradisu**

1

Arretxeko San Pedro eta Ogoño,
Ibarrangelu eta Elantxobe,
Bizkaiak besteak beste dauzkan
aisia dastatzeko bi paradisu,
zugaz hiruzpalau aldiz egon nintzen,
ikusmirak liluratzen gintuen,
altxor horien magiari esker

gure maitasuna kresalaz blai.
Eguraldiak laguntzen zigun
prezatzeko inguru zoragarriak,
hegoagaz Izaro hur genekusanez
gu zorionean besarkatuta,
Eibarrera abiatzeko unean
gogoan bizinahiaren oihartzuna,
gure desioa azkar itzultzea
sentiera berriz pilpilka sentitzeko.

2

Kartzelan zuek nigandik urrun,
ametsetan agertzen zarete, ordea,
kutsadura zuengana heldu barik
aire sanoa opatzen duzue,
Gaztelugatxe baino lasaiago zaudete
herritar xumeekin estres barik,
turismo kontsumistatik at,
zuen bazter aratzak, gustagarriak.
Askatasunerako asmo bat
zuek maiteagaz ostera ikustea,
eriak, ez gaitzala moztu plana,
orduko bizipoza goza dezagun.
Oi, Arretxeko SanPedro eta Ogoño,
Urdaibai eta Kantauri itsasoa!
Zuen lurrinekin eta koloreekin
maitaleak plazerez mukuru.

*2020ko maiatzaren 10ean*

971
**Gure himnoak**

1
Himnoek darakutsate
estatuen tasuna,
maiz dira inperioen
konkisten oihartzuna,
hitzen arloak, marrazten
du iragan iluna,
musikarenak, eztitzen

patriarken jarduna.

2
Eskuindarrak boterean
direlako harroak,
aberkide batzuk dira
izaten kokoloak,
Munduko futbol kopan da
diostana gogoak,
zur eta lur adituta
chauvinisten himnoak.

3
Mesedez gal daitezela
eresi epikoak,
garaipenen gurtza diren
poema lirikoak,
metaforekin onduta
himnoak herrikoak,
izadiak dioskuna
jasota magikoak.

4
Ereserkiak edonon
izan daitezen txera,
gizatasunari eman
diezaiogun aukera,
poeta gazteek konpon
dezatela afera,
apologia joan dadin
hitz lauekin urpera.

5
Noizbait hautatuko dugu
gure ereserkia,
sentimentalki batuko
gaituen olerkia,
arima denentzat izan
dadila egokia,
kantuz izan dadin mihi
gorrien gozokia.

6

Ez da matxista izango
himno hunkigarria,
islatu behako du
herritar duinen nahia,
aniztasun oparoa,
feministen gidoia,
Ama-Lurren pizkundea,
biharko utopia.

7
*Gernikako Arbola* da
foruen aldarria,
Iparragirrek salatu
zuen injustizia,
gaur herri anitzak behar
du independentzia,
hola ondratuko dugu
himnoen historia.

8
Zazpi euskal herrietan
*Txoria txori* zina, [1]
Laboa eta Artzeren
arteko obra mina,
batera kanta dezagun
olerki atsegina,
oro usaintzeko gure
herriaren lurrina.

*2020ko maiatzaren 17an*



---

[1] *Olerkia Joxean Artzerena da, eta doinua Mikel Laboarena.*

972

**Zuloan leihoak petralak**

1

“Hor goian zeozer egon behar da,
hormako leihoaren ostean,
auskalo zergatik ezarrita dauzkan
burdin sarea eta barra handiak”,
Xabiertxok jakin-minez esan die
Jone, Oihane eta Asierri,
Iturri gainera igo aurretik
ezezaguna ikusteko asmoz.
Mutikoak eta neskatoak txandaka
kuxkuxean ari dira,
baina barrua ilunik dagoenez,
leihoaren hautsa soilik dakusate,
laurek zapuztuta erabaki dute
patinetearekin berriz jolastea,
misterioa ezin argituta
nor bere bostean pentsakor.

2
Oihanek bat batean esan die,
“gaur, Irati ama ikustera joan da,
Mirentxin furgonetan aitxarekin,
Espainiako espetxe batera”.
“Agian gordeta daukaten ziegak,
horrelako leiho bat izango du”.
Laurak gora begira geratu dira,
musuan tristura islatu zaie.
Umeek irudikatu dute
Iratiren amaren ataka,
zer izan daitekeen bizitzea
herritik at luzaro zuloan.
Iratirekin ikastolan mintzatu dira,
jakiteko amak bisitan esan diona,
“maiteak zuentzat laket zuzena nahi dut,
leiho petral bako herri librea”.

*2020ko maiatzaren 17an*

973

**Gure patu makurra**

1

Espetxean nekez islatzen da
udaberria murruetan,
isolamenduan pizkundearen printzak
txarrantxetan geratzen dira,
leotzetan ilunabarra
ikusmenetik al daukagu,
leihotik ortzia ezin ikusirik
artizarraren distira desira.
Gaua lo egin barik pasatzen dugu
goiztiriaren zain gaudenok
ametsetan betazalak bilduta
ongizatea irudikatzeko,
giza eskubideak mardulduta,
gorrota zimelduta,
maitasuna hauspotuta,
Euskal Herria hobea izango da.

2
Noizbait nahia borobilduko dugu
joan ziren kideen xedea,
korapiloak desegiteko
berba eta hatzak gure tresnak,
deserrian gaudenon asmoa
herrian aktiboak izatea,
gaurko ez-demokraziaren sastraka
zuekin baratze bihurtzeko.
Bortizki galdutako askatasuna
tinko eskuratzen saiatzeagatik,
ezlekuetan luze bizitzea,
euskaldun askoren patua.
“Arren, azken belaunaldia
geurea izan dadila”,
asteroko gure gutunetan
hunkituta idazten dugu.

*2020ko maiatzaren 17an*

974
**Mari eta Basajaunen nahiak**

1
Herria izatea
gure esku dago,
bat eginda izango
da erosoago,
gaur, ez dadila izan
borroka hordago,
baizik eskubideen
alde tinkoago.



2
Orain, frantsesak edo
espainolak gara,
historiak bidali
gintuen sutara,
arras ilundu zaigu
ordutik euskara,
on dadin pitz dezagun
hamaika ganbara.

3
Gogorrak izan dira
azken bi mendeak,
gerrek erre zituzten
gure lurraldeak,
ia utzita gero
barik uholdeak,
negarrez urtu ziren
euskaldun jendeak.

4
Mugekin ia galdu
dugu harremana,
lanbrotuta daukagu
asaben izana,
nahiz hori den estatu
zekenen afana,
ereiten ari gara
Ametsen harana.

5
Guretzat egin zenez
Europa kartzela,
gure kinka kaskarra
zinez da krudela,
konpartitu nahi dugu
zintzo urmaela,
sentitzeko herrien
txeraren epela.

6

Libre bizi nahi dugu
gure eremuan,
ateak irekita
gogoa munduan,
mardulik loratuta
kultura zoruan,
*Txoria txori*, haurrak
zirraraz kantuan.

7
Zazpiak bat desira,
helburu xumea,
herri hau izan dadin
denentzat etxea,
irteera izango
da ongizatea,
solidaridadera
heltzeko bidea.

8
“Ekaitzaren ufada
atertu ostean,
bakea nahi dut Euskal
Herriko partean”,
Marik Anboton grinaz
diosku leizean,
Basajaunek bezala,
Irati hezean.

*2020ko maiatzaren 24an*

975

**Izurriaren ostean zergak behar sozialetarako**

1

COVID-19ak eragin du
lurrikara jendartean,
erizainek eta medikuek
iragarritako ataka zertu da,
zergekin AHT lakoak sarituta,
sanitarioen kopurura murriztuta,
sarraski izugarriak

nagusien egoitzetan.
Etxeetan konfinatuta
nagusien hurkoak goibelduta,
biloben, aitxitxen, amamen...
harremanak nahitaez moztuta,
internet aukera bakarra
ezinegona gozatzeko,
esperantzari eusteko,
orainetik laztanetara heltzeko.

2

Ez dezala birusaren osteko krisiak
kapitalismoa egonkortu,
bere boterea ahulduko balitz,
berdintasuna indartuko litzateke,
tamalez, langabezia handituko da
izurria arindu bezain azkar,
zerbitzu eta tailer dezente itxita
zergak behar sozialetarako.
Berekoikeriak zabal diezazkiola
ateak elkartasunari,
indibidualismo zekenak
auzolan eraginkorrari,
ospitaleetan sanitarioena
eredurik osasuntsuena,
euren bihotz nekatuentzat
gure txalo zintzoak masajeak.

*2020ko maiatzaren 24an*

976

**Jose Luis Zumetari, Pablo Picasso gogoan**

1

Zumeta eta Picasso dantzuzkit
gure egongelan mintzatzen,
euren *Gernika* mihiseen irudiak
aurrez-aurre zintzilik pareta zurietan,
COVID-19a eta faxismoa
bi artisten mintzagaiak.
“Ez delako zilegi”, dioskute;
“herritar batzuen jarrera eskasa”.
Balkoietan eta leihoetan ergelak
poliziak bihurtu dira,
salatzen kalean dakuskitenak
euren beharrezko zereginetan.
Bestalde, “sanitarioak gugandik at
kutsatuta daudelako”, diote.
Biek Gernika gogoan esan dute,
“kontu hauekin ahizpatasuna urrun”.

2
Picassok dio, “zentralizazioa ezarrita,
herrien autonomiak giltzatuta”.
Zumetak, berriz, “dena militarizatuta,
birusa garaituko dugu lelo bortitza”.
Faxistek *errudunak* seinalatuta
arrazismoa interneten eroso,
gure Gernikak plazetan kulunka
ongiak gaizkia haizatuko du.
Zumeta tamalez, atzo zendu zen,
euskal kultura kolorez onduta,
Picassorekin bihotzetan batuko da
Gernikako bonbardaketaren datan,
hemendik aurrera mihiseak
arimetan batera margotuko dituzte,
“Gerrarik ez!”, aldarria gauza dezagun
artea gaitz barik bakean miresteko.

*2020ko maiatzaren 24an*

977
**Edertasunaren ederraz**

1
Zer da edertasuna?
Zuretzat galdera,
aizu, ausartu zaitez
zerbait aipatzera,
niretzat lehen legez,
irudi berbera,
ikustea maitea
biluzik ostera.



2
Ume baten irria
oro da ederra,
mendian den bezala,
bizirik eperra,
ziplo isil dezagun
zatarra den gerra,
hustuta lili dadin
trintxeren bazterra.

3
Gure edertasuna
zara ortzadarra,
zurekin haizatuko
dugu kazkabarra,
gatazkak duelako
mintzen herri za(ha)rra,
giza eskubideen
nektarra beharra.

4
Udaberri ederra
zu aratza zara,
maitale gazteentzat
naturan zirrara,
zinez zoragarria
ohi da zure kara,
habiara itzultzen
denean enara.

5
Pizkunde txit ederra
da mardultasuna,
beldarra, tximeleta,
kimua, asuna...
Guretzat dastatzea
denez osasuna,
jator ondra dezagun
denon ondasuna.

6

Edertasuna denez
maitasun goria,
manten dezagun txeraz
sentipen eztia,
une magikoa da
arrats oskorria,
sentitzeko pilpilka
laztantzeko nahia.

7
Deba bezain ederra
Kantaur(i) itsasoa,
Bardeak, Gorbeia zein
Aturri naroa,
izurdea, ezkaia,
loina zein pagoa,
ez dezagun gaixotu
Ama-Lur sanoa.

8
Edertasuna baita
kolore morea,
feministek digute
pizten adorea,
zintzo ari direnez
ehuntzen sarea,
bizitza izango da
eder ta barea.

*2020ko maiatzaren 31n*

978
**Billy el Niño izua zen**

1
Gonzalez Pacheco polizia ohia
COVID-19ak hil du,
maiatzaren zazpiko goiz-argian
Madrilgo ospitale batean,
estatu espainolak maiz ondratu zuen
dominak bularrean eskegita,
lan zikina ondo bete zuelako

diktaduran eta ustezko demokrazian.
Billy el Niño sadikoa
frankismoaren produktu bat,
bere erpeen mende geratzen zenak
burua kostata altxatzen zuen,
komisaldegietako zokoetan
torturatzeko lizentzia zeukan,
biktimen testigantzak entzunda
bihotza uzkurtu zaigu.

2

Billy el Niñok ez ditu inoiz
krimenak ordainduko.
Ez ditugu ahaztuko, ordea,
gizatxarraren ankerkeriak,
eragin zuen sufrimendua
gazteei jakinaraziko diegu,
gure memoria zuzen idatzita
Historiak bere lakoak mespretxa ditzan.
Gorrotoak Billy asko sortzen ditu,
botereak aldiro baliatzen,
demokrata faltsuek babesten dituzte
euren polizien praktika bortitzak,
tortura patriarkatzaren tresna
askatasunaren maitaleak suntsitzeko,
borreroek jakin dezatela,
biktimen duintasuna hautsezina dela.

*2020ko maiatzaren 31n*

979

**Izurriaren eraginez ziegak gutunez mukuru**

1

Koronabirusaren eraginez
elkartasuna emendatuta,
Sareren, Etxeraten, Ernairen... deialdiekin
ziegak gutunez mukuru,
mezu, postal eta argazkiei esker
isolamendu astuna bigundu zaigu.
Zuen atseginarekin sorginduta
begiak dirdirka ditugu,
bizigura txerarekin onduta,
“askatasuna zarete”, diogu,
zuekin kemenez ereingo dugu
Euskal Herri berriaren hazia.

2
Nire ametsak eta desioak
zuekin konpartitzeko,
lehenago edo geroago
esker ona bidaliko dizuet,
mahaian kideek lez, hausnartzen dut
zer egin zuen babesa saritzeko.
Hainbeste urte barruan giltzatuta,
zuen sentimendua ezagututa,
“Eibarren batuko gara”, diotsuet,
“lurraldeko bazter sanoetan”.
Gaurko izurri kutsakorratik legez,
konstituzio gaitzetik aska gaitezen.

*2020ko maiatzaren 31*

980
***Bertsolari* zoragarriari**

1
*Bertsolari* xaloa zu,
gure aldizkaria,
musu-truk bertsozaleak
garenon gidaria,
ariman sentitzen dugu
pozaren isuria,
zure unibertso more,

berde, gorri, zuria.

2
Patioan jaso dugu
zure azken alea,
udaberrian suspertu
diguzu umorea,
"Sorkuntza eta kartzela" da
bikote xelebrea
zigorraldia leuntzeko
sarri gure moldea.

3
Zure orriak haztatuz
pilpilka naiz hunkitu,
“Euskaldunak ta kartzelak”
mende dezente ditu.
Bertsoak, poemak... ziegan
sarri ditut mamitu,
musak gaur, nirekin dira
ametsetan horditu.

4
Presoak idazten dio
maiz askatasunari,
hamaika bertso aiduru
dagoen maiteari,
horretan zerikusirik
daukazu *Bertsolari*,
bihotzez diotsut beha
hurkoen fotoari.

5
*Bertsolari*, biltzen duzu
bertsoen historia,
bertsolariek merezi
dutelako loria,
kideko, zeuri esker dut
sentiera goria,
leitu ahala diotsut,
zu zarela zoria.

6

Zugaz zinez bertsolari
guztiak txapeldunak,
bertsozaleak bezala,
egundoko lagunak,
bizipoza zipriztintzen
du zuen batasunak
horregatik diotsuet,
"zuek gure kutunak".

7
*Bertsolari* zuk, jantziko
duzu gure txapela,
zugaz beti izango da
euskara urmaela,
zabalduta Andoaingo
egoitzan errezela,
euskalgintza dakusagu,
paradisu itzela.

8
*Bertsolari* zurekin naiz
atseginez esnatu,
aurreko murru hurbilak
ez nau ohi lez, tristatu,
zu ziegan ondratuta dut
berriz irudikatu.
Euskal Herrian naizela
kate barik pausatu.

*2020ko ekainaren 7an*

981
**(2020.04.12)**
## Aberri Eguna etxeetan

1
Aurtengo Aberri Eguna
birusa dela medio, berezia,
euskal herritarrak batu dira,
herrialdeak eta diaspora,
minutu bateko isilunean
oroitzeko COVID-19ak hil dizkigunak.
Hainbat etxe eta baserrietan
ospakizun hunkigarria,
ikurrinak eta Nafarroako banderak
dolu-xingolekin ondratzeko joan zirenak,
euskal presoen aldeko oihalak kulunka
euren beharra daukagulako.

2
Aberri Eguna aldarrikatzeko
feministak eta auzolan garela,
aniztasuna zintzo sustatuta
euskara mintzatzen indartuko dugula.
Berdintasunean elkartasuna onduta
xedeak txeraz zertuko ditugula.
Aberri Egunean konfinatuta
zaintza eta maitasuna omentzeko,
ospitalean, dendan, garraiatzen ikasten...
herria dugulako eraikitzen ere,
*Txoria txori* leihoetatik kantatzeko
hegan libre laster has gaitezen.

*2020ko ekainaren 7an*

982

**Izurria joan arte gu ere eredugarri**

1

Mundua ulertzea korapilotsua
bertan bizitzea zaila,
COVID-19arekin areago
osasuna eta dirua lehian egonik,
aberatsak *Askatasuna* oihukatzen
nahi beste kontsumitu ahal izateko,
konfinamenduan preso sentituta,
haserre aginduak hausten hasi dira.
Eskuindarrak harroki kaleetan
giza eskubideak aldarrikatzen.
Berekoikeriaren sustatzaileek
kazolak joten aurrerakoiak dirudite,
ezin digute ziria sartu, ordea,
euren kotxe eta arropa garestiekin,
multinazionalen bazkideek
soilik boterea mantendu nahi dute.

2

Euskal Herriko bizilagunak,
gazte eta heldu sendunak,
birusaren txertoa asmatu arte,
askatasuna, ez dadila parranda izan,
konpromisoa eta etika murriztuta
gure ametsak lanbrotuta,
joan zirenak hori egin izan balute,
herri hau nekez existituko litzateke.
Estatuek mugak berriz ezarrita,
konstituzioekin ahalak izoztuta,
militarrekin plazaratze maltzurrak eginda...
Izurri barik hori dena salatzeko unea,
nahia independentzia delako,
herrien arteko ahizpatasuna,
eredugarriak izan gaitezen,
ongizatea Euskal Herria deitu dadin.

*2020ko ekainaren 7an*

983
**Zoria irudikatzen**

1
Gurutzatu eta gero,
etsipenaren marra,
guztiok izaten dugu
hurko minen beharra,
euren txera dastatuta,
isilduta negarra,
arimara heltzen zaigu
zoriaren aparra.



2
Zuretzat zer da zoria?
erantzun ja galdera,
berehala etorri zait
gogotik mingainera,
laztanarekin joatea
sukaldetik ohera,
goizena abiatzeko
Arratera batera.

3
Aizu, niretzat da ere,
euskaraz mintzatzea,
zoragarria delako
elea aupatzea,
berdin maiteagaz ihintz
hezean etzatea,
feministen ideiekin
hobea izatea.

4
Zoria urrun daukagu
barruko  eremuan,
urrutiago oraindik
barruaren barruan,
baina pizten zaizunean
grina setimenduan,
pilpirako sartzen zara
desiraren zoruan.

5
Jendartean nahi dugunez
gehitu ongizatea,
argi dago zoriona
dela gure xedea,
tristea ohi da, ordea,
dirua metatzea,
jakinda joera txarrak
dakarrela gosea.

6

Zoria izan dadila
gaintzea pobrezia,
bakea zuzen piztuta
lurtzea malezia,
bankarien jardunari
ezartzea hesia,
erauztea agintari
zekenen hipokrisia.

7
Auzolanak dakarkigu
zorion perfektua,
elkartasunak bezala,
bizimodu justua,
arren, berdintasunean
jar dezagun itua,
bizitza sasidi barik
izan dadin ortua.

8
Gure zoriona izan
dadila naturala,
umeen eta helduen
izartegi zabala,
irriaren ahala,
ametsen paradisua,
ongiaren magala.

*2020ko ekainaren 14an*

984

**Kordoban 62 urte bete ditut**

1

Hirurogeita bi urte bete ditut,
azken hogeiak kartzelan,
hamaiketakoak debekatuta
ospakizun gutxi etxartean,
kideek zoriondu naute,
hurkoek telefonoz pozarren.
Aurtengo urtebetetze eguna

kartzelaldiko azkena,
izurriak bisita barik laga dit,
hola gaude martxoaren hamalautik,
Euskal Herrira eraman gaitzatela
zuen irriak berriz ikusteko.

2

Barrutik at zuekin ospatuko dut
datorren urteko urtebetetzea,
lilien hila libre dastatzea
zinez berezia izango da,
*Zenbaketa!*, oihua entzun barik
txarrantxak eta hormak ahaztuta.
Arren, kartzela hitza gal dadila
eguneroko elkarrizketatik,
urtebetetze eguna euskal preso barik
zorionez blai goza dezadan,
maitea, data zoragarrian
zurekin laket gosaltzeko,

*2020ko ekainaren 14an*

985
**Amets egiten kartzelan bizitzeko**

1
Porlana, murruak, txarrantxak...
aspaldiko ikusmira zatarra,
ohituta zeru laukizuzenera
zerumuga ezin dut irudikatu,
ilargia nekez ikus dezaket
isolamenduko ziegaren leihotik,
eskerrak plazerez blai egoten naizela
 eguzkitara kideekin mintzatzen.
Kartzelan gutxirekin bizitzera ohituta
bizimodu xumea hobesten dut,
kontsumista grinatsua izatetik,
senduna izatera igaro naiz,
kideekin egunero konpartituta
irriak eta tristurak,
gizaki hobea izateaz gain,
osasuna eurekin zaintzen dut.

2

Nire sentimenduan loratuta
taupadetan sentitu zaitut,
ohean zure usaina oroituta
hegatzen hunkituta hasi naiz,
ostadarrean biok kulunkan
xuxurlatuz hitz atseginak,
“goazen askatasunera”, esan didazu,
“ziega ilunetik gure lur dirdaitsura”.
Ametsetan zurekin biluzik
naturan maitasuna arnastuz,
gorputza eta gogoa gozatuz
arrats oskorritik goiz-argi oskarbira,
esnatzeko presarik gabe
dastatzeko erabat unea,
kartzelaldiari aurre egiteko
modurik hoberena.

*2020ko ekainaren 14an*

986

**Munduko kultura euskaraz**

1

Euskaltzaindiak lez, guk
*Ekin eta Jarrai*,
kexaka penaz baino
hobe jardun alai,
*diglosia* izana
gera dadin ezgai,
euskarari esango
diogu grinaz blai.



2

Herrian kulturaren
alorrak blaituta,
baina gurea sarri
dago horituta,
bertako esporekin
naro hornituta,
bihotza geratuko
zaio lilituta.

3
Islandian daukagu
garbi eredua,
itzulpengintza baita
bertan ekandua,
euren ele minera
dakarte mundua,
guk aurkitu beharko
genuke modua.

4
Euskaraz nahi ditugu
filmak ongarritu,
antzerkiak, berriak...
entzun eta leitu,
hortaz horretan behar
dugu *inbertitu*
Islandian lez dadin
geurea ongitu.

5
Munduarena gure
dagigun bezala,
munduak gure printzak
ezagut ditzala,
geurea ta eurena
uztartu ahala,
kultura izango da
duinki mundiala.

6

Jar dezagun auzolan
sanoa abian,
herriño jatorrekin
batzeko ortzian,
multinazionaletik
kanpo harmonian,
txit gozatuko dugu
kultura aisian.

7
Artistak idazleak
pailazo xaloak...
kantariak adina
hunkitzen iaioak,
guretzat zaretenez
oro magikoak,
dastatu nahi ditugu
obra oparoak.

8
Euskal Herriak gazte
dezan bere kara,
denok batera ondu
dezagun euskara,
kultura izan dadin
umeen algara,
zinez esan dezaten
“euskaldunak gara”.

*2020ko ekainaren 21ean*

987

**George Floyd zure bizitzak axola zuelako**

1

Esklabotza jardun ankerra izan zen,
euskaldun batzuen negozioa,
Afrikan gizakiak bahitzen zituzten
Ameriketan kolonoei saltzeko.
1865. urtean esklaboak
libre geratu omen ziren,
baina arrazismoak dirau,

Europan, Estatu Batuetan... kaltea.
Martin Luther Kingek amets egin zuen,
berdintasunean bizi ginela.
Desobedientzia zibil baketsuaz
bidegabekeriak gaindu genituela,
supremazista zurien erantzuna
artzain baptistaren erailketa,
bost hamarkada geroago orduan lez,
afroamerikarrak bortxaren ituan.

2

Derek Chavvin poliziak George Floyd hil du
lepoa gupidagabe zanpatuta,
baina diru faltsua ez da zioa izan,
baizik beltzekiko gorrotoa,
Ku Klux Klanen ideologia sustatuta
halako hamaika bortizkeria,
Minnesotako krimenak astindu ditu
munduan arras kontzientziak.
Trump presidentea xenofoboen liderra,
gasolina nahita isurtzen suari,
dendak arpilatzen dabiltzan horiek, berriz,
borroka zertarako den, ez dute ulertu,
manifen xedea eskubide zibilak ja,
beltzen bizitzak axola duelako,
gizateria ahizpatasuna izango dela
Angela Davisen ametsa, eta gurea.

*2020ko ekainaren 21ean*

988
**Gure Zirkuari**

1
Kideen ariketak ikusita
Gure Zirkua irudikatu dut,
arren, udan Covid 19ak
ez dezala ikuskizuna galaraz,
herritarrak iaz lez, alai daitezen
karpa koloretsuaren barruan.
Zirku txikiak ekitaldia
maitasunez eratzen du,
euskara ikuskizunean
natural uztartuta,
herri txikien funtzioetan
haur lañoak sorginduta.

2
Zirku txiki xume erraldoia
haurren irri eta zirraren gunea,
pistan izaki bakarrak gizakiak
animaliak maite dituelako,
trapezistak, malabaristak, pailazoak...
sentimenduak kitzikatzen artistak.
Kartzelan Gure Zirkua-ko lagunak
eguzkia beste goresten zaituztegu,
noizbait zuekin topo egindakoan
zuen artea txalotuko dugu,
ariketak miresgarrien izarrak
zoragarriro bizigura zarete.

*2020ko ekainaren 21ean*

989
**Zuloa iragan bihur dadin**

1
Egun, euskal presoek
darraite zuloan,
plazetan batzen gara
eurekin lerroan,
gurekin bizi dira
aldiro gogoan,
arrats oskorrietan
ametsen txokoan.



2
Kartzelen historia
gurean tristea,
ariman sakon dugu
sentitzen kaltea,
ezagututa gure
presoen xedea,
eurekin ari gara
egiten bidea.

3
Estatuak direnez
nahita sadikoak,
badakigu zer diren
euren zomorroak,
dardarka pairatuta
torturen zokoak,
maiz oroitzen ditugu
bortxaren garroak.

4
Herrian zentzuz esan
dugu nahikoa da,
bengantza eror dadin
galduta hegada,
ongiak izan dezan
jaisteko parada,
isiltzeko estatu
bortitzen danbada.

5
Gure zoriona da
preso minen nahia,
higatzen ari dira
herraren harria,
bueltatzeko eguna
nahi dute joria,
zuzen zertzeko gero,
independentzia.

6
Gure maite xaloak
oinez ari dira,
gatazka konpontzea
delako desira,
tunel beltzean dute
ikusi distira,
bertara azkar doaz
heltzeko herrira.

7
“Azken euskal presoak
laga du kartzela”,
herrian albistea
izan da itzela,
auzolanak lurtuta
ataka ustela,
museoan ikusgai
presoen kartela.

8
Txarrantxen eta hormen
zama gaindituta,
gaur plazan dakusagu
mardul lilituta,
preso ohien artean
dago hunkituta,
izar gorriak legez,
zirraraz blaituta.

*2020ko ekainaren 28an*

990

**(2020) EHZ Irisarrin,**
**Covid-19k uzten badio**

1

Euskal Herria Zuzenean Irisarrin
iaz lez, joria izan dadila,
auzolanaren maitalea,
gaztediaren konpromisoa,
Bilboko BBK Live-ren aurrean duina,
multinazionalen distiratik at ederra.
EHZ gure eredua da,
kilometro zero hobetsita,
familiaren igandea sustatuta,
gazte zoragarriek euskarari
arnasgune mardula opatuta
herrigintza zer den dakite.

2

EHZ-k hiru hamarkada bete ditu
musikaz, antzerkiz, tailerrez, hitzaldiz...
gazte sentimentalek sortu zuten
kultura hauspotzeko herriaren alde,
idealista haiek xedea lortuta
gaurkoek lurra ongarrituta daukate.
EHZ euskaldunak batzeko,
elkar naturalki ezagutzeko,
adorea ez denez lurrundu
ihintzak pentzeak blaitzen ditu,
Irisarri, zu euskal sukaldea zara,
gaztea, feminista, unibertsala...

*2020ko ekainaren 28an*

991
**Faxistak giza eskubideen hiltzaileak**

1
Espainiako eskuindarrak
Frantziakoak ez, harroputzak,
konkistatzaile anker haien
oinordeko nostalgikoak,
euren ideal atzerakoiei
Francoren kiratsa darie,
Cadizko konstituzioak, 1812an lez,
eskubideak erauzi nahi dizkigute.
Eskuindarren mingain pozoitsuak,
ez dira sekula isiltzen,
izurriaren garai tristean
gezurra hedatzen ari dira,
Trump populista euren eredua
jende ezjakina limurtzeko,
askatasuna eskatzen dute,
Covid-19ari garrantzia kenduta.

2

Diktaduren gurtzaileek,
Francoren senideen lagunek,
*bortitzak* deitzen dizkiete
giza eskubideen maitaleei,
euskal herrietan halakoak,
ez ditugu nahi inguruan,
naziek, frankistek, faxistek...
bizitza kaltetu baino ez digute egin.
Eskuindarrak, patriarkak, matxistak,
arrazistak, homofoboak,
supremazistak zurien falangeak...
gure etsi amorratuak,
herritar aurrerakoak bil gaitezen
ez daitezen ugal bortxaren *Arranoak*,
berdintasunean ahizpatuta
jendartea feminista izan dadin.

*2020ko ekainaren 28an*

992
**Mina zirri bihur dadin**

1
Laztana, izan zelako
ebakuntza galera,
urtetan pairatzen ari
zara minaren zera,
ez dezan zure gogoak
ohi lez, jo ezkorrera,
maitez saiatuko gara
ekartzen umorera.



2
Barrutik ezin dizkizut
zirriak oparitu,
ariman bizinahia ta
kemena ongarritu,
ea ahal dudan zure
esperantza bizitu,
berri onak kontatuta
sasidia zelaitu.

3
Aizu, sarri direlako
eskasak aholkuak,
ez dizkizut bidaliko
funts gutxiko mezuak,
arretaz entzungo ditut
zure sentimenduak,
gure arteko solasak
eman ditzan fruituak.

4
Xedea zinez da zure
beharrak obratzea,
oraingo ataka hitsa
pilpilka bukatzea,
estresa eta etsia
ekinez uxatzea,
mina ondo sendatzeko
txera etxeratzea.

5
Ez direlako izaten
ukendu aldarriak,
zorrotz ekidingo ditut
esaera larriak,
gal daitezen behin betiko
burukomin sarriak,
gu laster hasiko gara
asetzen egarriak.

6
Nire nahia zure penak
lurrundu daitezela,
saminari ezarrita
grinaren erregela,
ohean txit gorituta
gure bihotz epela,
kantuz amilduko dugu
patu arras krudela.

7
Askatasunaren datan
piztuko dugu metxa,
konpartitzeko xaloki
garai berriko ditxa,
murruek zirrara laga
digutenez murritza,
pinua ihar dezagun
landatzeko hurritza.

8
Ez dezan desira zula
eriaren orratzak,
guk ahaztuko ditugu
oroitzapen garratzak,
lagun diezagula hartzen
arnasa eguratsak,
pozarren ikus ditzagun
Kantauriko arratsak.

*2020ko uztailaren 5ean*

993

**Gure kantariak ondare**

1

La Polla Records eta Hertzainak [1]
tarte labur baterako berriz gurekin,
oparitzeko zale zaharrei
orduko kontzertuen esentzia,
punka areto handietan entzungai,
rocka txikiagoetan,
euren kantu zoragarriekin
pil-pil bihotzen taupadak.
Laurogeigarren hamarkadan
euren konpromisoa hauspoa,
kantuen hitzek islatzen zituzten
jendarteko gazte askoren nahiak,
ez zegoen hedonismorako lekurik
eskubideak estatuen mende egonda,
orain lez, presoak, drogak, langabezia...
aurrerakoien kontzientzian kezka.



---

(1) *2019. urteko udazkenean*

2

Evaristok gazteleraz kantatzen zuen,
Garik, ostera, euskaraz,
aisian arimak kitzikatzen zituzten,
borrokarako beharra eta grina,
doinuak gaurdaino heldu dira,
txosnak eta gaztetxeak lekuko,
multinazionalen ereduen arrean
euren mezuak iraultzaileak.
Belaunaldi bakoitzak oroitzen ditu
gaztaroko kantariak,
baina hobe da garai denak dastatzea
askatasuna kantatzen ospa dezagun,
Evaristo, Gari, Anje, Fermin, Drogas, Niko,
Aitor... eta joan zirenak txalotzen ditugu,
Benito, Ruper, Gontzal, Fermin... lez, ondare dira
Lurralde anitzaren nortasuna.

*2020ko uztailaren 5ean*

994
**Lau burutazio**

1
Ez daukat idazteko gogorik,
ezta irakurtzeko ere,
nekea sentitzen dut
fisikoa beste mentala,
irudimena zimelduta,
amilduta ezerezean,
ametsetan behintzat dakusat
bizinahiaren dirdira.
Bizitza egunero hasten da
goiz-argia bezala,
nahiak aterata dugu
egoera hausnartzen,
zeruaren arabera
halako aldartea
espetxean, ordea,
estresak agintzen du.

2

Arratsaren hasieran
malenkoniak janzten nau,
muga bako garaia oroituta
ohean zure alboan esnatzen naiz,
zurekin gozo mintzatzen
desioz blai sorginduta,
“maite zaitut” esanda,
zigorrari aurre degiot.
Enpatia landu nahi dut
kideak zu beste maitatzeko,
euren tristura sumatuta
arima ondu diezaiedan,
xedea onik itzultzea delako
Euskal Herria loratzeko,
Jendartean aktiboak izateko,
Etxean maitale eta lagunak.

*2020ko uztailaren 5ean*

995

**Egia libre bizitzeko**

1

Egiagaz hur samar
dago utopia,
gezurragaz, ostera,
gerra lazgarria,
egia ongia da,
gezurra gaizkia,
Urkullurentzat maiz zen
aukeratu lehia.



2

Trump hantusteak, ez du
hobesten egia,
baizik Etxe Zurian
hezur kakatia,
elkartasuna omen
denez huskeria,
“Amerika lehenen”
bere aldarria.

3
Esaerak garbiki
diosku egia,
“eskuindarren ahoan
gezurrak habia”,
horiek idazten dute
hola historia,
aitzindari bat izan
zen Goebbels nazia.

4
Herrian dantzuzkigu
sarritan gezurrak,
hola aritzen dira
faxista makurrak,
beharrez darabiltza
botere lapurrak,
antzeman ez ditzagun
bere iruzurrak.

5
Gure egia *versus*
gezurren zakarra,
gizatasuna *versus*
bortxen kazkabarra,
munduak gain dezala
ataka zaharra,
bakea izan dadin
umeen aparra.

6
Guk diogu, “egia
da iraultzailea”.
“Gezurra, berriuz, labur
ta bidegabea”.
Eraiki nahi dugunez
zuzenki etxea,
gure etika izan
dadila morea.

7
Egiarekin zinez
gara gizakiak,
arrazisten zokoan
erabat piztiak,
feministak ereiten
dabiltza haziak,
gezur matxistatik at
zer daitezen nahiak.

8
Egia izan dadin
herri hau librea,
senti dezagun dela
bizitza hobea,
berdintasuna izan
dadila legea,
pausa daitezen txera
ta ongizatea.

*2020ko uztailaren 12an*

996

**(2020.06.27)**

**Bidegabekeria baten kronika**

1

Espetxea salatu nahi dut,
ez daukalako gizatasunik,
Oñatiko Txebi bihoztuna
atarian bidegabeki uzteagatik,
ekainaren 27an gertatu da
Kordobako mintzalekuetan,
nahiz eta martxotik bisitarik ez izan,
espezainek une alaia ostu digute.
Burokrazia hotza izateaz gain,
herrarekin maltzurra da,
horrelakoak noizbehinka gertatzen dira
murru zurrun mendekarietan,
irudikatuta Txebik jasandakoa
bizipoza lurrundu zait,
"Oñatitik ilusioz blai etorri,
Kordobatik ahoa bete hortz itzultzeko".

2
Irenek herenegun, izurria hasi zenetik
bisita hitzartzeko lehen aldiz deitu zuen.
Konputagailua zela eta ez zela,
espezaina gero, datuekin nahastu zen,
gaur, tamalez, alferrikakoak izan dira
arren eta otoi guztiak,
nahiz eta ahaleginak eta bi egin,
isolamendura itzultzeko agindu didate.
Oi, Txebi adiskidea!
Oi, Irene hurkoa!
zuen samina sentituta
ziegan atsekabetuta nago,
gaurko ezinegona, ordea,
bihar zorion bihurtuko da,
urriaren 11n askatasuna
besarkatuta ospatuko dugulako.

*2020ko uztailaren 12an*

997

**(1980.05.14)**

**Everestera igo ginen**

1

Orain dela berrogei urte zoriona
maiatzak hamalau egun berezia,
Pasang Tenba ikurrinagaz tontorrean
Egin-en hunkituta ikusi genuen,
Martin Zabaletak esan zuen,
"Everestera igo gara",
poloniarren arrosarioa hartuta,
"Nuklearrik ez!" eta beste lagata.
Oinarrizko kanpalekuan auzolana
bidea egoki prestatzeko,
iluntzeko afarietan
sukaldean gozotasuna,
igo eta gero, onik itzultzea
xederik behinena,
herritarren taupadak
gogoetan erantzukizuna.

2
Lorentek zuzendutako espedizioak
balentria burututa,
Euskal Herri sufrituaren irrintzia
munduan garbiki entzun zen,
euskal mendigoizaleak eta sherpak
batuta adiskidetasunean,
euren arteko harremana
enpatiaz ehunduta.
Aspaldian Himalaian
giroa, ez da hain osasuntsu,
mendigoizale asko gu izatetik
ni izatera igaro dira,
orduko herri sentimendua, ordea,
gaur, atseginez oroitzen dugu,
herkide xume haiek zirelako
gure nahien ordezkariak.

*2020ko uztailaren 12an*

998

**Futbola eta bizitza**

*(Habanera)*

1

Niri, herriko berriak
zaizkidalako axola,
neure aisia ezin da
izan gol eta alkohola.,
minez leituta, “Gamesak
itxi du Agoizko ola” (1)

Gaur nagiak aterata
Esan dut, *Arranopola!*,
nahiz benetan ederra den
praktikatzea kirola,
ez dadila izan zure
grina bakarra futbola,
izan zaitez altruista
etxean zurekin nola,
ezer ez dutenak ditzan
elkartasunak kontsola.

---

(1) *Siemens Gamesa multinazionala.*

2

Nahiz futbolean nahitaez
agintzen duen diruak,
horixe, ez du sekula
salatzen zale fermuak,
bestalde ugaltzen ari
dira etxe-apustuak,
jokoak tristatzen ditu
gazte askoren musuak,
futbolari franko dira
jendartean ahaltsuak,
kontsumismo makur eta
hutsalaren ereduak,
sarri doilorki *ahazten*
dituzte zeren paguak,
paradisu fiskaletan
ei daude euren bankuak.

3

Palkoetan harro jartzen
delako botere dena,
futbolari uzten dio
egiten gura duena,
nahiz garbi merezi duen
bere zor handiak pena,
etxerik gabe geratzen
da zordunik txikiena,
kezka ahantzaraztea
baloiaren ahalmena,
hola ez duzu sentitzen
pobreziaren eztena,
langabeziaren drama,
gerrako oihu ozena,
txalotzea ziplo gol bat
ei delako hoberena.

4
Gaztetan futbolak zinez
ninduen bereganatzen,
futbolariak, ez ziren
orain bezala, zoratzen,
esparruko leotzean
noizbehinka dut estimatzen,
baina idazten ta leitzen
barrutik naiz eskapatzen,
kultura eta kirola
has gaitezen parekatzen,
euskara Athletic beste
lagun minekin ondratzen,
futbol-zelaia moduan
izadia kontserbatzen,
gizatasuna harmaila
sutsuetan ihinztatzen.

*2020ko uztailaren 19an*

999

**UBER eta Airbnb bi izain**

1

UBER eta Airbnb bi plataforma,
bi monopolio lotsagabe.
Silicon Valleyko beste bi izain
dirutzeko prest arriskatu barik,
ezagututa azken krisi mundialak
zertutako langabezia,
iraultzera animatu ziren

turismo eta taxien arloak.
Airbnb-k ez du ostaturik,
ezta UBER-ek kotxerik,
areto bat nahikoa dute
negozioa bideratzeko,
plataformek teknologia berriekin
bitartekari lana dagite,
bezeroak lortzen dizkiete
etxe eta kotxeen jabeei.

2
Airbnb eta UBER-ek
egoitzak Kalifornian dauzkate,
zerga gutxi ordaintzen dutenez
etekinak Silicon Valleyra doaz,
*adimentsuek* erregulazio eza
dirua zurrupatzeko baliatzen dute,
ostalariak eta taxistak dardarka
ezin direlako mamuekin lehiatu.
Kapitalismo basak geuri esker
pobrezia geurean handitzen du,
Airbnb-k auzotarren bizitza garestituz,
UBER-k taxistak-txoferrak prekarizatuz,
ustiatzaile hauen kontra batasuna,
norberekeriaren aurrean auzolana,
ez gaitezen lohian ito,
berdintasuna gauza dezagun.

*2020ko uztailaren 19an*

1000

**Paradisu feministan biziko gara**

1

“Gure Ama-Lur feminista da,
ongia eta ongizatea,
bizitzaren ardatza,
sorleku eta altzo eternala”,
goiztirian otu zait
izakiak oroituta,
ideologia matxistak
onura hondatzen diharduelako.
Ama-Lur eta Mari bildu eta gero,
feminista sendunekin
paradisuak iraun dezan
badakite zer egin,
“Patriarkatzarik ez!”, dioskutenez,
maitea bat gaitezen eurekin,
gure amets zoriontsuak
Euskal Herrian gauza ditzagun.

2
Paradisuan biziko gara,
sagardi oparoan,
sugegorri barik atezuan
patriarkatzaren agindupean,
Biblian adina herrian
bortxan mendetan jasanda,
maitasuna ukendu
zauriak orbaintzeko.
Infernutik aterata,
isolamenduaren zokotik,
amesgaiztoak gal daitezen
zurekin bizitzea desira,
gaurik motzenean biluzik
belardi hezean oinez,
ihintzarekin garbituko gara,
eguzki berriak besarka gaitzan.

*2020ko uztailaren 19an*

1001

**Rodinen *Pentsalaria* lez, pentsatzen**

1

Auguste Rodin zena ziplo
gauean gogoratzen,
*Pentsalaria* lez, nago
komunean pentsatzen,
esku-ahurra okotzean
hasi bainaiz sumatzen,
bizitza ziztu bizian
ari dela pasatzen.



2

Ohartu naiz daukadala
bertan zahartzaroa,
zain izan dezakedala
edonon herioa,
baina kalean izango
naizenez aktiboa,
hornitu nahi dut bizipen
ederrekin gogoa.

3
Komunetik ilunpean
ostera ohatzera,
txarrantxa bako bizitzan
zer egin eratzera,
gauminean menturatu
bainaiz ahoskatzera,
"maitea zugaz bilduko
naiz etxean atzera".

4
Pozarren pausatuko naiz
berriro sorterrian,
urrian hegan hasiko
naizelako abian,
ea sartzen garen euskal
preso bako garaian,
zorian bizi gaitezen,
murru barik ongian.

5
Hirurogeita bi urte
aurten ditut konplitu,
horietatik askatasun
barik hogei sufritu,
barruan ia dudanez
azken malda gainditu,
“arren”, diot, “osasuna
zaidala eguzkitu”.

6
Rodinen erakusketa
Bilbon nuen prezatu,
Arte Ederren museo
bikainean dastatu,
bizitza gerora lohian
net zitzaidan trabatu,
gatazkak ninduelako
kartzelan kateatu.

7
Eskulturak lasai eman
dezala iritzia,
bere arima garbiak
zehatz esan egia,
bere aholkua izan
dadila lorgarria,
pizkundea zertu dadin
udaberri joria.

8
Kideok dakigu zein den
eskulturaren nahia,
“hurkoek gurekin goza
dezatela loria”,
“Euskal Herriak hurbildu
dezala utopia,
feminista izan dadin
gure demokrazia”.

*2020ko uztailaren 26an*

1002

**Gure memoria gure historia da**

1

Gure memoriak historia ehuntzen du
antzina sutondoetan legez,
asaben balentriak eta pairamenak
berbetan ezagutzen zituzten,
baina monarkia bortitzen garaian lez, orain,
estatuek komeni zaiena saltzen digute,
tamalez, euskaldunok maiz aupatzen ditugu,
inperialisten alde aritu zirenak.
Zanpatzaileek egia bortxatzen dute
mito eta istorioekin,
herritarrak bereganatzeko
boterearen metodo eraginkorra,
zanpatuok, aldiz, galerak aztertzen ditugu,
ulertzeko izan ginena,
objektiboak izaten saiatzen gara,
asmatzea, ez delako zilegi.

2

Gure memoria lantzen dihardugu
historia zuzen osatzeko,
antzinatik gaurdaino, jazo denarekin,
gure jakintza ontzen ari gara,
zehatz-mehatz ikertu nahi dugu
geurea nola joan zen zertzen,
zergatik izaten darraigun
hainbeste zanpaketa jasan eta gero.
Iraganetik, orainera heldu gara
historia gazi-gozoekin,
lurraldea aspaldi banandu ziguten,
baina memoria, ez zaigu lanbrotu,
geroan izana dir-dir gordeko dute
esateko, "guk munduan darraigu.
Historiaurretik hemen gaude.
Euskaraz libre bizi gara".

*2020ko uztailaren 26an*

1003
**Bizigurak esna gaitzan**

1
Hankak nekatuta, mihia idortuta,
eskuak minduta, begiak erreta...
zuengandik nahitaez urrunduta
isolamenduan triste nago,
neguan burmuina izoztuta
pentsamendua nekez dabil,
ezin ditut hitzak ekarri
mahaira arrastian.
Covid-19 izurriarekin
gure egoera ilunpean,
iruzkin hori egin dizuet
telefonoz hitzak konpartituta,
kuttuna mintzatzen garenean
horixe bera diotsut,
estatuen jarrera mendekariak,
ez diezagun kemena lurrundu.

2
Gaur, gutuna irakurrita
askatasuna arnastu dut,
oroituta irri atseginak
sentiera kitzikatu didazue,
azken negua gaindituta,
eta udaberria,
uda, ez zait iruditzen
kartzelan haren sargori.
Kirioak dantzan hasi zaizkit,
kate barik batuko garelako,
hogei urte eta gero, urrian,
libre laztanduko zaituztedalako,
baina zoriona hega dadin,
kartzelak hustu behar ditugu,
gure amets zoragarrietan lez,
goizero bizigurak esna gaitzan.

*2020ko uztailaren 26an*

1004
**Gure bizitza izango delako duina**

1
Gerezi gorri mardulak janda
gehituko zaigu ardura,
euskal presoak herriratuta
biziko gara gustura,
Euskal Herria demokrazian
behingoz dezagun aingura,
arimara hel dakigun giza
eskubideen onura.



2
Presoak sarri amets dagigu
herrian bizi garela,
auzolanean lurtu dugula
zapalkuntza den kartzela,
ezarri bezain azkar herriari,
oro huts dadin fardela,
gaurko zingira ustela bihar,
izango da urmaela.

3
Zuzen eraiki nahi dugulako
jendarte sano hobea,
berdintasuna erein dezagun
haz dadin ongizatea,
elkartasuna izan dadila
enpatia lez, legea,
gizatasunak sustraitu dezan
trintxera barik bakea.

4
Joan zirenentzat lez, konponketa
preso gaudenon beharra,
ez dadin inoiz ihartu gure
esperantzaren zuztarra,
kemenez ari gara zelaitzen
sasidi sarri zaharra,
kartzelatik at dasta dezagun
garai berriko nektarra.

5
Feminismoa, patriarkatzak
laga dezan agintea,
matxismo barik obra dezagun
utopiaren bidea,
ikurrinari gehi diezaiogun
kolore polit morea,
edonon garbi ikus dezaten
herria hau dela xumea.

6

Gu lasai gaude hur dugula
sumatzen gure eguna,
zuen berbekin dantzugulako
zoriaren oihartzuna,
zama zuei esker, ez denez
izaten haren astuna,
ziegan gutunak pilpilka leituz
diogu, *Askatasuna*.

7
Gaizki makurra zentzuz bidali
dugulako pikutara,
gazteak eta helduak trostan
joango gara horretara,
umeek eta guk ederkiro
goza dezagun zirrara,
iheslari ta presorik gabe
bizipozaren algara.

8
Euskaraz ari gara ospatzen
egun ala atsegina,
elkarbizitza zintzo zertzeko
egin dugulako zina,
preso egonda urtetan orain,
bizitza delako duina,
"gerezi haien uzta", diogu,
"izan zen zinez bikaina".

*2020ko abuztuaren 2an*

1005

## Eibarrera hegoagaz itzuliko naiz

1

Hegoari izkiriatu diot,
sorgintzen gaituen haizeari,
mezua eraman diezaien,
maite nauten hurkoei,
"Laster gure Euskal Herrian
elkar ikusiko dugu,
udazkenaren hasieran,
urriaren hamaikan hain zuzen".
Atseginez usainduko dut
Eibar berriaren lurrina,
zaharra han geratu zelako,
atxilotu ninduten gauean,
lagun minak ondratuko ditut,
gazte xaloak ezagutuko,
nire sentimendu gatibua
harreran suspertuko da.

2
Hegoarekin hegatuko naiz,
enarekin gurutzatuko,
arren, onik hel daitezela
Afrikako habietara,
tamalez, ez gara kide guztiak
espetxetik libre aterako,
udaberrian gerta dadila,
tristura irri bihur dadin.
Laztana hegoagaz itzulita
zurekin gozo biziko naiz,
herra eta bengantza barik
maitasunaren abaroan,
bien bitartean urriari
lasai itxaron diezaiogun,
etxartean kideekin hola nago
zu akordura ekarrita.

*2020ko abuztuaren 2an*

1006

**Gure ardura izurria gaintzea**

1

“Orain, arduraz arituko gara
izurria gaintzea lehentasuna”,
Euskal Herrian martxoaren 11n
ezker abertzalearen mezua,
kartzelan euskal presoak
berbetan bat egin genuen,
maiatzean isolamenduan

ardura horrekin darraigu.
Koronabirusa indargetuta,
kaleak eta plazak araztuta,
erantzukizunak eskatzeko
salaketen unea helduko da,
bien bitartean gure etikak
lurraldea erein dezala,
osasun barik ezin garelako
xedeen helmugara iritsi.

2

Leiho eta balkoietatik
txaloka hasten zinetenean,
bihotza sanitarioena beste
pilpiratzen zitzaigun,
"konplizitateak zirraraz ehunduz
herria dugu osatzen ere",
hori dioskuzue gutunetan
gure sentimendua loratzeko.
Nahiz izurria dela medio,
bisita barik geratu,
ziegan gurekin zeundeten
taupadak konpartitzen,
orain udan, zuek eta guk lehen lez,
gaitza uxatzeko tinko darraigu,
gure ekarpenak izan daitezen
herri hobea zertzeko oinarriak.

*2020ko abuztuaren 2an*

1007

**Bizikidetza sustrai dadin**

1

Sorlekuan bizitza
maiz zelako gerra,
oraindik kaleetan
sumatzen da herra,
zuzenki konponduta
ataka okerra,
gatazkaren zauriak
ditzakegu zerra.



2

Zintzo idatz dezagun
gure memoria,
errepublika izan
dadin aberria,
helburu ideala
denez utopia,
gaurko txaradia da
izango zelaia.

3
Borrokan ari gara
josteko habia,
egozteko herritik
mina den gaizkia,
gizatasunak gaindu
dezan larderia,
auzolanean erein
dezagun ongia.

4
“Gerrarik ez!”, diogu,
delako galera,
antzinatik herriak
galdu diren era,
zentzuz hobe dezagun
gure izaera,
loreztatzen has dadin
bortxaren trintxera.

5

Maiz irudikatzen dut
egun dirdaitsua,
giza eskubidez ta
ferekaz ondua,
solidaridadeak
dakar ur purua,
klaserik gabe berda
dadin eremua.

6

Feministek nahi dute
lurtu matxismoa,
tronutik eror dadin
kapitalismoa,
udaberria izan
dadin oparoa,
Euskal Herri morea
haurren abaroa.

7
“Ekaitzaren ondoren
dator ostadarra”,
euskal kulturan baita
esaldi zaharra,
bakeak behingoz isil
dezala liskarra,
libre obra dezagun
jendarte nabarra.

8
Bizikidetza hitza
delako hiztuna,
besteari deituko
diogu laguna,
preso barik adostu
dezagun ituna,
zinez hel dadin denok
nahi dugun eguna.

*2020ko abuztuaren 9an*

1008
**Ziegan desiraz blai**

1
"Atzo lez, desiratzen zaitut",
goiztirian xuxurlatu dut,
ohetik izerdiz blai jaikita
uda sargorien ezlekuan,
zurekin bildu nahi nuke
pilpirak partekatzeko,
gure larruak ferekatzeko,

plazera patxadaz dastatzeko.
Zure begi politak oroituta,
irria eta ahotsa,
edertasunarekin amets egin dut,
gure bazter naturalekin,
izadian planak genegitzan
bizitza batera gozatzeko,
tamalez, eskura geneukanean
zoria ostendu zitzaigun.

2

Ziegako mahaian txeraz idazten
esateko maite zaitudala,
gogoan elkartzen garela
gauerdian atseginez,
zure besoetan babestuta
bihotza urtzen zaidala,
ilargi betearen gauetan
zugaz dantzatzen naizela.
Tristuraren mende nagoenean
zure argazkia suspergarri,
zigorraren zama arintzeko,
sentiera kitzikatzeko,
gure oasiaren urmaela
bertsotan irudikatzen dut,
zu eta ni maitasunaren sarean
etzanda izartegiari begira.

*2020ko abuztuaren 9an*

1009
**Joatea ebatzi zuen amari**

1
Joatea ebatzi zenuenetik
gure bizitza samina da,
atseden barik miatu ditugu
zure gustuko bazterrak,
zoritxarrez, emaitza barik
esperantza agortu zaigu.
Etsipenean amildu gara

udazken euritsuan,
gaur egun, amets tristeetan
gugaz nolabait bizi zara,
toki bat behar dugu, ordea,
zugaz maitez mintzatzeko.

2

Ama, maitasuna zarelako
zu gabe bizitza zaila,
gugandik at hor nonbait zaudenetik
egunak eta gauak astunak,
itsasoa eta mendiak gogoan
sukaldea negarrez blaitu dugu.
Ama, hurkoen epela sentituta,
hona hemen desio behinenak,
“Iretargiak zain zaitzala,
Eguzkiak gozo laztandu,
zure oroitza liliz bezti dadila,
lurrinak bizinahia opa diezagun”.

*2020ko abuztuaren 9an*

1010
**(2020.05.11) Bideo-deia**

1
Gure anaia Iñigo,
Eneko ta Iraia,
zuekin pozik egin dut
solasaldi bitxia,
niretzat bideo-deia
izan da jaialdia,
isolamenduan esan
baitut, “hau delizia”.



2
Iñigo, Iraia eta
Eneko ahaideak,
gogoz aipatu ditugu
giza eskubideak
ontasunaren eredu
direlako oldeak,
zanpaketa iraultzeko
har ditzagun goldeak.

3
Ziegan kantuz oroitu dut
gaurko bideo-deia
kartzelan izan da nire
lehenengo aldia,
Iraiak erakutsi dit
antzinako habia,
orain nik badakit zer den
whatsapparen magia.

4
Teknologia berriak
dira zoragarriak,
baina gaizkiaren esku
arras kaltegarriak,
whatsappak guretzat izan
direnez ongarriak,
esan dugu, “ez direla
hain kezkagarriak”.

5
Atzo Eibarren mintzatzen
egon nintzen zuekin,
kartzelan ziplo ahaztu
nuen whattsapparekin,
maiatza oro loratu
zitzaidan irriekin,
oparitu zenidaten
une ederrarekin.

6

Izurriteak dizkigu
eten ikustaldiak,
sakabanaketak beste
oztopatu zirriak,
bideo-deiak zizkigun
distiratu begiak,
gozatu hurko minen
sentimendu eztiak.

7
Koronabirusak noizbait
joango denez murrizten,
ea gure sorlekura
laster garen iristen,
orain lez, jarrai dezagun
itxaropena pizten,
xedera heltzeko bide
egokian sinisten.

8
Penak laga eta gero
herraren ezlekuan,
zuekin salan afaltzen
egongo naiz zeruan,
arren, ez dadila gera
kide minik barruan,
zoriona sustrai dadin
senideen musuan.

*2020ko abuztuaren 16an*

1011
**Zahartzaroa konpartitzeko**

1
Maitasunari buruz mintza gaitezen
gure akats eta bertuteekin,
harremana oneratzeko,
harmonian osatzeko,
samurtasuna lehenetsita
etsipena ekiditeko.
Gaztaroa urruti geratuta
zahartzaroa dastatuko dugu,
ajeak eta penak gaintzeko,
bizitza aprobetxatzeko,
etxea oasi bihurtuta
ederki egongo gara.

2

Gure aldeak maiz konponduta
demokrazia zer den dakigu,
erakarmenaren ardatza
askatasun sanoa,
atsegina sustatzea
egun motz ilunetan.
Gure desira ongi hasi zenak
nik kartzelatik at segi dezala,
sentieran kulunka gaitezen,
lehen lez, udaberri berrian,
Ama-Lurrean atseden hartu arte
zoriona grinaz konpartitzeko.

*2020ko abuztuaren 16an*

1012
**Glovo hustu dezagun**

1
Silicon Valley laborategi
gure ohiturak aldatzeko,
plataforma bat zorpetu bezain azkar
akzionistek suspertzen dute,
euretariko bat Glovo da,
ziur asko bizkarroiena,
2008. urtean finantzatu zuten

krisi ekonomikoaren hasieran.
Glovon ziklistak ari dira
lanean autonomo gisa,
etxera bizikletan daramazkigute
hor nonbait eskatutako jakiak,
interneten bitartez jatetxeak,
gazteak beste zukutzen ditu,
ez denez tabernen eta bizikleten jabea,
ekonomikoki arrisku gutxi dauka.

2

Glovo Euskal Herrian sartuta
ziklista gazteak beraren mende,
bizikletekin eskaerak bana ditzaten
poltsa astunak bizkarrean lotuta,
zulaketak, matxurak, istripuen bajak...
langileen kontura izanda,
etekin eskas eta  neke handiekin dira
neoliberalismoaren jopuak.
Silicon Valleyko aberats berriak
gure lurra lehortzen ari dira,
erosotasuna eskainiz pobretzen gaituzte
indibidualismoaren aroan,
baina internet asmakizun ona da
elkartasuna sustatzeko,
auzolana geurean sendotzeko
jendarte sanoa erna dadin.

*2020ko abuztuaren 16an*

1013

**Izan Bidea kilometroak egiten**

1

Sare tinko ari da
hedatzen sarea,
nork maitez eman dezan
bere lekalea,
iheslariak eta
presoak xedea,
eurekin izan dadin
herri hau hobea.



2

Sarek diosku, “moztu
oinez oztopoak”,
ezlekukoek laga
ditzaten zokoak,
herrian ondo presta
ditzagun zangoak,
plazetan libre pausa
daitezen zintzoak.

3
Aizu, izan bidea,
jarraitu geziak,
Euskal Herriak dasta
ditzan gereziak,
gure kutunek gaindi
ditzaten hesiak,
lurtu daitezen ziegak
eta harresiak.

4
Gaizkiaren kiratsa
nahi dugu haizatu,
Sarerekin bidea
korrika osatu,
laguntza dizuegu
berriro eskatu,
preso-iheslariak
daitezen bueltatu.

5
Sare bizikidetza
ari da hurbiltzen,
jendarte anitzean
enpatia biltzen,
hitz egiten mendeku
sumina zurbiltzen,
bidean neke barik
kemenez ibiltzen.

6

Bi estatuek bete
dezatela hitza,
ez delako zilegi
gaurko zorigaitza,
bakean nahi dugunez
loratu bizitza,
ziplo hustuko dugu
herraren harritza.

7
Macronek ta Sanchezek
senti dezatela,
Izan Bidea-k naro
txera dakarrela,
Sareren apustua
zoriona dela,
libre bizi nahi duen
herri bat garela.

8
Herrian  nahi dugunez
konpondu afera,
jator atera gara
dena ematera,
Sareren planak oro
jasota harrera,
ihintzaren dirdira
enaren plazera.

*2020ko abuztuaren 23an*

1014

**Albiste hitsak heltzen direnean**

1

Ziegan albiste hitsak entzunda
sabaia erortzen zaigu,
dolua gure sukaldeetan lez,
txerarekin gozatzen dugu,
aurrez-aurrean etxekoen taupadekin,
patioan kideen laztanekin.
Zigorraldia betetzen joan ahala

zenbat malko kartzelan,
ezin agurtuta hil diren kuttunak
gogoa malenkonian amilduta,
zinez erabaki hoberena
eurekin mintzatzen segitzea.

2
Gertukoak gaixotzen direnean
bisaia iluntzen zaigu,
euren aldamenean egon nahi dugu
eskuak leuntasunez hartzeko,
“zoragarriak zarete”, esanda
bizitzaren alde borrokatzeko.
Kartzelan laguntza ezin eskainita
bizipoza nahitaez itzalita,
kementzeko, “goazen kalera”, diogu,
herrian aktiboak izateko,
artatzeko gaixorik dauden hurkoak,
gure sentimendua direlako.

*2020 abuztuaren 23an*

1015

**(1820.08.12)**

**Jose Mari Iparragirreri**

*Angela gogoan*

1

Jose Mari txapela eta bizarra,
gitarra eta sentimendua,
erbesteratu geldiezina,
euskaldun unibertsala,
seduktore lotsagabea,
artista eta tunante,
etika gutxiko gizakia,
ospe handiko mitoa.
Liberal eta *Gernikako Arbola*,
karlista eta *Marseillesa*,
kantari eta kantugile ona,
tabernari eta artzain txarra,
kalean eskuzabal totala,
etxea nahitaez ezinduta,
gaztaro arrats kementsua,
zahartzaro penagarria.

2
Jose Mari, zu Urretxun jaio arren,
Madrilen koskortu zinen,
hamalau urterekin itzultzeko
amari gezurra esanda,
lehen gerran karlistan borrokatzeko,
euskal foruak salbatzeko,
gitarraren aurretik arma hartu zenuen
dena emanez zauritu zintuzten arte.
Vergarako besarkadarekin haserre,
Maroto eta Esparterorekin,
Dantxarineatik Iparraldera joanda
Europan artea lanbide,
ezinbestean poliglota,
antzerkilari, musikari...
konposatzeko gure ondarea
euskara zure hizkuntza.

3

Gerran galtzaile suertatuta
erbestea zuretzat abaro,
artista eta maitale izan zinen
bueltatzeko baimena jaso arte,
Jose Mari, amak ironiaz esan zizun,
“Hau al da eskolatik etortzeko ordua?”
Madrilen Gernikako Arbola lehen aldiz (1)
San Luis tabernan kantatu zenuen.
Arbasoen foruak goratuta,
herkideak zurekin suspertuta,
Agur Euskal Herriari esan zenion
Espainiaren etsai berriz eginda,
gerora Ameriketara joango zinen
Anjela emazte gaztearekin,
Rio de la Platan moila mukuru
Euskaldunak zirraraz blai zurekin.



(1) *Musika Blas Altunarena eta hitzak Jose Migel Arrietarenak.*

4

Uruguain zortzi haur izan zenituen
Anjela oro maitearekin, [2]
lanerako ezgaitasunaz erreka jota
alde egitea irtenbide,
Euskal Herrira pobre eta ahul
senide barik joan zinen, ordea,
harrera egundokoa izan arren,
Zozobarro-txikin soilik hil zinen. [3*]
Ekimen kulturalak direla medio,
Anjela gogoan oroituko zaitugu,
zure nortasun poliedrikoa
arretaz aztertuko dugu,
*Gernikako Arbola* ia lehen beste,
aurten gure ereserki egingo da,
Euskal Herria berrehun urte
zurekin bizi delako.

*2020ko abuztuaren 23an*

(2) *Itsasoko baserria.*
(3*) *Alegiko Anjela Kerejeta.*

1016

**Joan Mari Torrealdairi. Euskaltzaleei**

1

Guk kemena esanda
diogu Joan Mari,
hamaika egitasmo
eta agerkari,
zugaz mintzatzen ari
gara ikerlari,
eman diozulako
dena euskarari.



2

Forutik igo zinen
zu Arantzazura,
zure ahala bertan
elorrien zura,
Jakin tresna izan zen
ontzeko kultura,
euskara batua haz
zedin egitura.

3
Joan Mari, “Euskaldunon
Egunkaria da!”,
ozen esan genuen
sumatuz taupada,
gero, jasan zenuen
torturen sastada,
herrak artxiboari
jo zion pikada.

4
Kulturgintza zuretzat
gustuko ardura,
herriak lilitzeko
behar zuen ura,
Joan Mari, auzolana
zen zure ohitura,
euskarak libre ahaz
zezan arrangura.

5

Joan Mari, ekarpena
izan da naroa,
zure aroa ele
mina piztekoa,
maiz salatu zenuen
glotozidioa,
euskarari eskainiz
aterpe sanoa.

6



Zure txindurri lana
zinez erraldoia,
euskal liburuena
Jakinen argia,
liburu beltzarena
gure historia,
euskarak bizi duen
erasoaldia.

7
Joan Mari, zinez zara
gure kontzientzia,
Txillardegi lez, euskal
zenaren hazia,
zeuri esker negua
da udaberria,
euskarak dakarkigu
musu-truk loria.

8
Joan Mari, duina izan
denez akabera,
joan zara bizitzeko
gurekin ostera,
gu orain, garelako
zure izaera,
ez da galduko behar
egiteko era.

9

Usurbilen hasi da
kantatzen herria,
“Joan Mari, maitez gara
zure sinfonia”,
goiztirian urdindu
denean ortzia,
euskarak edertu du
umeen bisaia.

10
Joan Mari, zu idazle
mendigoizalea,
gure Ama-Lurra da
zure maitalea,
gidari zarelako
guretzat bidea,
mendietan batuko
gara ahaidea.

*2020ko abuztuaren 29an*

1017
**Kartzelako goiztirian**

1
Gauetik nintzenean
iristen goizera,
halabeharrez joaten
nintzen komunera,
maskuria hustuta
gero, sukaldera,
gosariko esnea
bizkor berotzera,
ziegan akordatzen naiz
gutxi gorabe(he)ra.

2

“Zenbaketa!”, entzunda
hasten da eguna,
presoentzat noizbehinka
momentu iluna,
txorien txioekin
goiztiria leuna,
agertzen zaidalako
gogoan kuttuna,
oro gogoratzen dut
bere ontasuna.

3

Zera gu zenbatzeko
denean pasatzen,
gosaria mahaian
ari naiz dastatzen,
goizik jaikita lasai
ohi dut apailatzen,
kartzelako dute
gerora banatzen,
ziegan ni saiatzen naiz
ondo elikatzen.

4
Neguan altxatzea
izaten da latza,
hotza dela medio,
zin-zinez aldatza,
udaberria denez
izakian gatza,
behar egiteko naiz
sentitzen maratza,
makila jota dut
dantzatzen erratza.

5

Bizarra egitea
ziegan da herstura,
etxean presa barik
izango lilura,
zuk ikus diezadazun
zainduta itxura,
zure poza maitea
dudalako gura,
bizitza izan dadin
guretzat freskura.

6
Noizbait esnatuko naiz
zure ohatzean,
barru gaitza lagata
betiko atzean,
kideak lez, herrian
libre pausatzean,
taupadak konpartituz
gure maiatzean,
naturan oinez lurrin
ona hedatzean.

*2020ko abuztuaren 29an*

1018

**Sorkuntzekin honaino heldu naiz**

1

Sorkuntzan urtetan jardunda
noizbait gertatu behar zen,
iturburua ur barik
etorria agortu zait,
musak dirudi direla
nirekin aspertu.
Kartzelara moldatuta
idazten hasi nintzen,
sentimenduen abaroan
tristura leundu zitzaidan,
ziegan hori sumatzen dut
Ataramiñeri esker.

2

Auzolana dela medio,
sorkuntzak argitaratuta,
nire ekarpena zinez zuena
kaleko erle nekaezinak, [1]
aurkezpenetan harmonian
kultura laztandu duzue.
Eibarko Parnasoko hurko minak
lasai egon zaitezkete,
nahiz udarak etorria zimeldu
udaberriak mardul diezadake,
zuek gidatuta honaino heldu naiz
barru ilunetik Arrateko argira.

*2020ko abuztuaren 29an*



[1] *Irene, Edurne, Jon, Antton, Mariano, Juantxo, Ixidro, Mitxel, Oier, Jokin eta gainerakoak.*

# Aurkibidea
## ZER-NON

### PRESOAK

SENTIPENAK-OROITZAPENAK

B U R U T A Z I O A K

Lau burutazio. [994]
Egia libre bizitzeko. [995]
UBER eta Airbnb bi izain. [999]
Paradisu feministan biziko gara. [1000]
Rodinen *Pentsalaria* lez, pentsatzen. [1001]
Bizikidetza sustrai  dadin. [1007]
Zahartzaroa konpartitzeko. [1011]
Glovo hustu dezagun. [1012]



E U S K A L   H E R R I A

11/13 gaindituko dugu. [870]
Ehun urte iluntasuna argitzen. [881]
11/13 auzia: berrogeita zazpi duinen eredua. [894]
Catalunya eta Euskal Herria udazken haizetsuan. [900]
(2020.01.30) Euskal Herriko Eskubideen Kartari. [945]
2019ko Abenduan Anaitasuna haurrez mukuru. [966]
“Bertsolari” zoragarri. [980]
(2020.04.12) Aberri Eguna etxeetan. [981]
EHZ Irisarrin (2020) Covid-19k uzten badio. [990]
Gure memoria gure historia da. [1002]
Izan bidea kilometroak egiten. [1013]

## E I B A R



## G O G O A N



## M U N D U A R I   B E G I R A



## PERTSONAIAK



**Ametsen txokoan bizi naiz**
**[1-162]**
Ataramiñe. *2011.*



**Ainarak herrira itzuliko dira**
**[163-308]**
Ataramiñe. *2014.*



**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
**[309-450]**
Ataramiñe. *2016.*



**Udaberrian biziko gara**
**[451-580]**
Ataramiñe. *2017.*



**Hamaika desio utopiarako**
**[581-721]**
Ataramiñe. *2018.*




**Gure memoria, gure historia**
**[722-862]**
Ataramiñe. *2019.*

# **atara**miñe

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso. *2003.*

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa. *2004.*

**Kartzelako leihotik**
Joseba Arregi. *2004.*

**Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina**
Joxe Blanco. *2004.*

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza. *2005.*

**Azeri gosetia**
Kepa Etxebarria. *2005.*

**Ataramiñe kantuz**
CD. Hainbaten artean. *2006.*

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). *2007.*

**Zimaren abenturak**
Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. *2007.*

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta. *2008.*

**Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar**
Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. *2008.*

**Penumbras de un ayer**
Iñaki Ojeda. *2009.*

**Preso nago**
Mikel Orbegozo. *2010.*

**Bakarmortuko kronikak**
MIKEL ANTZA. *2011.*

**Espetxetik at**
BORXA URBERUAGA. *2011.*

**Ametsen txokoan bizi naiz**
IBON MUÑOA. *2011.*

**Ametsen txokoan**
CD. HAINBATEN ARTEAN. *2012.*

**Kandela bat pizteko behar dena**
MIKEL ANTZA / IKER MORENO. *2012.*

**Fakin xokona**
OIER GOITIA. *2012.*

**Sasian barna**
XABIER MAKAZAGA. *2012.*

**Preso nago 2**
MIKEL ORBEGOZO. *2013.*

**Z²**
MIKEL ANTZA. *2013.*

**Agurra eta ohorea**
JOKIN URAIN. *2013.*

**Ainarak herrira itzuliko dira**
IBON MUÑOA. *2014.*

**Urte ilunak**
NELSON MANDELA (ITZULPENA: EKAITZ SIRVENT). *2014.*

**Ilargiraino!**
MIKEL ORBEGOZO. *2015.*

**Burdin elorri arantzetan**
Joseba Arregi. *2015.*

**Haizea eta Lizar Magikoa**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Kuku erlojua**
Kepa Etxeberria eta Xabier Ugarte. *2016.*

**Haizea**
Hainbat egile. *2016.*

**Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin**
Ibon Muñoa. *2016.*

**Kartzelako kronikak**
Jexuxmari Zalakain, *2016.*

**Axelko eta Otsoko bertsotan**
Kepa Etxebarria. *2017.*

**Udaberrian biziko gara**
Ibon Muñoa *2017.*

**Errezel berdeak**
Jexuxmari Zalakain. *2017.*

**Txori mezulariak**
Joseba Erostegi 'Eltzikorta' / Lorea Erostegi Fernandez. *2018.*

**Hamaika desio utopiarako**
Ibon Muñoa. *2018.*

**Egia baten egunerokoa**
Oier Goitia. *2018.*

**Gure memoria, gure historia**
Ibon Muñoa. *2019.*

**Basatza**
Hodei Ijurko Irotz. *2019.*

**Amonaren ipuin magikoak**
JOSEBA EROSTEGI / LOREA EROSTEGI. *2019.*

**Zaldi Zoro**
MARI SANDOZ (ITZULPENA: AITOR FRESNEDO GERRIKABEITIA). *2020.*

**Gure Ama-Lur feminista da**
IBON MUÑOA. *2020.*



**ataramiñe**

EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

**www.literaturakoadernoak.org**



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

*Gure Ama-Lur feminista da* Ibon Muñoaren zazpigarren liburua dugu. Espetxean idatzi dituen azkena izango da, urriaren 11n, liburu honekin batera, bera ere kaleratu egin zen-eta.

Aurretik argitaratuak ditu:
*Ametsen txokoan bizi naiz* (2011),
*Ainarak herrira itzuliko dira* (2014),
*Bidean gaude, aurrera goaz, joan zirenekin* (2016),
*Udaberrian biziko gara* (2017),
*Hamaika desio utopiarako* (2018),
eta *Gure memoria, gure historia* (2019).
Haien ildoari eta orden kronologikoari jarraitzen diete liburu honetako bertsoek ere.

Hartara, lehen bertsoak 863. zenbakia darama; azkenak, 1018.a. Guztira, 156 bertso berri, 2019ko ekainaren 30etik 2020ko abuztuaren 29ra artean Kordobako espetxean idatziak.

Zazpi liburutan, 1018 bertso,
hogei urteko espetxealdian idatziak.



ataramiñe

**www.literaturakoadernoak.org**